*Aitari eta amari, tio Pepe eta tia Juanitari,*

*etxeko gainontzekoeri, Jaioneri.*

*Laguntzen ibili diren Mitxel, Irene, Maribel eta Trunboiri.*

*Asier Heriz eta Iñaki Saezi.*

*Nirekin Puerto I-ean dauden kideei.*

*EPPK osoari.*

## Mandiolako kardantxilluak kaixolako kalandresari biharraren gaiñian

Hamar urte honetan, jakiñekua dok kalandres hori, preso hakela hainbat kaixolatan eta hire gorputza katigu dakelakuan, harrokerixaz gaiñezka dabizela, adurra darixola, hezi habelakuan. Ez jittuek hire modukuak ezagutzen!!

Han hago kardantxilluon libertadian alde egin dualako herri honek iñoren bende luzaruan jarraittu ez deixan. Baiña hire burua gure artian dagok, Arrateko zelaixan, Untzagan, Bidebarrixetan, Txantxazelain...



Badakik Jose keridok esaten zebana?. Jose keridok jiñuan eze Gorostaballeko kardantxilluak eta Mandiolakuak diferente joten dabela kantua. Batak txorrotxioka egiten ei jok eta bestiak txiotxorroka. Hau dok markia! horretan be burrukia!! Belarri zorrotzekuak zittuan gure aurrekuak, burrundara gutxiago be bajeuan eta. Arraten "terrorista" deittu zeuana pajaro galanta izango zuan bera be ba!!

Kultura trukaketa aittatzen dok horrenbaten eta ideala litzakek. Makiñabat denpora emon juagu geure baztar honetan iñona hartu eta geuria emoten eta txikixak

giñan arren eutsi egin jetsagu gaur arte. Baiña kolonialismo kulturalak indar larregi jakak gaur egun, bendian, nortasuna gorde daigun. "Handixak txikixari zor dio baiña zapaltzen badau zer dio". Entzunda eukiko dok zenbait basarrittatik semeren bat edo beste Arabara bialtzen ebela kastellanua ikasten, baiña euskal senik etxuen galtzen, euskeraz pentsatzen jarraitzen juen. Gaur hizkuntza ofizialtzakua dok euskeria, baiña uste juat eze erderaz pentsau eta bizi dala jende mordoska bat. Karlistaden gaiñian Joseba Tapiak argitaratu daben diskuan karlistak zein liberalak euskeraz jiharduek, bertsotan ez eze, euren arteko harremanetan be.

Ondo goguan dittuk paraje ederrak hik be!! Belaguako goilarrak, zeru urdin gardenak, trumoiaren danbatekuak, izarrez jositako zulo baltza... Zenbatek ete jok maitasunaren bidia aurkitu pagadixen freskuran, edurraren legunian!! Bake billa jo dok Santakruzera, kristautasunak eraldatu parajera eta jentillekin jardun. Eibarrek be bajittuan bere jentillak eta. Gure aittarengandik jaso najuan jentillarena, baiña hurrengo baten kontauko deuat, oin luzeegi joko leukek bestela.

Lekutan dabixaz hire kirikixuak! Aurki hazittarako be ez dok bat bera geratuko. Dagon lekuan agertu egi-

ten dok, kamiñuan autuak zapalduta edo sagastiren baten sagar karriuan. Baiña Eibarren laster ez dok bedarrik be ikusiko. Derrigor jan bihar jakok mendixari zati eder bat han eta hemen, albobidia ebagi nahi dalako autopistia bertan egon arren; etxiak hegixetan jaso biharra kaleko hutsei erreparatu barik; poligono barrixak asmau eta zaharrak gatxetsi... Gure herriko ikur identitarixua dok: paisajiak zementu hutsa eta autoridadiak zerrautsa. Ala solimaua?



Gogorra dok duhintasunari eutsiko bajako, pertsona moduan tratau zaittien, lagunik blastiau ez deixien edo ebaindu dabenari alkartasuna erakusteko, janari opor egin biharra! Norberan tripazorrixak ahaztu eta munduko gosiaz gogoratzen haiz. Etxakixat zelan kabitzen jaan gorpurtz mehe horretan hain bihotz haundixa. Baiña, erregular, danerako emoten jok; kabida itzela dakalako besarkatzen dok maiteñua basarriko berotasunian, amaren bularretik eran umetzaroan, keizpia atzian duala Arrajolara igo, etxeko laratzan usaiñak urrupatu aitta eta amarekin batera. Ama juan zuan eta zilborestiak lotuko zaittue azkenerarte. Aittaren barretxuak aztarrena laga deuk barruan eta hortxe jarraittuko jok haizen arte.

Eskutitzak, bisittak dittuk ausnartu eta harenbaten sublimau kemena emoten deuek eta itsasorako aterik bako kai horretan lihor mingotsa dastatuz bizi ahal izateko. Urriñeko bortuan artzain harek maixuki agertu juan bertsoz bere egoera tristia eta amaren eza hola kantatu:

Maitatuaz sobera
nintzelarik haurra
ez nekien nik zer zen
amaren beharra
bortu batian orai
niz bakar bakarra
amaz oroitz orduko
heldu zaut nigarra

Hobe bortuan bahengo eta ez Puerton, baiña jokuan kartak bihar dan moduan jokatzen bajittuagu, akaso urrin barik, alkar besarkatzeko aukeria izango juagu eta jentillen begiradapian Nafarroa berreraikitzen hasi geinkek geure kasa hartzaren besarkadatik aske.

Ekin biharrari, ondo hoia eta!!!!

***Trunboi***

*1*

## Mundu gaizto batean I

Ehun metrora kanpoko algara,
errepide baterako zapaltzen ari dira lurra
etengabe, gau eta egun, badago aldea,
hesiaren alde batean, eta bestean daudenen artean.
Batzuk soldata baten truke derrigortuta lan egitera,
besteek askatasunaren egarria asetzeko basamortuan,
urdinezko gizonen esanetara, hogeita lau ordutan
menperatuta.

*2000. urteko azaroan*

*2*

## Mundu gaizto batean II

Ehun metrora askatasuna dago, pentsatu dut.
Espetxeko hesiaren beste aldera begiratuta,
soldata baten truke lan egiten dagoen jendea
besterik ez dut ikusi.
Gainera askatasuna ez dago neurtzerik metro
batekin.
Askatasuna egoera bat da, ez errepide bat.

*2000. urteko abenduan*

*3*

## Mundu gaizto batean 3

Txoriek ez dute bereizten, hesiaren alde bataren
eta bestearen artean,
uste baitute hesia atsedenlekua dela.
Eta bertan gelditzen dira begira,
ea nongo aldean dagoen janari gehiago
edo presoen aldean, edota
guardia zibilek etengabe zaintzen duten errepidean.

*2000. urteko abenduan*



*4*

## Mundu gaizto batean IV

“Nire” epaileak gorroto-begiekin ikusten nau.
Zenbat eta gehiago gorrotatu kalea are ikusezinago.

*2001. urteko otsailean*

*5*

## Zalantza I

Zenbat denbora egon beharko naizen ez dakit.
Maitasuna aldatuta egongo ote den irteterakoan
ez dakit.
Herriak horrela nahi duelako irtengo naizen ez
dakit.
Nire betiko lagunek onartuko nauten ez dakit.
Nire txakurra usaimena baliatuz nitaz gogoratuko
den ez dakit.
Ez nuke nahi, irten eta nire ametsak ezin direla
gauzatu ikusi, ez dakit zer egingo nukeen.

*2001. urteko otsailean*

*6*

## Maitasuna espetxean

Espetxean ezin da maitatu, kalean
maita daiteeken bezala,
baina maitasun barik, ezin da
bizi espetxean, eta kalean bai.
Espetxean maitasuna, elkartasuna da,
baita ere adiskidetasuna.
Kalean zaudenean ez dakizu hau horrela denik.

*2001. urteko otsailean*

*7*

**Zalantza II**

Nire mendi ezagunak, nire mendi hurbilenak,
noiz arte egon beharko naiz zuek ikusi barik?
Aldatuko zarete? Zatartuko zaituztete?
Ezagutuko nauzue?
Behartuta egongo naiz urrutira joatera?
Mendirik gabe bizi izatea gogorra da,
gogorrago jakitea ez zaituztela inork gozatzen
hondatuta zaudetelako.
Eibar inguruko mendizaleek gorde itzazue
nire amets ederrak.
Irteterakoan eskertuko dizuet.

*2001. urteko martxoan*

*8*

## Zalantza III

Nire txakurra “Lagun” ez da
nire txakurra, baina neurea izango balitz
bezala maite dut.
Nire neska laguna, “Lagun”en arduraduna
da, nik nire neska laguna maite dut.
Egoera berri honetan ez dakit maite nauen.
Ez dakit “Lagun”ek, nire neska lagunak ez banau
maite, maitatuko nauen.
Eta ni euren maitasunik gabe eta
laguntasunik gabe,
bakarrik, “Lagun” eta maitasun barik
geratuko naiz.

*2001. urteko martxoan*

*9*

## Ilusioa I

Iretargia ikusten dudanean
zugandik hurbilago nago.
Gauza bera egiten ari garelako.
Eta iretargi berbera ikusten dugulako,
neurri eta aro berdinean.
Aldiz, ilunabarra ikusten dudanean
zerbaitek esaten dit,
bostehun kilometrora gaudela
eta harresiak banatzen gaituela.
Noiz helduko dira Karakate
lautadako ilunabarrak?
Ilargia ikusten ari garenean
ortziari galdetuko diogu.
Erantzuna egunsenti batean etorriko da.

*2011. urteko maiatzean*

*10*

## Mundu gaizto batean VI

Mundu txiki batean bizi naiz,
ehun eta berrogei biztanle gara orotara,
hizkuntza guztiak ofizialak dira
herritarren artean,
baina gure zaintzaileek,
gizon urdinek,
bat besterik ez dute onartzen,
menperatzailearen hizkuntza.

*2001. urteko maiatzean*



*11*

## Ilusioa II

Gaur gauean amets polit bat izan dut,
gizon urdinek bat egiten zuten gure artaldearekin.
Eta denok batera urruntzen ginen hesitik kanpora
larre berriak jatera betiko.

*2001. urteko maiatzean*

*12*

## Gure arteko maitasuna

Gure arteko laztanak
eztiak, goxoak eta xaloak dira,
benetakoak.
Gure arteko zirriak
leunak eta gustagarriak dira,
beharrezkoak.
Gure arteko igurtziak
hunkigarriak eta zirraragarriak dira,
ezinbestekoak.
Gure arteko hasperenak
liluragarriak eta zoragarriak dira,
berezkoak.
Gure arteko maitasuna
sutsua eta oparoa baita,
udaberriko maiatza.
Gure arteko harremanak
sendo dirau, osasuntsu,
hautsi ezinezkoa.

*2001. urteko maiatzean*

*13*

## Mundu gaizto batean VI

Gizaki bat ezagutu dut
mugatua, oso mugatua den eremuan
bizi izaten ikasi duena.
Gizarte honen ezaugarriak
nahiko arruntak dira,
harresietatik kanpo ezin dugu irten,
ezin gara oheratu nahi dugunean,
ezin gara ohetik altxatu gorputzak
eskatzen duenean,
bazkaldu, afaldu eta gosaldu
bozgorailuaren arabera egiten dugu.
Gizarte honek antz handia du
kanpokoarekin.
Bai kanpoan eta harresien barruan
artalde bat osatzen dugu
ezberdintasun batekin,
hemen barruan elkartasuna nagusi da,
bozgorailua erabiltzen duen gizon urdinaren
aurrean.

Kanpoan artaldeak sakabanatuta daude
komunikabideen nahiaren arabera.
Batzuek uste dute, jainko berriak direla,
eta kanpoko gure lagun ardi beltzek
herriarteko elkartasunean dagoela
gizartearen oraina eta geroa,
iraganak erakusten duen bezala.

*2001. urteko ekainean*

*14*

## Ilusioa III

Egun bateko zoriontasuna
besterik ez dut eskatzen,
dastatzeko galdutako
askatasunaren gazi-gozoak,
usaintzeko ahaztutako
basoen lurrunak,
ferekatzeko emakumeen
larru leunak,
entzuteko aspaldian
isildutako ahots lagunak,
begiratzeko berriro
nire herri zapaldua.
Egun bateko zoriontasuna
besterik ez dut eskatzen
nire ziegako leihotik.

*2001. urteko ekainean*

*15*
## Ilusioa IV

Askatasuna ertz batean
zain dago,
bidegabekeriaren aldapa igo
eta ezkerretara.
Haran zabal bat da, ederra,
giza eskubideen mendiek
inguratzen dute,
hauen iturburuen errekatxoek
zuzentasunaren aintzira eta
bakearen zelaiak elikatzen dituzte.
Ez dago lehorterik askatasunaren
berdetasunean,
zuzentasuna eta bakea
giza eskubideen orekan,
oparotasunean bizi direlako
egiazko maitaleak bezala.

*2001. urteko uztailean*

*16*

**Zergatik**

Zergatik gure gizartea da hain gorrotagarri?
Nork finkatu zituen garena izateko oinarriak?
Zaratrusta, Platon edo Aristotelesen
iritzietan oinarritu zen Alejandro Handia,
hainbeste herri txikitu eta menperatzeko?
Konfuziogan, Gen-Gis-Kan, beste horrenbeste egiteko?
Zergatik beste bizitza bat egongo dela hil ondoren,
sinisten duten Jesukristo eta Mahomaren jarraitzaileek,
ez dute gozotasun hori, mundu honetan irudikatzen,
utzi beharrean ziurtasun osoz ez dakigun egongo den
beste mundurako?
Jesukristo eta Mahomaren izenean egin dira,
eta egiten ari dira, gizarteak inoiz ezagutu dituen sarraski bortitzenak.

Erromatarrek, inkatarrek, mongoliarrek edo
egiptoarrek
egin zituztenekin alderatuz,
haien basakeriak gainditu ditugu azken mendean,
Noiz oinarrituko dugu bizitza
arrazionaltasunean?
Zergatik oinarritzen dute euren bizitza gizaki batzuek
beste edozein baino gehiago izaten?
Zergatik Francok, Hitlerrek, Mussolinik, Kenedik
edo Stalinek, ez zuten erabili euren indarra,
mundu eroso
eta adiskidetsu bat egiteko, menperatzaile batzuek
izan beharrean?
Jesukristok edo euren pentsaera erlijiosoek
horrela agindu zietelako?
Ez dut uste horrela izan zenik,
eta ez nuke mundu hau horrela izaten jarraitzerik
nahi.
Eskubide guztiak ekinean jarri, gizarteak bizirik
jarrai dezan.
Mundu bakar bat, ekonomia arrazional batean
oinarrituta,
dauden eta izan diren kultura eta sinismen guztiak
babestuta.

Irtenbide bakarra, desager daitezen erailketa,
behartsu
menperatzaile, gose eta abar luzeko hitz ezkorrak.
Eta
gizarte hau izan ez dadin sekula gehiago
gorrotagarri.

*2001. urteko abuztuan*

*17*
**Lagun**



Zakurra deitzen zaituzte
niretzat ostera, “Lagun” zara
adiskide zuri,beltz eta arrea.
Zure oroimena
gogora datorkit sarritan
espetxe mundu honetan.
Karakate eta Irukurutzetan
galapan, jauzika
zabiltzala sentitzen dut.
Akondiako zelaietan
iraulka eta intzirika
jatorrizko grinak bultzaturik,

Arrateko bidezidorretan
urduri gora eta behera
izadia irrikaz arnastuz.
Santakurutzen janaria irensten
buztana eskerronez altxatuz.
Xoxoten eta Endatan
gure lo-kuluxka zelatatzen
zure ezti begiekin
ez dakit berriro
elkarrekin jolastuko dugun.
Hala gertatzea nahi nuke
irabazitako askatasuna
zurekin gozatzeko.

*2001. urteko abuztuan*

*18*

**Arrate**

Mendatearen gainean zaude Arrate,
izadiaren sarrera zara,
itsasora eta mendiei begira
gozamenerako atea.
Mendeetan zehar
sumendi baten ingurune basatia,
orain eibartarren santutegi
eta atsedenleku baitzara,
trikitilarien babesle,
txirrindularien helmuga,euskararen hedatzaile
irratiaren uhinetan,emakumeen izena.
Santutegian Eibarko kristauen
zaindari amultsua aurkitzen da,
irudi xalo eta duina,
zure izenaren jabe egin den Ama.

Sinesgabeok begirunez agurtzen dugu
hiru jauziz igo zen dama,
Azitainetik Arratera
hiru kaperekin dotoretuz
antzinako bidea.
Gurutzean bikotea eskatzeko
aitzakia ematen digu
Anbotoko Mariri so eginez.
Santutegiko sabaian zintzilik
dagoen itsasontzian
jaio ginen.
Irailaren zortzian
zelaian eta pagadian
bizipozez urtzen gara.
Arrate, mendatearen gainean jarraitu
gure izadiaren ate zaindari izaten.

*2001. urteko irailean*

*19*

## Urko, nire mendia

Urko aldapatsua zara,
malkartsuago Sosolatik
Ixuatik baino,
zure tontorra irabaztea
sari gozagarri begientzat.
Eguzkitan ikusgarri zara,
lainotuta berriz ikaragarri,
elurtuta liluragarri.
Zure gailurrean
bi zigilu daude,
zilar koloreko burdinak
zure erpinean
maitasunez iltzaturik.
Urte Berrian zurekin
izaten nuen hitzordua,
zure loreak bustitzeko,
gure preso eta errefuxiatuei
urte zoriontsu bat opatzeko
askatasunaren atarian.

Gaur egun ezinbestean
nire itxaropenaren zigilu
zara,
Urko nire mendi laguna.

*2001. urteko irailean*

*20*

## Mundu gaizto batean VII

Nire ziegako leihoak
orlegiak ditu barra handiak,
gorriak dira gure
eraikuntzen teilatuak,
hormak berriz zuriak,
eta ez nago Euskal Herrian,
zapaltzaileen menpe baino,
Valdemoro deritzoten
eremu gorri eta horixka batean.

*2001. urteko irailean*

*21*

**Eibarko lubakietan**

Akondia eta Kalamua
Aitzketa eta Garagoitxi
beherago Arrate dago.
Lubakien artean txinpartak eta oihu,
metraila eta odola.
Lainopean irudi iheskorrak
babesguneen bila beherantz.
Askatasuna urruntzen dihoa
gudarien urratsekin batera,
irabazleen eta galtzaileen gorpuak
dautzate nahasirik.
Anaien arteko gatazkak
beti dira bortitzak.
Arrate, gorago
Akondia, eta Kalamua,
Aitzketa eta Garagoitxi
galdutako
liskar baten izenak.

*2001. urteko irailean*

*22*
## Mundu gaizto batean VIII

Auzitegi Nazionaleko ziega baten nago.
Haize egokitua, sei metro karratuan,
lur azpian ez dago
leihorik.
Burdinazko atearen ostean
poliziak algaraka.
Nire geroa ez da batere alai
porlanez osaturiko ziega honetan.
Zerbaitek esaten dit
euren alaitasunak
nire atsekabea handituko duela
hiru solairu gorago.

*2001. urteko irailean*

*23*
## Euskara maite zaitut

Euskara maite zaitut,
erabiltzen zaitudanean
nire irudimenaren
gozagarri baitzara.
Euskara laztantzen zaitut,
mingainak leunki
zure ele aberatsa
ahoskatzen duenean.
Euskara ferekatzen zaitut,
orri zuri batean
bolaluma eta arkatzarekin
idazten zaitudanean.
Euskara abesten zaitut,
zure gero baldintzatua
doinuz eta sentimenduz
bideratu ahal izateko.
Euskara behar zaitut,
hainbeste maite nautenei
bihotzeko sentipenak
eztitasunez adierazteko.

Euskara hobetzen zaitut
egunero zurekin gozatuz,
edozein jardunetan
edertzen zaitudanean.
Euskara eskertzen dizut
bereiztu gabe nire jatorri,
sinesmen edo leinu,
zeurea egin nauzulako.
Euskara geurea,
gaurkoa, betikoa,
betirako zara.
Maite zaitut.

*2001. urteko irailean*

*24*

## Mundu gaizto batean IX

Itzulika itzulika
egunari denbora lapurtuz,
burmuina oroitzapenetan galdurik
harresien mugen barruan
burua makurturik,
zeruak ez du erakartasunik.
Itzulika itzulika
askatasunaren bideak
nola berreskuratu asmatzen.
Zaila izaten da
eremu estu hauetan
bakerako zidorrak aurkitzea.

*2001. urteko irailean*

*25*

## Espetxea ilusioz gainditzen

Kartzelazainak burdinazko atea
itxi ondoren,
nire ziega espetxeko
leku aske bat da,
jangela bezala
kide ameslariekin batera
Euskal Herriaz sutsuki
mintzatzen naizenean.
Telefonoa, berriz, alaitasuna,
zure ele leunak
burmuinean lehertzean.
Gutunak zilarrezko orriak,
eztitasunez idatzitako
esaldi gozoak.
Lokutorioak urrezko kaiolak
elkartasunezko mezuak
aditzeko eta ikusteko.

Aurrez-aurreak
grinez eta hitzez betetako
ezinbesteko uneak.
Espetxea muga da,
orainaren baldintzatzailea,
ziurtasun ezaren tokia,
iraganeko zoriontasunaren
estalki itogarria.
Zuei esker herritar
maitagarriak,
geroan jarrita ditut
itxaropenak,
eta gogoa
askatasunera lotuta.

*2001. urteko azaroan*

*26*

**Ilusioa V**

Nire irudimena
hegaldaka hasten denean
aske sentitzen naiz.
Alaitasunaren eta bizipozaren
eremuetara iristean
zoriontsu izaten naiz.
Elkartasunaren eta berdintasunaren
zelaietan gizaki
zentzudun bat naiz.
Bakearen eta zuzentasunaren
itsasoan itxaropenean
murgiltzen naiz.
Kutsadurarik ez dagoen
elur garaietan
garbitasunaren eredua naiz.
Irudimenarekin jolasean
ari naizenean,
ez nago espetxean,
zure besoetan nago,
maitea.

*2001. urteko azaroan*

*27*

**Ego**

Antzinako euskaldunek
gure arbasoek
Ego izena
jarri zizuten.
Erreka xume bat zinen
Deba ibaiaren
ur garbien
isurtzaile atsegina.
Zure erriberan
izadia bizirik
ur lasterraren
garbitasuna gozatuz,
arrainak, karramarroak, igelak
gizakien ikusgarri ziren.
Gaur egun Ego
hodi erraldoi bat zara.
Deba ibaia pozoitzen duen
isuri kutsatzaile bat,
heriotza bideratzen duen
hodi zikin bat zara
Ego gizajoa.

*2001. urteko azaroan*

*28*
**Kunda**

Kilometrotan Urrutira Naraman Dohakabeen
Autobusa.
Gizaki presoak garraiatzeko
xaflazko ibilgailu traketsa,
gizarte honetako gabezien
islada paregabea.
Zoritxarraren bidaia
sakabanaketatik sakabanaketara,
gorrotoa bideratzeko
asmakizun ezin hobea.
Nire bihotzean itsatsita
zaudeten maitatuak
urrutiago aurkitzen zarete,
atzo lehenengo espetxe aldaketa
ezagutu ondoren.

*2001. urteko abenduan*

*29*

## Amaren urtebetetze eguna

Gaur Giza Eskubideen Eguna da,
begiak busti egin zaizkit
nire amarekin hitz egin ondoren.
Zuzentasunik ez dago gizartean,
eskubideak urratzen dira etengabean,
bidegabekeria gorpuzten utzi dugu
etsita nago.
Bizitzaren eskubidea haustea
ez da zilegi,
herriei eskubideak ukatzea
ez da demokratiko,
oparotasunez bizi izateko
eskubideak zapuztea,
tamalgarri,
armak ekoiztea, espetxeak eraikitzea,
errepresioa erabiltzea, harresiak ezartzea,
gose eta gabezia guztiak
ezabatu beharrean,
erokeria.

Banakoen eta herrien eskubideak eraginda
bizitzaren eskubidea bermatzen da.
Bizitza ederra da,
baina ez dago bizitzerik
askatasuna, maitasuna,
zuzentasuna, elkartasuna
eta egia finkatu barik
Gaur nire amaren
urtebetetzea da,
ez diot ezer oparitu,
maitasunezko laztan batzuk
bidali dizkiot
urrutiko espetxetik
giza eskubideen egunean.

*2001. urteko abenduan*

*30*

## Olentzerori espetxetik desirak eskatzen

Gaur Olentzero ez didazu
Eguberria iragarriko,
ez duzu oparirik utziko,
urrutiegi nago horretarako.
Nire irudimenean ikusiko zaitut,
maitekiro moztutako pago egurrekin,
egur-ikatza egiten txondor gainean
izadiaren altxorrak jakinduriaz erabiliz.
Muino batetik datorren txalapartaren hotsekin
abiatuko zara pottokekin batera,
eguzki berriaren albistea zabaltzeko
baserri, haran eta itsasertzeko euskaldunei.
Pozez gainezka ospatuko dute,
eguna gauari nagusitzen hasiko zaiola.
Areago haurrek,
zuk utzitako opariak erabiliz eta gozatuz.
Nik, Olentzero, ez dizut
eremu arrotzetara etortzeko eskatu,
nire opariak izadiko lagunei eskaini.
Nik nire nahi eta desirak,
zure ahalmen paregabeekin gauzatu nahi nituzke.

Oso xumeak baitira,
osasuna eskatzen dizut, zirikadetan ez erori,
bizi dugun gatazka konpontzea,
nire espetxealdiko egunak samurrak izan daitezen.
Gure Olentzero itzul zaitez ikazkin arduretara,
eta hurrengo neguko hasieran, ekar iezaguzu
euskaldunei,
urteetako liskarraren amaiera eskubideetan
oinarriturik,
zuzentasunean erroturik,
askatasunean elikaturik,
elkartasunean indarturik.
Ekar iezaguzu zure basoaren bakea.

*2001. urteko abenduan*

*31*

## Kartzela eta droga

Droga eta kartzela,
ezinbesteko harreman ustela,
gazte ugariren patu petrala.
Gazte drogazale, gaizkile bilakatu zara
gorputza izorratzearen truke,
atsegina oker baliatuta, droga menderatu ezinik,
lau hormen artean zaude menperaturik.
Kartzelazainen begien aurrean
droga saltzen da barra-barra,
metadonaren banaketa iruzurra,
gizarteratzea amets galdua
nagikeriaren eremuan.
Zure lapurretak eta jarrerak aitzakia merkeak
segurantza enpresak gizentzeko,
errepresioan dirua xahutzeko,
gizartean beldur-zentzua garatzeko.
Zure kontsumo suntsikorra,
trafikanteen dirubidea,
kapitalaren mauka,
arma ekoizleen onura,
gastu sozialaren murrizketa.

Gazte altxa zaitez,
garbitu zure odol gaixoa,
irrifarrezko keinu bat luza iezaiozu bizitzari
jakin ezazu duintasunak gabezien amaiera dakarrela.
Droga eta kartzela
puskatu beharreko patua,
gazte ugariren itxaropena pizteko.

*2002. urteko otsailean*

*32*



**Ilusioa VI**

“Bakardadeak oroimena dakar”,
esaten diot ezaguerari ziegako txokotik.
Une horietan iraganeko bizipenek
arrapaladan inguratzen naute.
Komisaldegiko egun gaiztoek inguratzen nautenean,
hango beldurrak eta jipoiak, izua eta hotzikara
   dakarzkidate
izerditan blai utzirik, bortizkeriaren dasta gazira
   hurbilduz.

Herriaren egoera kezkagarriak asaldatzen
   nauenean
gatazka bideratzeko ekinean,
inoiz abian jarri ez diren hautabideak
zehazki marrazten ditut,
bihotzeko taupadak azkartzen zaizkit.
Zentzumenari aholkua luzatuz
senideen saminek eta atsekabeek larritzen nautenean,
negar zotinka, dardarka oheratzen naiz agudo,
loaren aterpean babesteko,
lurrundu dadin horrela sentipen mingotsa
egun berria argitzerakoan.
Maitearen irrifarrak eztiki erakartzen nauenean,
ezinegonak indargabetzen dira,
sentiberatasunari tokia uzteko.
Zirrararen eta gozotasunaren tarte hunkigarria
   eta miresgarria
irekitzen da egunsentiraino.
Ziegako bakardadearen uneek
bizipenen oroitzapenak dakarzkidate,
ametsaren garaian etengabe sortuz
sentipenak burmuinean.

*2002. urteko otsailean*

*33*
**Ilusioa VII**

Filosofoaren helburu eta xede
bizitzaren iturburua bilatzea da.
Nire apaltasunean helburu asko dut gerora begira,
Euskal Herri irmo bat, mundu anitz batean
lotuta askatasunera.
Euskal Herri euskaldun bat,
kultura guztietara arretaz irekita
Euskal Herri herritar bat,
ezberdintasun sozialak ezabatuta utziko dituena.
Euskal Herri orekatu bat,
izadiarekin bat eginik,
kontsumismoaren menpekotasunaren kontra.

*2002. urteko otsailean*

*34*
**Ilusioa VIII**

Inozoek, egoerak hala eskatuta,
apal eta kexu galdetzen ohi diete maltzurrei.

Zergatik armak ekoiztu beharrean ez duzue
gosearen hedapena murrizten munduan?
Zergatik dirua xahutu beharrean etorkinei mugak ixten
ez dituzue elkartasunez zipriztintzen lurralde zorigabeak?
Zergatik globalizazio menperatzailea ezarri beharrean
ez duzue bultzatzen kultur-aniztasuna?
Zergatik herrien arteko anaitasuna indartu beharrean
sortzen dituzue Estatu zanpatzaileak?
Ez dago erantzunik inozoen galderentzat
maltzurrek inozoen kezkak gutxiesten dituzte,
mendeetako zentzugabekeria babesten dute lotsagabeki,
herrien onurarako kaltegarriak diren ekintzak
eta ideologiak garatuz, iraganean bezala orainean.
Eta geroan?
Ez zaitez inozo izan,
galderarik ez egin maltzurrei,
eraiki herrien arteko elkartasuna,
maitasunez eraiki geroa egunero.

*2002. urteko martxoan*

*35*
**Akondia**

Gogoan zaitudanean
zure izadian bizi naiz.
Aldats gora belardi bigunetik, garoak lagun,
nekeak ahazten ditut.
Zure muino leunean ikusmiraren ederraz
lilurak hartzen nau.
Akondia, zure ilunabarrean
lo hartu nahi nuke,
zure egunsentian

ihintzaz esnatzeko zoriontsu
Mariri begira.

*2007ko azaroaren 10ean*

*36*
**Ilusioa IX**

Iragana atzean geratu zait
bere gazi-gozoekin,
baina gozoak niretzat gorde ditut,

Oraina gatibu bizitzen dihardut,
elkartasunaren altzo beroan aterpetuta.
Geroa ilusioz blai dakusat,
askatasunaren maitaleen artean
Euskal Herri berrian.

*2007ko azaroaren 15ean*

*37*

## Maitea I

Zure hutsunea betetzeko
ahaleginik egingo banu,
alai samar biziko nintzateke,
burua eroso sentituko nuke,
baina bihotzak ez luke ulertuko.
Zure malenkoniaz eraikitzen ditut egunak,
iraganeko kontuekin orduak irabazi.
Zure hutsunea
zurekin bete dezaket bakarrik maitea.

*2007ko abenduaren 10ean*

*38*

## Jokatu baldintzak

Mundua gure aberria izango balitz
etorkinik ez legoke.
Izadia gu garela onartuko bagenu,
hondakinik ez legoke.
Kultur-aniztasuna bultzatuko bagenu,
arrazismorik ez legoke.
Ama-Lurra zainduko bagenu
jatorragoak izango ginateke.
Euskara erabiliko bagenu,
euskaldunak izango ginateke.
Herrien arteko elkartasuna indartuko bagenu
aberatsak izango ginateke.
Giza eskubideak ezarriko bagenitu,
zoriontsuak izango ginateke.
Baldintzak jokatuz, Mundua maitatuz
Euskal Herria maitatuko dugu.

*2008ko urtarrilaren 5ean*

*39*

**Maitea II**

Eta baserriko gela hartan
desira aitortu gabea
grinatsu askatu zen.
Egunsentian,
maitasunaren jantziekin
dotoretu baitzen,
gure bizitzak zoragarri uztartu ziren.
Milaka egun, hamaika ilbete,
bizipen, aldarte, ezuste, igaro dira gurean.
Eta espetxeko gela hauetan
aldiro loratzen da gure grina ederra.
Maitasunaren jantziekin mardul dirau,
sagar lurrinez onduta.

*2008ko urtarrilaren 20an*

*40*

**Bihotzean zaudete**

Bihotzean goxo-goxo sentitzen zaituztet
euskaraz dagidanean taupadaka diharduzue,
eguneroko jardunen ardatza baitzarete.
Zuen irriabarra maite nuelako,
gozatuz segitzen duzue mendien lurrinaz,
itsasoaren kresalaz,
erreken gurguriaz,
askatasunaren egunean
zuentzat ospakizunen ohorea.
Gure bihotzetan aterpetuta zaudeten etxekoak,
aspaldiko adiskideak,
ilunabarrean zuekin elkartuko gara
Ama-Lurraren zelaietan
maite gaituztenen bihotz samurretan.

*2008ko otsailaren 1ean*

*41*

**Untzagako lagunei**

Txantxa-zelai aldera begira,
hamarnaka asmo eder zutik Untzagan.
Amets askatzaileen habia,
maitasunaren adierazpen argia,
elkartasunaren islada garbia.
Gure bizipoza zarete
gozotasunez,
zuen esku samurretan batzen garenean
Amnistiaren lerroan.

*2008ko martxoaren 11n*

*42*

**Guraso gaixoekin etxean**

Urkiolak agurtu nau
Anbotok lagundu,
gure sukaldean
betiko usain abegitsua.
Aitxak laztan bat, Amatxok bi zirri,
malkorik gabe baina hunkituta,
maitasun dirdiraz jantzi dira begiak,
aspaldiko ilusioa
eztitasunez mamitu da.
Agurtzerakoan
atseginez entzun ditugu
atariko lagunen mezuak.
Samurki, liluraz,
elkar besarkatu dugu,
gauero bezala urrutiko ziegan
ametsen txokoan.

*2008ko apirilaren 3an*

*43*

## Mendien eta haranen alde

Haitzak erauzi patrikak loditzeko,
mendien hezurdurak birrindu,
haranak bortitzki urratzeko.
Zuen mundua gure mundua da (ere),
baina zuen handinahiak
gure izadia suntsitzen du,
bizitza baldintzatu.
Gure Euskal Herria galzorian dago,
baina udaberriko liliek
kolorez, auzolanean,
porlanaren erreinua
lurperatuko dute.

*2008ko ekainaren 1ean*

*44*

**Aberri Egunean bakarrik**

Aberri eguna mendian,
edo itsasoan, kalean, etxean, atzerrian, espetxean...
ospa dezakezu, baina bizi,
egunero jardunda.
Barrenetik oihu ixil bat dagit,
gure ilusioei dei egiteko,
gure beldurrei ohartarazteko,
badugula behar besteko kemenik
gatazka auzolanean demokratizatzeko.
Espetxean, bakardadean,
baina zuen sentimenduekin bat eginik
Aberri Egunean.

*2008ko ekainaren 15ean*

*45*

## Ibarkurutzeko iturria eta gaztea

Oskarbi jaio da gaurkoan eguna,
Ibarkurutzeko iturria eguzkitan zoragarri deritzo,
aurreko espaloian panfletoak banatzen diharduen
gazteari.
Gustura freskatuko lituzke masail gorriak,
zorrotada ederretan,
baina Arraguetatik datozen herritarrek,
idazkiaren mezuaz jabetzea merezi dute.
Ibarkurutzeko altxorrak gaitasunik balu,
orriaren edukia irakurriko luke.
Gatazkaren konponketa demokratikoarekin
amesten baitu.
Ur gardenaren gurguria dantzu gazteak,
"eman hitza herriari", isuri du,
entzun nahi duenarentzat.
"Zazpiak bat" Euskal Herria maite duenarentzat.
Liluraren liluraz iturria besarkatu du,
Estazio kalean sartu aurretik.

*2008ko ekainaren 15ean*

*46*

## Hasierak gerorik izan dezan

Asier eta Amaia,
behin bakarrik bizi gaitezkeelako.
Kontsumismoan dugu aisialdia itotzen.
Estatu hegemonikoen kultur ikurrak, kirol garaipenak
goraipatzen ditugu.
Hasiera eta Amaiera,
arbasoen ondarea, nortasunaren hazia,
gupidagabe baztertzen baitugu akulturazioan amilduz.
Axularrek, Etxeparek,
horixe bera egin izan balute,
ez legoke Euskal Herririk,
Urkok, Kalamuak, Arratek,
beste deituraren bat izango zuketen.
Kultur aniztasuna,
herrien arteko trukaketa indartu beharrean,
Paris eta Madrili begira bizi gara.
Inguruneari begira biziko bagina,
gure kulturaren geroa bermatzeaz gain,
hasiera izan zuenak,
ez luke amaierarik izango.

*2008ko uztailaren 15ean*

*47*

**Ama oroimeneko mihisean**

Amaren argazkiak laztantzen ditudanean,
haurtzaroko inguruak,
oroimeneko mihisean marraztuta dakuskit.
Arrajola eta Kurutzekua zurekin ezagutu genituen,
"Haize ona osasunarentzat", zenioen.
Umeek dakiten eran,
kerizpea atzetik bizipoza aurretik
aldapan gora hasten ginen.
Goitik genekusan,
Eibarren bazirela txoko gurariak.
Garai ilusiogarriak atzean geratu ziren,
autopistak Kurutzekua galdu zuen,
ohituren aldaketak baztertu Arrajola.
Ziegako bakardadean zure akorduan dihardudanean,
orduko zirrara berpizten zait,
aurkitzen zaren bihotz barrenean.

*2008ko uztailaren 29an*

*48*

## Euskaldunen zerumugan auzolanaren kolorea

Zerumugak belzturaren agerpena iragarri zuen,
armekin hedatu zuten erregeen zaldunek,
indoeuropar ideologia.
Eskubide bihozgabea,
Jaungoiko handiusteak eman omen zien.
Antzinako berdinzaletasuna,
gizarte hierarkizatuak azpiratu baitzuen,
militarren basakeriak bizipoza.
Herri xaloen aberastasuna zentzugabeki ustiatzeko,
kulturak eta hizkuntzak ezabatzeko,
asmatu baitzituzten Konkista eta Inperio hitzak.
Samalda gaiztoen oinordekoek,
"terrorista, guda zale" irain dizkiete,
gatazka demokratizatu nahi dutenei.
Indarkeriaren dasta mingotsa atsegin baitzaie.
Bortizkeria estrukturalak bermatzen duen
   "status quo" gotorra,
gabezien zabortegian datzan egunean,
auzolanaren kolorea zabalduko da berriro,
zital haiek belztu zuten euskaldunen zerumugan.

*2008ko abuztuaren 14an*

*49*
## Pankarta gorria

Arrateko zelaian, pagoen abaroan,
pankarta gorri bat ageri da dilindan,
txorien txioek mezu eder bat goratzen dute
  hostoen babesean.
“terrorista” deitu zidan guda zale batek
pankarta gorria eskegi nuenean.
“Zuen bakeari bortizkeria dario” tinko eta jator
  erantzun nion.
Hertsiki loturik,
presondegi gotor urrun batean sartu ninduten.
Kulunkari darrai pankarta gorriak, pagoek
  mugatzen duten,
belardi berdean.
Txorrotxio sorginduek etengabe diote:
“Presoak kalera Amnistia osoa”.

*2008ko irailaren 15ean*

*50*

**Etorri zara, eskerrik asko**

Etorri zara ezinbestean gero joateko,
begi ederrak, irrifar polita, hitz atseginak,
hemen geratuko dira.
Joan zara, etsipenez utzi nauzu,
samurtasunak bidaiaren nekea arintzen duela
sentituko duzu.
Etorriko zara, laztanak atzamarretan batu direla,
iluntzean pozez oroituko dut.
Joango zara eta itzuliko behin eta berriz,

inongo ez den porlanezko eremura,
maitasun zipriztinez bustitzen den mintzalekura,
elkartasuna lausotu ezin duen, kristal sendoaren
aurrera,
berrogei minutotan ilusioak konpartitzeko,
bi mila kilometrotan gurekin amets egiteko
"Euskal presoak Euskal Herrira".

*2008ko irailaren 23an*

*51*

## Lorategian zuekin

Lorategian ikusi ditut gure kutunen argazkiak,
usain gozoko krabelin gorriekin, betargien
edergarri,
ikurrina eta sua gorazarre.
Ilusioaren islada baitira beren aurpegi lasaiak,
etorkizun oparo baten iragarleak.
Dena eman zioten denok maite dugun askatasunari,
eskubideen demokrazia eraikitzeko ardurei
gaztaroa eskaini.
Horretan dihardugu egunero euren oroimena
omenduz.
Gudari Eguneko hitzorduan,
ohorezko aurreskuaren unean,
Euskal Herria dakusat zuen begirada garbian.

*2008ko urriaren 16an*

*52*

**Atzoko umeari**

Etikaren deiadar ozenak inguratzen nauanean,
buruan ongia besterik ez zuen mutiko hura
   datorkit gogora.
Ume bihozbera pozik bizi zen,
jolas eta irri, lore eta zirri,
bere amets gozoen erdian.
Gerora gizartearen ondoeza,
egitatearen gordintasuna ezagutu baitzuen,
gose eta gerra, diru eta herra,
jauntxo berekoien jardun makurra.
Isur litezkeen malko lazgarrienak zerizkiola
   oheratu baitzen.
Ispiluaren aurrean, aspaldiko mutikoa dakusadanean,
utopiaren beharra sentitzen dut,
Mundu hau izan dadin elkartasunaren etxea,
biharko irrien aterpea.

*2008ko urriaren 16an*

*53*

## Zuretzat gutuna

Zurekin pozik igaroko dut gaurko bazkalostea
hizketan,
kafe bat edango dugu atsegin zaigun tabernan.
Maite nauzulako izan dut Euskal Herrira
etortzeko zoria,
horretarako zirrikiturik, errez aurkitzen du
irudimen joriak.
Ohiko zirrarak inguratu nau,
jaso dudanean kartazal bortxatua.
Une magiko hori ederrago izaten baita,
berba ilusiogarriak eguzkitara irakurriz goxo-goxo,
gutunari darion elkartasun usaina arnastuz.
Bolaluma hartu dut,
alaitasunez bete da ziega,
irrifarrez jantzi mahaitxoa,
atzean uzteko barra handi gorriak, hormatzar grisak,
kaixo idatzi dut adeitasunez,
eta kafearen lurruna ezabatzerakoan,
mirespenez agurtuko zaitut.

*2008ko urriaren 27an*

*54*

## Jaio zara espetxean

Arnasa hartu duzu,
eten dizute zilborrestea,
amaren besoetan bizi zara espetxean.
Hego-haizeak esan digu kontu-kontari,
Ilbeteak lagundu ziola erditzen amari,
negarrez ireki zenizkiola begiak munduari,
bular guriak zenituela gogoz edoski.
Amatxok kantuz alaitzen zaitu
ziegako bakardadean,
loa zaindu Artizarraren babespean.
Zure ondoan aberria gertuago sentitzen baitu,
geroa desiragarri dakusa katerik gabe, lan,
zirri, laztan, algara artean, liluratuta daukazu.
Seaskan zaude guri begira,
barretxoak irudikatuz hunkitu gara,
zure jaiotzarekin bizi berritu baikara.

*2008ko azaroaren 8an*

*55*

## Gure bizitza espetxean

Kaioa kupula gorrian pausatu da,
hegoak astinduz eguzkia gurtu du.
Gangaren tontorrean dakusat zelatan,
itsasoan baino gusturago dagoen hegaztia.
Gure umoreaz, korrikan jarduteko kemenaz
harrituta dagoela baitirudi.
Txolarrea hurbildu da ziegako leihoaren erlaitzera,
musika entzunez gutun bat idazten ari naizela
esan diot.
Denbora igarotzen utzi beharrean,
aprobetxatzen dugula ohartu denean,
hegaldi ikarati batez patiora jaitsi da.
Gaueko hontza eta saguzarra ametsen lekuko baitira.
Ondo dakite zigor guztien gainetik, honek,
gure bizitza jarraitzen duela izaten,
lotan gaudela, geroa ehuntzen ari garela
zuen irri maitagarriekin.

*2008ko azaroaren 22an*

*56*

**Aitxa zurekin betiko**

Espetxetik ekarri ninduten,
txikitan oratzen zenidan bezain samur
hartu nizun eskua.
Begiak ireki zenituen berehala batzeko,
ez ninduzun ezagutu.
Zorionez, atseginez onartu zenizkidan
ferekak eta laztanak,
umoretsu irrifartxo bat marraztu zenuen.
Zure azala leunki ukituz gogora zetozkidan,

Elgetako esnezaleen kamioian sartuta zegoen
haurra,
ezkontzako egunean hain alaitsu sentitu zen
gizona,
laguntzeko beti prest egon den aitxa.
Amaren urtebetetze egunean,
Giza Eskubideen datan hil zara.
Hiletan guztiz hunkituta,
zure gorpua zetzan aldera begiratu dudanean,
gure baitan ezti-ezti, goxo-goxo
amarekin zaudela jakin izan dut.

*2008ko abenduaren 15a*

*57*

## Ziega biluziari

Elurra dihardu,
esku ahurretan atseden hartu duten elur malutek
gogoan ditudala, burdinazko atea ireki dute,
ziega biluziak bakardadearen adierazpen isila
baitirudi.
Morroiloaren hotsa entzun dut, atea itxi didate,
hogeita bat ordu preso gaixoak senti lezakeena
bizitzeko,
espetxea, anker batek asmatu zuela baieztatzeko.
Atearen gainean bi bonbilla, aurrean, zigilatutako
leihoa,
ziegaren erdian ohea, ertz batean komun turkoa,
hormak egurrezko xaflez jantzita,
ehunaka urratsen lekuko itsuak, mutuak,
sorgor, hotz eta hitsak.

*2009ko urtarrilaren 23an*

*58*

**Eremu magikoan**

Espetxealdiaren ajeak eta etsipenak
lo hartzerakoan uxatzen ditut.
Eremu magikoan,
egitateak ukatzen didan goxotasuna jasotzen dut,
eguneroko jardunak burutzeko kemena eskuratu.
Irudiz eta hitzez osatutako toki ilusiogarrian,
gaua lotan igaro baino,
oroitzapenekin gozatuz,
askatasunarekin amestuz bizi naiz,
etxeko eta adiskideen samurtasunaren artean.
Euskal Herrira joateko biderik laburrena baita,
oheratzerakoan barneratzen naizen
liluraren txoko eztia.

*2009ko urtarrilaren 30ean*

*59*

**Maitasunagatik**

Maitasunagatik ekintza ederrenak,
buru-eskaintza handienak gauzatzen dira,
errekak itsasora doan ibaiari bezala,
adiskideak lagundu, etxekoak zaindu.
Maitasunagatik!
Zioen etxarte laiotz estu batean,
etengabe itzulika ziharduan bihotz bakarti goibel batek.
Maitasunagatik! Maitasunagatik!
Zioen ozenki, hotzak bideko ziegetan,
gorputza uzkurtu, makaldu ziolako,
guardia zibilen autobusetan bizitutako ezinegona gogoan zuelako.
Maitasunagatik! Maitasunagatik! Maitasunagatik!,
zioen hunkituta
jasotako laztanak, emandako besarkadak oroituz,
berriro etorriko liratekeela,
sakabanaketaren errepideetatik Euskal Herrira
gurasoak biziko balira.

*2009ko otsailaren 11n*

*60*

## Aurrera segitzeko maitasuna

Aurrera segitzeko kemenik ez dugunean,
ezerezean amiltzen garenean,
etsipenari ateak parez-pare irekitzen dizkiogunean,
"ez dut bizitzeko gogorik", diogu.
Une samin horietan kontzientziaren alde baikorrak,
"begira ezazu ekialderantz,
egunsentiaren distiraldi ederra duzu gozatzeko",
ozenki esaten digu.
Begiak itxi nituen
sakonago sentitzeko atsekabe hutsala,
"hel nazazu eskutik arren!",
erregutu zenidan,
"maitasunari etorkizuna eskainiz,
zoriontasuna ehunduko dugu".
Urrats bat eman genuen ilunpetik urruntzeko,
argirantz hurbiltzeko,
geroaren zain dagoen itxaropenera abiatzeko.

*2009ko otsailaren 27an*

*61*
## **Udaberriaren zain zoru grisean**

Zoru grisa,
bistako adreiluez eraikitako hormek ixten dute,
goiko estalki ikusezina,
eguraldiaren arabera tonu ezberdinez janzten da.
Zeru lauki bat eskaintzen digun kubo honen barruan,
kaioen hegaldien azpian, txolarreen txioen artean,
udaberriaren zain gaude urduri eta artega,
haize bizigarria bularrean sentitzeko,
loreen lurrina sakonki arnasteko,
egunsentiko ihintzarekin larrua garbitzeko.
Euskal Herria, zure askatasunaren zain baikaude,
zugana, kumeak hazteko,
etorkizunean joango diren enarak bezala,
gure habiara bizipozez itzultzeko.

*2009ko martxoaren 10ean*

*62*

## Damuketa eta aldaketa

Ordu txikietan ixten duten azken tabernan
   gertatu zen,
mozkorraren aitzakiaz ipurdiko lotsagarri bat
   eman nion,
amama, ama edo Irati izan zitekeen emakume bati.
Ajearekin batera lotsa sentitu nuen biharamunean,
ezin dut ordutik orban hori garbitu gogotik.
"Damuaz erresuminduta bizi baino,
jarrera patriarkalak bazter itzazu,
ama errespeta ezazu,
etxeko-lanak konpartitu,
neska-laguna eta zu, bilaka zaitezte elkarren-lagun.
Emakumeen eta gizonen arteko auzolana,
   berdintasuna,
bultzatuko zenituzke horrela",
xuxurlatu dit kontzientziak.
Eguerdian gertatu da,
Arrateko zelaian ikusi dut,
salda bat eskaini diot barkamena eskatu,
irrifar zabal polit bateaz onartu ditu,
aurpegia pozez gorritu zait, gogoa lasaitu.

*2009ko martxoaren 18an*

*63*

**Garai alaiak**

Garagoitxi mendiko oinaren belardian,
orduko pinudiaren kerizpe ederrean,
karratu alaiez apaindutako zamaua,
zabaltzen genuen han inguruan.
Bertan esertzen ginen etxekoak pozik,
garoaren urrinak gozatutako jakiak bazkaltzeko,
kirol elkarteak Usartzako bidean eraikitako
iturriko ura gogoz edateko.
Gure bizipozaren lekuko baitziren alboko lubakiak,
Kalamuako aldapatik guri so zeuden,
aterpeko hondakinak eta
historiaurreko arbasoek utzitako trikuharri galantak.
Haurrok handik gutxira baloiarekin jolastuz,
txantxak asmatuz, izadiaren lo-kuluxka urratzen
genuen.
Nagusiek tximeleten hegaldi koloretsuak lagunduta,
kamamila usaintsua eta satorren lur tontorra
batzen zituzten.
Poliki-poliki etxerako bidean uzten genituen atzean,
txirtxilen txirtxir aspertuak,
txorien txorrotxio biziak,
ardien balaka errukarriak.

Udako aisialdi zoragarrietan,
euskaraz mate gintuzten garaian,
maitemindu nintzen zutaz bete-betean,
zeure egin nauzu euskara geroztikan.

*2009ko martxoaren 24an*

*64*
**“Korrika” kalean eta espetxean**

Bi mila eta bederatzigarren urtean,
udaberriko bigarren astelehenean,
hain zuzen goizeko hamarretan,
arituko naiz ziztu bizian,
hogeita hamabost metro luze-zabaleko patioan.
Korrika zurekin bat egin nahi nuke gaur goizean,
zure lekukoaren atzetik jardun antxintxiketan
euskararen alde Eibarko kaleetan,
bizipozez oihukatu zirrararen bidean.
Hankak gogor astinduz eztarrian gozatuz
   euskarazko leloak,
trumilka dator Bidebarrietatik behera,
hizkuntz gaixoaren lagunak,
tailatutako egur apala

eskuz-esku darabilte beti aurrera eibartarrek.
Bihotzak punpaka alaitu ditu liluraren orduak,
oinek, arin, leun, hegan egin dute
porlan latzaren gainean,
birikok hauspotu aspaldian erabili gabeko kemena.
Hemen barruan kartzelan
eta Euskal Herriko karriketan,
euskaltzaleok gabiltza korrikan
ele zaharraren onuran,
mingainek pozez darabilte dantzan
euskara ederra ezpain gorrietan.

*2009ko martxoaren 31n*

*65*

**Amnistiaren zubia**

"Gauekoak berehala gordeko dira euren habietan",
pentsatu dut egunsentiko sirena hotsa entzun
dudanean.
Aurrean dauden ziegei begira,
kide maiteengana joan zait gogoa,
irria aurpegian agurtuko naute
pozez erakutsiz herrirako bidea.
Azken besarkadekin atetzarra igarotzeko unea
iritsiko da,
hormen barruan milaka bizipen utzi ditudala
igarriko baitut,
baina lagunen maitasun kutuna nirekin etorriko
baita,
bere buruaren jabe ez den aberrira.
Irrikaz baitaude zain kanpoan altxor laztanak,
hamabi ordu barru eskura izango ditut mendiak
eta haranak,
hamaika urtetan halabeharrez utzitako txoko
gurariak.

Ongi-etorrian ohore eta laudorio,
ahotsa hunkituta dut goratuko.
"Bihotzak elkartuz zanpaketa gainditzuz,
gure presoek ibiliko duten amnistiaren zubia
jasoko dugu.
Kantauriko kresala arnastuz,
udaberriko liliak usainduz,
Aturri eta Ebro ibai ederretara
alai eta kantari iritsiko da,
aspaldi amestutako biharko Euskal Herria".

*2009ko apirilaren 9an*

*66*

## Denok euskal herritarrak

Maleta astun batekin
atezuan zeunden
autobusen geltokian
ingurua aztertzen,
gabeziak bultzatuta
beharrak estututa,
zure herrialdetik at
alde egin duzu bart.



Gure arbasoek atzo
egin zuten antzera,
lan galdezka etorrita
zarelako gurera,
bizitza ustez oparo
eta hobeago bat
edukitzeko irrikaz
etorkin deitu zaitut.

Lagun, herritarra pozez
nahi nizuke deitu,
hango Ama-Lurraren
kulturaz galdetu,

izaerak, koloreak,
formak, ezagutu,
herriko kanta alaiak
tabernan abestu.

Gaurtik aberkide, maitez,
nahi nizuke deitu,
zurekin euskal mosaiko
anitza osatu,
kultur-artekotasuna
nahi nuke bultzatu,
gau eta egun kalean
aberria ondu.

Bai, euskalduna bihotzez
nahi nizuke deitu,
elkarrekin hitz eginez
euskara bizkortu,
abegikortasun osoz
etxeaz gozatu,
ekinean Euskal Herri
berria eratu.

*2009ko apirilaren 15ean*

*67*

**Mende erdi**

Mende erdi utzi dut atzean,
haur baten ikuspegitik
urrutiko helmuga lauso bat,
urri ikusita bertatik,
ekinaldi bat, heriotzara
naramana jaiotzatik,
Guraso maitekorrei esker,
ezerezetik sortzera
igaro nintzen negar batean,
izatetik "Lur" xalora
igaroko naiz noizbait, jarraituz
izadiaren legea.

Mende erdi bizi izan baitut,
onura eta tristura,
hamaika bizipenez bete da
ganbara zabal sakona,
gehienak subkontzientean daude
irteteko zain kanpora.
Kontziente argian erne, adi,
gaiztoak eta ederrak,
amesgaiztoetan ilunenak

agertzen zaizkit, okerrak,
bizipozaren iturburuak
baitira distiratsuak.

Mende erdi hazi eta hazi,
herri zahar bat pizteko,
zut segi beharra dagoela
lanean baieztatzeko,
itxaropenak beti mamituz
jendartea askatzeko.
Banakoak hilko gara, baina
Euskal Herriak bizirik
iraungo du mendez mende,
belaunaldiz-belaunaldi,
haranetan euskara geurea
mendietan zeu irrintzi.

*2009ko apirilaren 21ean*

*68*
## Urtebetetze egun bat

Udaberriak zoriondu nau
ohi duenez maiatzean,
txolarreen txio ederrekin
egunsenti argitsuan,
mezu bera entzungo dut gero
etxera deitzerakoan,
laztanduko naute joan direnak
maitasunez bihotzean.



Mahaien inguruan bildu gara
patioko atalasean,
hamaiketako bat prestatzeko
apal, alaitasunean,
urtebetetzea ospatzeko
herriminaren altzoan,
ahaztuz une mingots guztiak
umorearen onuran.

Gure hitzen hizpide zarete
herrian zain zaudetenak,
hango kaleetako txokoa
izadiaren bazterrak.

Begietan isladatu dira
iraganeko zirrarak,
kartsuki aipatu direnean
aberriaren kontuak.

Dagoeneko urte dezente
gatibu bete baititut,
bertan urtebetetze ugari
bizi izan ditut gertu,
Euskal Herri zaharrak antzera
askatasun barik estu,
geroari pozez so eginez
itxaropenez mukuru.

*2009ko maiatzaren 19an*

*69*

**Gure artzaintsari**

Zumeta baserriko zelaian
zaintzen zuen artaldea
neskato polit eta xaloak
ohiko pagoan igota.
Eta adarretatik alaiki
hitz egiten zien beti
belarra bazkatzen ziharduten
ardi balakariei,
kantatzen zien pozik, eztiki
bere bildots samurrei.
Elgoibarko herrian dagoen
San Migeleko bailaran
gure amaren bihotz onbera
puztu baitzen urte hartan.

Parkinson gaitzak, ele guria,
poliki ahuldu zuen,
bizimodua zurrundu oso,
autonomia urritu,
zorionez maitasun kartsuak
eria gozatu zizun.

Urte bat igaro da gugandik
joan zinenetik bihotza,
dirdai zaude oroitzapenetan
aitxaren ondoan goxo.
Joan zara, baina hemen diraute
zure irri maitekorrak
bizitutako une ederrak
aholku garrantzitsuak.

Kartzelak ez zidan utzi zutaz
maitekiro arduratzen,
laguntzerik ezin izan nuen
nitaz erditu zen ama.
Bizitza eman zenidalako
maite zintudan umetan,
gaztetan eta helduaroan,
egun txar eta onetan.
Orain areago maite zaitut
artzaintsatxo zaindaria,
zure maitasuna jasotzeko
beharra daukat laztana
ametsetan dakusadanean
zure irudi liraina.

*2009ko apirilaren 30ean*

*70*

**Gogoan zaude maitea**

Gogoan agertzen zaizunean
maite duzun kutun hori,
gainerako kontuek ez dute
ia batere garrantzirik,
irudi min horrek betetzen du
ziega guztia samurki.

Elkar ikusi genuenean
lotsaz agurtu zintudan,
begi alaiek une berean
oro txoratu ninduten,
gerora ehundu baikenuen
bizitza gure artean.

Azken urteetan patu gaitzak
banandu gaitu gogorki,
egunero sentitzen dudana
nahi nizuke adierazi,
hemen barruko ordu guztiak
zuri osorik eskaini.

Gutunak berba ederrekin
laztanez osatzen ditut,
ibilaldi gurarienak
azkar atontzen dizkizut,
batera, eskutik oratuta
geroan goza ditzagun.

Endata ikusgarria baita
areago biok bertan
atsegin gozoan geundenean,
horrela gaude ametsa
gatibu naukaten deserrian
gaueko ezti liluran.

Liliak dotore hazi eta
usain ona emateko,
lur abegikorraren babesa
jaso duen adineko,
behar zaitut pinpirin xaloa
zoriontsu bizitzeko.

*2009ko maiatzaren 11n*

*71*
## Bizipen net gazi-gozo bat

Argia hazten hasi zenean
urduritu egin nintzen,
geroago gertatuko zena
gogoan sentitu nuen.
Zure etorrera pozgarriak
guztiz lasaitu ninduen,
herriko kontuekin denbora
gozoro eman genuen.
Ederrak gutxi irauten baitu
atea ireki zuten,
laztan bat eman nizun samurki,
gorazarre eta omen.

"Biluztu zaitez", agindu zidan
kartzelazain setatsuak,
ezabatuz brastada batean
aurrez aurrearen pozak.
Tunika uzteko galde nion,
eranzteko jantzi denak,
berehala igoko nituen
zigorraren eskailerak.

Isolamendu beltzean kendu
zizkidaten galtzazpiak,
eltxoen menpe etsita, goibel
jaso baininduen gauak.

Bizi-baldintzak okertu zaizkit
tinko jokatzeagatik,
urritu dizkidate oro har
eskubideak geroztik.
Hurrengo egunak amestuz
atsekabea joan zait,
hemen izango zara berriro
elkartuko naiz zurekin.
Irrifarrak distiratsu dirau
zulo honetan biribil,
beti bezain argi eta polit
zuri eskaintzeko dir-dir.

*2009ko maiatzaren 28an*

*72*

**Euskal Jaixa Eibarren**

Galdaraminok txistua jaso,
Urkok atabala jo du,
dultzainen doinu alai biziak
herria dute esnatu.
Goiko bi mendien erpinetan
irrintzia dabil prestu,
gaurkoan Untzagara dituzte
begi zoliak zuzendu.



Mataza koloretsu aparta,
aztarna eta lekuko,
ezin besteko hari muturra
euskalgintza ehuntzeko,
herritarren arteko sarea,
sendo, trinko, gorpuzteko,
jantzi egokia zazpiak bat
ederrera hurbiltzeko.

Maiatzean Euskal Jaixa Eibarren
elkarrekin gozatzeko,
kalejira internazionala
besteena ikasteko,

hartu-emanak trukatuz
geurea aberasteko,
lau haizetara “Kezka” zabalduz
elkartasuna pizteko.

Kantu afarian laket ziren
dantzarien eztarriak,
Urkusuako iturri onberak
lurrundu ditu ajeak,
abarken urratsak hartu dute
Arraguetako aldapa,
borobiltzeko pozez Untzagan
aurtengo egitaraua.

Larrain dantzekin azken txanpara
denen bihotzak puzteko,
Eibarko mendi-zerurantz jator,
zapiak erakusteko,
datorren urtekoa berriro
maitasunez prestatzeko,
euskaldunen hazi oparoa
dantzan artez ereiteko.

*2009ko ekainaren 5ean*

*73*

**Zeinuen maitasuna**

Zeinuen mintzaira erabili
zenuen ilusioz blai,
eztarria gauzatzeko gai den
hotsak baliatuz ezti.
Zure eskuak leuntasunez
zenituen dantzan jarri,
gerri-okotzaren bitartean
ederki eta xaloki,
ahoa, begi eta bekainen
keinuekin lagundurik.



Nigana etorri zinen alai
joan berriz goibel, poliki.
Ez nuen zurekiko azaldu
giza sentikortasunik.
Dena burutu ziztu bizian
eta eroapen barik,
nahi duen gizarte hits honetan
bizi naizelako morroi,
ezin esan zenidan ganoraz
ia ezer adierazi.

Ez bainuen ulertu tamalez,
gorreriak bereziki,
ez dizula inoiz jendartean
harremanak galarazi,
berritsuen aurreiritzia
izan dela beti hesi.
Barka nazazu axolagabe
jator ez hartzeagatik,
eskuzabal jardun beharrean
berekoi izanagatik.

Bizitzan ez dugu ibiltzerik
baztertuz gure mutuak.
Ez dira bakarrik eztarritik
eraikitzen esaldiak,
are ederragoak baitira
bihotzez sortutakoak,
patxadaz, herritarren soinua,
zuzen ehuntzen dutenak,
maitasunez zure eskuekin
samur irudikatuak.

*2009ko ekainaren 19an*

*74*

**Dultzaineroa**

“Trenez zetozkigun garai hartan
Lizarratik Eibarrera
dultzaineroak prestu eta fin
Sanjuanak iragartzera,
tamalez diruaren morrontzak
elkarbide apal hura,
kotxe kutsakorren mesedetan
eten zuen bat batean”,
esan du brontzezko irudiak
zapia jartzerakoan.

Dultzaineroarekin bilduta
Lizarrako ahaideak,
erlojuetan gertu baitaude
eguerdiko ordu batak.
Goibel eman du urte guztia
gizon zurrun dotoreak,
ezin gozatuz dultzainen eta
atabalaren doinuak.
Estazio kalean hasiko
dira gozoro Sanjuanak.

Zoriontasunez zorabiatu da
atabala aditzean,
herritarren algarak eskertuz
murgildu da jai alaian.
Argazkien helburua baita
anai-arreben ondoan,
kotxeen keetatik urruti
ez da itoko tartean,
haurren zirrara sentitu baitu,
poztasunen usainean.

Hasi da kalejira ederra,
aurretik dultzaineroak,
atzetik darraizkie zintzo,
alkatea, auzotarrak,
eta Eibarko euskal presoak
beren eskakizunekin.
Espaloietan txaloka zeuden
zahar zein gazte jatorrak,
Untzagarantz doaz umorez blai
entzunez soinu biziak.

Sanjuanak joan baitira beretzat,
unerik atseginena,
desiragarriena, aurrerantz
doa ibaiaren antzera.
Sustraituta dagoen ohitura
berriz biziko duela,
agindu diote irmo, zinez,
ukituz leun txapela.
Bertan geratu da zutik, lasai,
brontzezko dultzaineroa.

*2009ko ekainaren 19an*



*75*

## Argazkiak enparantzetan

Argazkiak erauzi,
izana ukatu.
Aurpegiak estali,
irria lapurtu.
Irudiak itzali,
kaleak lausotu.
Espetxeak urruti,
bihotza zigortu.

Bisitak eragotzi,
gogoa goibeldu.
Laguntzak galarazi
jarduna urritu.
Oroimena jazarri
gatazka luzatu.

Amnistiarekin geratu naiz
itxaropenen tokian,
elkartasunaren enparantzan
ilusioen lerroan.
Gaur tamalez ertzainak borrekin
agertu dira aurrean,
anai-arreben txartel duinak
eramateko asmotan.
Senideen arrazoiak galdu
egin baitu azkenean,
agintari sasi-demokratak
iaioak baitira bortxan.

Gure baitan darraite kutunak
ondo dakiten moduan,
etorriko dira hurrengoan
azken urteetako eran,
ez ditugu sekula gordeko

ez bada ezti gogoan,
presoak ezin dira baztertu
betiko utzi zuloan.
Eraman itzazu jator, pozez,
paparrean bihotzean,
amnistiaren zapia ehun
dezagun ziztu bizian.

Argazkiak ipini,
izena sendotu.
Aurpegiak ageri,
bazterrak argitu.

Irudiak ibili,
herria esnatu.
Euskarria eskaini,
nekea arindu.
Elkartasuna hazi,
irrifarra piztu.
Senideekin bizi,
kinkea bizitu.
Amnistia eraiki,
gatazka konpondu.

*2009ko ekainaren 25ean*

*76*

## **Gosez nago**

Kide bat jipoitu dutelako
gosez nago espetxean,
gertuko bidegabekeriak
jartzen zaitu ekinean.
Giharrak erabat motelduta
jateko grina gogoan,
bizipoza urrituz joan baitzait
pisua galdutakoan,
gabezia zer den ikasi dut
baraua egindakoan.

Jakitun bainaiz sasoia laster
eskuratuko dudala,
tamalez jende ugari dago
jan ezinik dabilena,
jaiotzatik gosearen mende
uzkurtuta bizi dena,
gure munduak murriztu die,
tak, bizi itxaropena,
kontuan eduki barik Ama,
denon habia baitela.

Afrikako larrainak labore
bakarrez erein ditugu,
Asiako ganbara oparoak
berekoitasunez hustu,
Amerikako oihan hezeak
gupidagabe suntsitu.
Elikatzen ez diren herriak,
zerbait jan dute helburu,
beren borroka bakarra baita
sabela ongi asetu.

Zentzuz kontsumituko bagenu,

argi leudeke buruak,
bihotzak eskertuko liguke,
jango luke gosetiak,
kemenez galdeko lizkioke
handi-mandiari lurrak,
iruzurrez, bortxaz, mendeetan
bildutako ondasunak.
Elika dezagun kontzientzia
iraun dezan utopiak.

*2009ko uztailaren 2an*

*77*
## Postalari esker oporretan

Eguerdian iritsi da posta
patxadaz zaude Izaban.
Belagua oso ederra dago,
esan baitut segituan.
“Gaur zuretzat amets bat dirudi
baina zain duzu geroan”,
irakurri dut alaitasunez
eskaintza atzealdean.
Sendo puztu zait ilusioa
dantzan dabilkit barnean.

Patio zatarraren gainazala
kiskali du eguzkiak,
espetxean ez dago oporrik
urruti daude mendiak.
Irudimena kitzikatu dit
menturaz zeure arretak,
gertu naukazu gurutzatzeko
zirrararen lurraldeak,
zurekin batera gozatzeko
udako txango apartak.

Jasotako postalari esker
hurbil dakuskit pagoak,
begi zoliek gorde dituzten
ilunabar atseginak,
oinek plisti-plasta pozgarrian
ibilitako errekak,
Lakorako tontor ixiletik
miretsitako haranak.
Oroimenean agertu zaizkit
orduko tanta eztiak.

Onura dakarkidazulako
ziegako pareta hitsak,
izadiaren koloreekin
dotore daude jantziak,
elkartasunak baretu dizkit
hemengo atsekabeak,
askatasunaren oihartzunak
bizitu egunsentiak,
Belaguan zenbatuko ditugu
katerik gabe izarrak.

*2009ko uztailaren 7an*

*78*

**Zezenaren entzierroa**

Sanferminetan liluratuta
dakuskigu entzierroak,
tamalez ez du hori sentitzen
karrika estuetan zezenak,
urdurituta pairatzen ditu
inguratuta jendetzak,
lauazkan doa zezen-plazarantz
jasan ezinda zaratak.

Erdeinuen erdigunea da
dituelako zauritu,
morrosko ausarten larru finak,
praka zuriak gorritu.
Adimenik gabe ezin baitu
zioa desenkusatu,
odol guztia isuri arte
ankerki dute sastatu.

Zezena behartua baitabil
multzoaren anabasan,
bere defentsa bideratzen du
berezko adarkadetan.

Guk aldiz mutur beltzetik hurbil
hor dihardugu korrikan,
sarritan jartzen dugu bizitza
arriskuan alferretan.

Errurik ez du zezen gorrixkak
beti galtzen du arnasa,
bakean bizi zenari otoi
ez iezaiozu lepora,
zezenketan irabazpideak
baitauka baitan hobena,
maltzurkeriaz dirutu dira
zezenen minen kontura.



Eremu zabaletan zezenak
ederto dabiltza trostan,
eztitasuna agortzen zaie
kamioi baten barruan,
“Capuchino” eta “Ermitaño”
lasai zeuden barrutian,
gupidagabe hil dituzte
jaiaren hiriburuan.

*2009ko uztailaren 14an*

*79*

## *Tour de France* Pirinioetan

Zoragarri ikusiko dira
aberriaren ikurrak,
eguzkitara diz-diz edertuz
Tourmaleteko bazterrak.
Telebista irrikaz piztu dut,
sakon hartu nau zirrarak,
bertan daude urtero bezala
euskal presoen banderak,
gogotsu txalokatzen baititu
jendeak ziklista finak.

Euskara bezain ongi uztartzen
baita Pirinioetan,
laranja kolorearen saltsa
harkaitz eta zelaietan.
Antzinako artzainek kantuan
jardun ohi zuten artzaintzan,
txirrindulariak ezinean
purrustaka aldapetan,
euskaldunek aupatzen dituzte
algaraka jai giroan.

Drogen aferekin zulatuta
dago gurpila zoruan,
diruak utzi baitu ankerki
kirola amildegian.
Zaletuek goratzen baitute
*Tour de France* errepidean,
parte hartzearen gozamena
jarrita aurrealdean,
irabazpide ilunen zama
geratuko da atzean.

Txirrindulariak badatoz bai
banan-banan helmugara,
badoaz arin ikuskizuna,
magia eta lilura,
bizi izan dudana eraman
du, tak, gogoak kolkora.
Itzuliko dira euskotarrak
ikurrinekin mendira,
alaitzeko espetxean gauden
anai-arreben ganbara.

*2009ko uztailaren 22an*

*80*

**Bihotz oneko artista bati**

Eguna argitu du
bare eta garbi,
lurra epela dago
onbera Eguzki!
Bihotzak eskertu du
kantuan eztiki,
zuhaitzen kerizpean
eseri naiz lasai,
kometa bat baitabil
zeruan alderrai,
hegaztiak gorago
kulunka ederki,
gogoak aske darrai
espetxetik deslai.

Ametsak utzi ditut
samurki ohean,
zu berriz miresteko
maiteen alboan,
laztanduko baitzaitut
euren izenean,
zintzilik polit zaude
dir-dir panelean.

Hiru zuhaitz lautadan
uso bat airean,
eguzkia parean,
kometa bat hegan,
agian hegazkin bat
zerurantz abian.

Kartoi mehe bat duzu
niretzat margotu,
bakardade iluna
alaitu didazu,
zuritasuna jantzi
txokoa bizitu,
ziega txiki estua
erabat handitu.
Kolore xaloekin
zoriondu nauzu,
atsegina eskaini,
bizipoza puztu,
barrerik jatorrena
aurpegian piztu.

Kide batek esan dit,
utzi dut geroko,
patioan mamitu
ziegan idazteko,
marrazki ondoan
hitzak ekartzeko,
olerki bat ehundu
zeuri eskertzeko,
sentitu dudan poza
apal azaltzeko,
adiskidetasuna
goxo goratzeko,
biharko besarkada
gaur aurreratzeko.

*2009ko abuztuaren 4an*

*81*

## Gorbeia iraindu dute

“Gorbeia mendiko gorenean
gurutze maite bat dago”,
kantatzen genuen gazteleraz
diktadura ahazteko.
Gorbeiako gurutze ederra
mendizaleen begiko,
askatasunen ikur bat baita
itxaropenen lekuko.



Patxi zaharrak maite zituen
monarken piper-potoak,
lotu ditu txarki gurutzean
bakezaleen armadak,
Espainiaren batasuna zaintzen
duen talde militarrak,
iraindu ditu oso baldarki
gure mendien bihotzak.

Ohorea garbitzeko, azkar
baitituzte botak jantzi,
udaletan bandera arrotza
otzan dutenek eskegi.

Aberriaren eraikuntzari
mugak dizkionak jarri,
ezin dio mendi maiteari
omenaldirik eskaini.

Mendiak izan dira Mariren
txokotxo gurarienak,
mazeletan sustraitu baitziren
antzinako euskal hitzak,
goitik babesten ohi genituen
irmo beheko haranak,
utz ditzala tontorrak bakean
inperialismo doilorrak.

Paris eta Madril hemendik at
joango diren egunean,
irrintzia garbi entzungo da
euskaldunen mendietan,
sutargia ikusiko dugu
Gorbeiako gailurrean,
herri lagun bat izango dute
Aitorren lurraldeetan.

*2009ko uztailaren 29an*

*82*

**“Krisi” hitzaren kontra**

“Krisi” hitzarekin esnatu naiz
gaur erabat aspertuta,
eguneroko matraka horrek
nauka guztiz nazkatuta,
behar duguna baino gehiago
etxean zokoratuta,
“merkantilismoaren morroiak
gara”, diot kezkatuta.



Norberekeria harrotuta
dabil gure hirietan,
lasaiki dabiltza aspaldian
handikiak bankuetan,
gurpil horretan sartu baikara
aberatsen mesedetan,
ingurugiroa izorratuz
jendartearen kaltetan.

Porlana ekoizten da harrika
patrikak emendatzeko,
beharrak asmatzen dizkigute
gure kontura hazteko,

etekina lehenesten dute
handinahia asetzeko,
krisia ongi baitatorkie
dirua erruz biltzeko.

“Urte guztian lan egin nahi dut”,
hausnartu baitut soseguz,
langabezia kanporatzeko
gabeziak lurperatuz,
jan, edan eta lo neurrian
duintasuna goratuz,
eduki, izan, onak baitira
zuk eta nik konpartituz.

Kontsumi dezagun zentzu osoz
mundu hobe baten alde,
eta ez osasunaren kontra,
soraio, axolagabe,
auzolana hedatuko dugu,
gurdiak belarrez bete,
haurrek ikus dezaten Ama-Lur
emankor eta dotore.

*2009ko abuztuaren 13an*

*83*

**Kartzelan ez dago aberririk**

Espetxeak ez du aberririk,
errotu da zigorrean,
gorrotoa eroso baitabil
mendekuaren zoruan.
Horma gotorrak ez du bihotzik,
goibel zaude bere baitan,
ilusioen hesia baita
askatasunaren mugan.



Euskalduntasuna ezin duzu
ongi zaindu deserrian,
bizi eta gozatu alaiki
aske zaudenean eran,
kulturaren arlo ezberdinak
murriztuta kontrolpean,
burua geratzen da sarritan
galduta ezerezean.

Nortasunari sendo eusteko
darabiltza oroimenak,
olerkarien ahapaldiak,
abeslarien kantuak,
lagunen gutun hunkigarriak,
etxekoen irrifarrak,
ziegako bakardadean dauzka
gordeta euskal presoak.

Neure aberria ez dago
porlanaren eremuan,
hari berdea eten ez dadin
bildu bainaiz aterpean,
zugana jator eta leialki
joateko egun handian,
euskaraz maitatzen den herria
oro baitzaitut gogoan.

*2009ko abuztuaren 20an*

*84*

**Arrateko txosnari**

Hemen daude prest kide zintzoak
txosna hau garraiatzeko,
Arrateko pagoen artean
maisuki eraikitzeko,
bizipozez lan egingo dugu
jantokia prestatzeko,
auzolanean guztia gauza
daitekeela frogatzeko.



Hodi hori kurbatuak zutik
plastikoa zabaltzeko,
alanbre, harri, hodi estuak
egitura sendotzeko,
txosna-negutegia apaindu
arrakasta handitzeko,
edariak eta janariak,
jai-zaleak asetzeko.

Irailak zortzi, Arraten pozik,
txistua, bertsoak gero,
zelaian txosnak jaia girotuz,
sagardoa, salda bero,

pagoetan hostoak kulunka
euskal musika gozoro,
erromeria hasi da ezti
iluntzean dantza zoro.

Etorkizunaren alde gaude
txosnan musu-truk lanean,
zapalkuntza oro gainditzeko
zazpi euskal herrietan,
marmitakoa maitez prestatzen
izerditan sukaldean,
joan zaigu gogoa euregana
behar ditugu etxean.

Jai algarak isiltzerakoan
txosna kentzeko unea,
gorde ondoren ongi afaldu
atzean utziz nekea,
topa esanez abiatu da
mezu alaien tartea,
Arraten ospatuko baitugu
amnistiaren urtea.

*2009ko abuztuaren 26an*

*85*

**Irati oparo orain eta beti**

Iratiko oihana oparo
Orhi zut ekialdean,
jentilek izadia baitzuten
kokatu erdigunean,
mitoak harilkatu zituzten
euren irudimenean,
ezagutu zuten Ama-Lurrak
segi zezan ederrean.
Kristau hierarkiak gizakia

jarri zuen gorenean,
aberatsak oinarritu dira
aitzakia txit merkean,
mundua ustiatzen dabiltza
diruaren izenean.

Hiriburuak dotore daude
baserriak galzorian,
mendiak baliatzen dituzte
asmo ilunen onuran,
euskal hiria hobetsi dute
euskal herrien kaltetan.
Lur maitea gizakirik gabe

bare zegoen antzinan,
gure jendarteak utzi baitu
makal azken mendeetan,
izadiak luze iraungo du
eguzkiaren azpian,
gizakia aldatu ezean
itzaliko da geroan.

Arbasoen ondarea jaso
gurekin bizi daitezen,
itsas-lamiak izurdeekin
olatuetan jolasten,
Basajaun, lamiak, basoetan
Mari leizean pozarren.
Berdinzaletasuna garatu
beharko genuke hemen,
jauntxoen asmoak uxatzeko
ahalik eta lasterren,
jentil duinen eguzki-loreak
lagun diezagula arren!
Iratin ortzadarra baitabil
pagoak xalo alaitzen.

*2009ko irailaren 2an*

*86*

**Iraila has dadila askatasunean**

Ikasturtea hastear dago
esan dute irratian,
abuztua utzita atzean
bihar gaude irailean,
berehala hedatuko dira
haurren algarak eskolan,
goiztiarren urratsak kalean,
bozinak errepidean,
eguneroko jardunen hotsa
pizten ari da herrian.



Politiko profesionalak
ederki zeuden hondartzan,
ahaztu ohiko batzarrak
botata etzaulkietan,
bulegoetan zain baitituzte
besaulkiak kerizpean,
badatoz patxadaz irrifartsu,
larrua dute beltzaran,
joan zirenean bezain garratza
dirau gatazkak geurean.

Gatazkak azken hamarkadetan
ez du atsedenik hartu,
ongi daki hori espetxeak
zigortu duena estu,
jaio ginenetik ez baitugu
inoiz hemen ezagutu,
lasai itzuli oporretatik,
askatasunaz gozatu,
etengabeko ikasturtea
ez da oraindik bukatu.

“Ikasturtea polit hasi da
bakean Euskal Herrian,
hiriburua ezarri dugu
Iruñea zaharrean,
euskara edonon dantzut pozik
goizeko osteratxoan”,
ametsetan bizi izan baitut
goxo ziegako ohean,
espetxerik gabeko irailak
behar ditugu geroan.

*2009ko irailaren 9an*

*87*

**Kontsolagaitz bati**

Kontsolagaitz ikusi zintudan
negar batean helmugan,
etorkizuna, gurpil beltxexkak
bezain ilun zenekusan,
lehiakor izateko gogotsu
bihotz-biriken kaltetan,
itotzear iritsi baitzinen
bizikletaren gainean.



Buruari gehiegi estutu
zenion errepidean,
nahia eta ahalmena ezin
dira uztartu askotan,
bizitzari xede bat eskaini
diozu ezinbestean,
altxor hori eskura daukazu
auzolanaren giroan.

Ohartu beharko zinateke
hobeto dela sarritan,
lasaiki bizi besterik gabe
aisialdiko garaian,

zelaia sastraka bilakatzen
denean zure bidean,
ospetsu nahi izatea baino
ederrago baita izan.

Gu geu garelako, aintzat hartzen
gaitu beti etxekoak,
neurtu egin barik txapelak
eta ustezko porrotak,
Arraten ez duzu irabazi
gogorrak dira aldapak,
baina zeuretzat izan baitziren
lagunen txalo beroak.

Goibel zaude, lur jota dirauzu,
lainotu dira izarrak,
etor zaitez lehortutakoan
isuritako malkoak,
neure besoen artean estu
senti itzazu taupadak,
halakoak izan daitezela
aurrerantzean sariak.

*2009ko irailaren 14an*

*88*

**Espetxeko txolarreak**

Ugaltze jokoetan dakuskit
txolarreak elkartuta,
arrautzak errun ditu emeak
obulua ernalduta,
garaiz prestatutako habian
txitatu lumak puztuta.
Udaberrian lehertzen baita
izadia berrituta,
teilatupean polito daude
oskol denak kraskatuta.

Txori jaio berriak urduri
gosez baitaude habian,
badoaz hegazka txolarreak
bizi, txitean-pitean,
ogi apurrak eta eltxoak
harrapatzeko airean,
mokoak zabalik zain dauzkate
txio ozenen artean,
kume errukarriak indarge
dabiltza larrugorrian.

Lo eta jan epelean, hazten
dihoaz txolarretxoak,
irrikaz desiratzen dituzte
nagusien hegaldiak,
halako batean ausartenak
astindu ditu hegoak,
patioan dihardu txioka
inguruan gautxoriak,
tamalez ezin dio lagundu
amatxo ikaratiak.

Preso batek jaso du lurretik
ziegan babesteko prestu,
zigorra bigunduko baitio
kartzelaldia laburtu,
txoria ongi zainduko baitu
maitekiro elikatu,
sorbalda gainean kokatuz
bizipozez paseatu.
Txioak entzunez esnatu da
bihotza baitzaio piztu.

Izadiaren deia jaso du
txoritxoak bart gauean,
kabi berri baten bila doa
hegazka egunsentian,
presoa goibel geratu baita
altxorra galdutakoan,
lumaje arrea laztanduko
lioke etengabean,
ametsetan dakusa txioka
eder askatasunean.

*2009ko irailaren 20an*

*89*
## **Zinemaldiko izarrak**

Diz-diz ibiliko da izar bat
Donostiako hirian,
iragarri dute letra larriz
egunkariek goizean,
Kursalen elkartu dira
nerabeak iluntzean,
oro baitira erotu denak
aktorearen aurrean,
txilio hutsalak etengabe
ebakiz eztarrietan,
aurpegiak net eraldatuta
lurrikararen menpean.

Jaungoikotzat hartzen dituzte
zinemaldiko izarrak,
kontsumismoaren marketing-ak
mitomania antzuak,
mindu ditu, erabat txolindu,
neskato hauen buruak,
ezinbestean saldu behar du
irudia aktoreak,

etorri den bezain irrifartsu
utziko gaitu mitoak,
soilik geratuko dira hemen
zoramenaren ajeak.

Alfonbra gorria nekatu da
batu dute garbitzeko,
izar uxoak alde egin du
berriro ez itzultzeko,
beste hiri batera joan baita
handinahia hedatzeko,
zinemaren irabazpidea
emendatzen laguntzeko,
zorionez ortziko izarrak
prest baitaude dantzatzeko,
lilura zaitezte distirekin
"fan" girotik aldentzeko.

*2009ko irailaren 29an*

*90*

**Baserriko esnea**

Galarazi zieten salmenta
kaleko atarietan,
banaketarik ez zen egingo
baserritik zuzenean,
marmitek ez zuten isuriko
esne gordinik goizean,
lanaren etekinak geratu
ziren esne-zentralean.

Lokarria ez dago zintzilik
hutsik dago zirgiloa,
aspaldi utzi zuen larrean
baserritarrak astoa,
ganbaran gorde nuen goibelki
geure esne-lapikoa,
atsekabez agurtu genuen
esnezaleen aroa.

Ohitura goxo bat galdu nuen
orduan ezinbestean,
ezin dut jaso ogiarekin
esnegaina sukaldean,

errapetako esnea ito
dute kartoizko kutxetan,
likido zuri, zirin bat daukat
berotzen jarrita sutan.

Zelaian ez baitugu marrurik
aditzen udaberrian,
korta hustu behar izan dute
sitsak dantzari aulkian,
hamaika baserri hondatu da
arau txarren izenean,
atzoko esnea galdu dugu
merkatarien gortean.

Azoka baztertu dut sartzeko
merkatalguneko saltsan,
kulturaren altxor horri azkar
diogu bizkarra eman,
nortasunik gabeko esnea
nagusi hozkailuetan,
zabortegia handitu dugu
izadiaren kaltetan.

Behien ederra gogoz jezteko
sartu zara goizik kortan,
jator azpiak egin dituzu
ukuilu polit horretan,
senti ezazu itxaropena
arbasoen mendietan,
simaurraren lurrina gozoro
hedatu da larrainetan.

*2009ko urriaren 8an*

*91*
**Juan**

Zure oihu lazgarriak entzun
ditugu bart hunkituta,
ziega apurtu duzu amorruz
oro etsiak hartuta,
oinaze sakon horren sustraia
ezin ondo ulertuta,
amildegian irudikatu
zaitut guztiz txikituta.

Gugandik urrundu baitzaituzte
hala-moduz baretuta,
gu hemen geratu gara goibel
zutaz oso kezkatuta,
izu ilunak inguratu nau
ameskerian bilduta,
ezin izan baitut lorik egin
gorputza izerdituta.

Kalean erara zenbat buru
hainbat buru katean,
baina hemen garun asko dago
gaixorik bakardadean,
zaku patatak antzera daude
gordeta soto hezean,
urteak igaroko dituzte
galduta ezerezean.

Eroak maitasuna behar du
soka estuen ordean,
elkarrizketa gozagarriak
lasaigarrien aurrean,
berekoikeria eta presa
arinduta jendartean,
parte har lezake zoriontsu
herriko jardunbidean.

Bere ulu garratzak berriro
sastatu dit belarria,
urrutitik entzun zitekeen
eztarriko aldarria,
ozenki eskatu du gauean
esperantzaren ogia,
bihotz zanpatuak irauteko
behar duen hazkurria.

Ilargiari galde baitio
bizipozaren argia,
eguzkiak itzalpean daukan
ilusioen zubia,
egunsentian eder hazten den
izpi gorrixka bizia,
geroan benetan sinisteko
geure irrien zirria.

*2009ko urriaren 13an*

*92*

**Bateragune bat behar dugu**

Estatuek ametsa nahi dute
kiskali zabortegian,
errepresioa erabiliz
oro amildu etsian,
gatazkaren babesleak lasai
dabiltza lardaskerian,
izua zabaldu nahi dute
lauburuaren habian.



Epaile jaunak bortizkeria
azkar jarri du abian,
boterearen dialektika
bete zuen aspaldian,
albiste onen mezulariak
espe daude deserrian,
lotu zituzten epaitegian
gezur baten aitzakian.

Amaiurko muino ederrean
oihuka daude aztarnak,
"euskal herrialdeak batzeko
bil zaitezte euskaldunak",

Oroitarriaren harmailetan
dantzuzkit zut oihartzunak,
antzinako gaztelu beltzaren
desiren kontakizunak.

Harrien ondoan arnastu dut
iraganaren tasuna,
sentitzeko orduko negarren
zaurien gordintasuna,
zor diegu bortxaz galdutako
bakearen ontasuna,
aberriaren askatasuna
baitzen euren maitasuna.

Euskaldunak bananduta jardun
ohi dugu maiz kalean,
botere tsu zekenen lagunak
izan gara hainbestean,
batuta azkartuko baitugu
kontzientzia jendartean,
errazago dabiltza horrela
egiak geure etxean.

Bateragune bat behar dugu
zuk eta nik elkartzeko,
Euskal Herriko etorkizuna
ganoraz eraikitzeko,
bizi dugun gatazka luzea
itxaropenez janzteko,
laino ilunak brast ezabatuz
oskarbiaz gozatzeko.

*2009ko urriaren 21ean*



*93*

## Trenak, herritarrak, atzo eta gaur

Tren geltokiko nasan urduri
amaren agindupean
tentu handiz, adi, sartzen ginen
zurezko bagoi arrean,
poliki genegien txangoa
trenbidearen gainean,
izerdi patsetan eta zutik
hainbeste jende artean,
haizeak freskatuko gintuen
Debara blai iristean,

zamatuta gindoazen beti
saria goxo harean,
liseriketa zaintzen genuen
jolasten itsas ertzean.

Udan jendez gainezka zegien
bidea konboi-andanak,
ez zituen sekulaz onartu
ordularien esanak,
itsasoa gerturatu zigun
geure kostaldeko trenak,
parez-pare zabaldu zizkigun
eskualdeko barrenak,
presarik gabeko garai hartan
bost abiadura denak!
Askoz hobeto genekuskien
horrela bide-bazterrak,
irrifarrez joan eta itzultzen
baikinen Eibarko haurrak.

Trenbide horrek gaur egun hainbat
herri lotzen baitu prestu,
ingurugiroaz betidanik
egoki baita uztartu,
zoritxarrez ezin dut horixe

bera zutaz goraipatu,
Abiada Handiko Trentzarrak
lurrak dituzu suntsitu,
Ama-Lur hamaika zauririkin
oro baituzu tristatu,
hirien arteko harremanak
nahi baitituzu estutu,
herri eta baserri askoren
kontura patrika puztu.

Tren horrek jendea batu baino
piztu baititu auziak,
haranen galera dakarkigu
handikien gutiziak,
bagoi horietan nekez baitira
izerdituko bisaiak,
baina malkoez bustiko dira
galdutako belardiak.
Arbasoen iragana oroit
dezala jauntxo berriak,
izadiaren altxorrak maita
ditzala Euskal Hiriak,
ihintzak zoragarri jantzi ditzan
udaberrian zelaiak.

*2009ko urriaren 27an*

*94*

## Hiru mutiko geroari begira

Iraganeko oroitzapenak
hurbil dauzkat ametsetan,
Urko mendiaren trokan daude
hiru mutiko hizketan,
filosofatzen ari baitira
bermatuta harkaitzetan,
zein izan liteke bizitzarik
osoena Lur honetan,
eguzkitara geroa dantzan
darabilte gogoetan.

Nerabe horiek sentimenduak
dituzte sutsu ekarri,
erosotasunari diote
beldur, lokarri da sarri,
diruak amil ditzakete
ezerez gaiztoan larri,
frankismoa nahi dute garaitu
zabortegian brau jarri,
bidegabekeria baztertu
askatasuna ezarri.

Hirurogei urterekin hausnar
ditzakegu fin bizitzak,
ebaluazio baten bidez
zehatz neurtu emaitzak,
aztertu, kontzientziak gidatu
dituen geure ekintzak,
etxean, lanean, jasotako
liliak eta arantzak,
sentitu utopiak dirauela
tinko, uxatu zalantzak.

Orduko mutikoak ez daude
erretretaren garaian,
baina mende erdi bat duenak
gainditu udaberrian,
ongi daki ez duela dena
egingo negu aldian,
makina bat helburu geratu
dela zintzilik zubian,
hanka-sartzeak ez dituela
konponduko hilzorian.

Zorionez ez baita geurekin
joango betiko irria,
ez da Mundua galduko, eta
ezta ere Aberria,
trokan hurrengo belaunaldiak
gozatu du iturria,
koska bat gehiago igoko da
gailurrerantz aldarria,
guk baino gertuago izango
dute jendarte berria.

Nerabeek laztandu nahi dute
itxaropenen eztia,
hementxe gozoro ezar dezan
elkartasunak egia,
hesirik gabe eraikitzeko
euskal lurralde bizia.
Maitasunaren altzo beroan
ereingo dugu hazia,
sor dadin biharko jendartea
auzolanean hezia.

*2009ko azaroaren 4an*

*95*

**Eibarren Gaztañerre**

Adaburu biribilduetan
fruituak dira lehiatu,
hego-haizeak lurrera ditu
bota eta barreiatu,
gaztainadian baserritarrak
baititu gutiziatu,
astoaren otzarak beteta
azokarantz da abiatu.



Gaztaina azal arre-gorrixka
heldu zara morkotsean,
gustura dastatuko zaitugu
"Gaztañerre" egunean,
arimen osteko bigarren
astelehen iluntzean,
eibartarrok bukatuko dugu
ase etzanda ohean.

Gaztainak dihardute presaka
erretzen danbolinean,
laster ederki hedatuko da
usaina geure artean,

paperean fin bilduta saldu
dituzte aida batean,
eskuak berotuko ditugu
poltsikoan haztatzean.

Elkartean, tabernan, etxean,
urteroko lagundian,
gaztainak eta barraskiloak
zain baitauzkagu mahaian,
hainbat lagun gogoz batu gara
AEK-ren afarian,
ongi datorkigu astintzeko
mingaina era eztian.

Euskaraz afalduko baitugu
giro guztiz ederrean,
akatsak zuzenduko ditugu
lotsa utzita atzean,
ikasleek kantatu baitute
gaztainaren ohorean,
trikitixaren doinuarekin
dantzan alaitasunean.

Bizipoza ezagutu duzu
modu txit zoragarrian,
ustekabean gertatu da bart
gauerdiko atarian,
fruitu arre-gorrixkaz erditu
baitzen morkotsa urrian,
euskara jaio da zeure baitan
ilbeherako argian.

*2099ko azaroaren 10ean*



*96*

## Bertsolariak eta herria

Herri bat isilik dago, adi,
barneratzeko mamia,
gogoak oro bilduta daude
hunkitu da jendakia,
zirrarak xaloki aupatu du
desiren ordezkaria,
burutu baita gaurko ametsa
hainbeste lagunen nahia,
irrintziak dabiltza airean,

liluraren irudia,
irrifarrak loratu baitira,
bertsolarien magia.

Hitzak eta doinua uztartuz
entzun da kanta txukuna,
bertsolariak erdietsi du
arimen asetasuna,
esaldi ederrenak ehunduz
herritarren maitasuna,
taula gainetik eskaini baitu
dotore maisutasuna,
txapelketan neur baitaiteke
hizkuntzaren osasuna,
bertsoen giroan zoriontsu
dabil geure euskalduna.

Hamaika bertsolari ikusle
dakusagu finalean,
beraien grina isladatu da
erkideen jardunean,
jokoak bere arauak ditu
jarrita ezinbestean,
tamalez bertsoak sufritzen du
lehiaketaren menpean,

zerbait aldatu behar genuke
gozatzeko jolasean,
izan gaitezen denok garaile
txapelaren kerizpean.

Bertso, sendo errotu baitzara
euskaldunen baratzean,
antzinakoen izaeraren
usaina duzu soinean,
euskara goratuz baitzabiltza
mendian eta kalean,
geure harribitxi galantena

zara nazioartean,
aldapak leuntzen dizkiguzu
ideien mundu askean,
segi ezazu zintzo plazetan
joan zirenen ohorean.

*2009ko azaroaren 17an*

*97*

## Josu eta Shantiri maitasunez

Hotz gorri bat zegien kalean
Franco hil zen egunean,
eguzkiaren izpiak gorde
ziren lainoen artean,
leihoak ireki genituen
euskaldunok sukaldean,
arnasa gogor hartu genuen
Euskal Herriko partean.

Franco hilda dena konponduta
esan zuten bat-batean,
ederto bizi izan baikinen
esperantzen magalean,
zoritxarrez ustea gertatu
baitzen ustel azkenean,
askatasunen egunsentiak
gaixo darrai ilunpean.

Franco hil zen datan tirokatu
zituzten lagun mamiak,
geure baitan dabiltza beren
ametsak eta irriak,

Shanti eta Josuren ekintzak
oroitzen ditu herriak,
gatazka bideratzeko asmoa
baitzebiltzan gidariak.

Estatu arrazoiak erraztu
zuen makurren iraina,
pistolari haiek gurtzen zuten
Konstituzio-ezaina,
zuzenbidezko erreinu omen
Espainia alajaina,
bortizkerian oinarritzen da
bere batasun izaina.



Gauean zirrara isladatu
da geure aurpegietan,
samurki elkartu garenean
ohiko omenaldietan,
zuen arima onberak daude
bihotzondo eztietan,
krabelinak eder dakuskigu
haurren begi ninietan.

Tinko, zindo, eraikiko dugu
amnistiaren bidea,
egun handian pozez entzungo
baitugu zuen elea,
zuentzat maitez eta bihotzez
aberriaren haizea,
sagar helduen lurrin goxoa
txontaren kantu askea.

*2009ko azaroaren 24an*

*98*

**Aurreskua eta Erregea**k

Geure arima goibeldu baitzen
jakin izan zuenean,
aurreskua dantzatu zutela
erregeren ohorean,
txistulariak urratu zuen
lotsaren muga airean,
dantzariak burua makurtu
erarik morroienean.

Aurreskuarekin goraipatzen
baita herriko kutuna,
agurtzen dugu samintasunez
betiko joan den laguna,
omentzen dugu bizipozez
kirolarien jarduna,
adierazten diegu dotore
presoei maitasuna.

Ikusliar jatorra baitugu
zaintzen euskaldun bat adina,
begirunez dantzatzen diogu

aurresku polit bikaina,
doinuarekin uztartuko da
dantzari bipil liraina,
atseginez eskainiko dio
txapel gorri txit apaina.

Sarritan gonbidatzen dituzte
handikiek erregeak,
Francoren oinordeak ez dira
ordea adiskideak,
gaizto ukatzen baitizkigute
askatasunen ateak,
betidanik izan dituzte prest
gudarosteen kateak.

Errepublikarrak zazpiak bat
maite duenak etxean,
ezin du bere gogoa mindu
monarka baten aurrean,
txistua isilduko bagenu
etortzen den bakoitzean,
urrats on bat emango genuke
aberriaren bidean.

Atzo limurtu baitzen ikusten
erregeen bihotz-beltzak,
ahaztuta utzita hor nonbait
zapalkuntzaren arantzak,
hurrengoan oparitu otoi
Euskal Herriari dantzak,
geure habian kukuak baino
behar ditugu txepetxak.

*2009ko abenduaren 1ean*

*99*

## Durangoko Azokan euskal kultura zoriontsu

Mari eta Basajaun urduri
zeuden Anboton gauean,
Ibaizabaleko lamiekin
elkartu dira goizean,
eskutik oratuta badoaz
aurrerantz haran berdean,
euren oinatzek garamatzate
hitzordura zuzenean.


Durangon bildu gara xalo
betiko adiskideak,
gorazarrez agurtu ditugu
kulturaren maitaleak,
euskara laztantzeko bat datoz
Aitorren herrialdeak,
ederki asetzen du azokan
gosea euskaltzaleak.

Tamalez ez dago pagotxarik
kulturaren lurraldean,
egile gehienek ezin dute
bertatik bizi geurean,

multinazionalen ekoizpena
saltzen da aida batean,
begiak kokatu baititugu
grinatsu ezerezean.

Kontsumismoaren dei ozenak
ezkutuan du ziria,
merkantilismo ankerrak makur,
urritu digu garia,
hemen geure kulturak behar du
mezenasen emaria,
agor ez dadin ilunaldean
euskaldunen iturria.

Geurean tantaka edaten da
euskara basamortuan,
sakabanatuta bizi gara
norberaren aburuan,
oasi lauki bat da azoka,
sar zaitez gogoz putzuan,
euskal liburu eta diskoen
pizkundean, abenduan.

Kultur aniztasuna gabiltza
lantzen ekitaldietan,
jaso eta eman nahi baitugu

munduko harremanetan,
Etxepare ezagut dezaten
jatortasunez plazetan,
bil zaitez Durangoko azokan
arbasoen oinatzetan.

*2009ko abenduaren 8an*

*100*

**Bihotzean bizi diren Aitxa eta Amaren omenez**



Ama-Lurraren deia
txorien txioa,
egunsenti polit bat
haurren desioa,
zelaiak ihintzez blai
hau bozkarioa,
ilunabar goibel bat
hurbil adioa,
izadian jaio da
geure herioa.

Negua etorri zen
hotz eta saminki,

udaberria gero
piztu txit bikainki,
udan gorritu ziren
bazterrak gordinki,
udazkena badoa
basoak apainki,
hamabi iretargi
joan dira arinki.

Giza eskubideen
datan izan baitzen,
sentitu zintuztedan
aterpean batzen,
zuen zirri guriak
baititut gozatzen,
bihotzean zaudete
taupadak zuzentzen,
oroitzapen gardenean
laztanak eskaintzen.

“Eutsi goiari arren!”,
entzun nuen baiki,
tristura apaldu da
barnean poliki,
geroa dastatzeko

zuekin alaiki,
egunak bizi ditut
bidean jarraiki,
Artizarrak hor darrai
ortzian argiki.

Espe nago urruti
gogoa herrian,
batera gaude maitez
ziega huts zurian,
kantuan dagit sarri
zuen lagundian,
irrifarrak dakuskit
xalo argazkian,
ohean bezain goxo
amets irudian.

Etsipenak gogorki
estutzen du sama,
maitasunak leunki
nasaitzen du zama,
ilusio ederrak
negarra darama,
zirrarak zuengana

eztiki narama,
elkar bizi baitugu
Aitxa eta Ama.

*2009ko abenduaren 15ean*

*101*
**Gabonak ate joka espetxean**

Munduaren argiteria
pizten da Gabonetan,
murgildu egin baikara
ohitura eskasetan,
nekez ikus baitaiteke
izarrak zeruetan,
dotoretasunak urri
baitira kartzeletan.

Herrimina hasiko da
deika egunsentian,
samina metatzen zaizu
estu ilunsentian,
Gabonak ate joka

baitaude aspaldian,
ozen kantatuko dut
oldoztuz aberrian.

Etsipena sartu baita
sentimendu urtsuan,
ilargia uzkur dabil
izoztuta neguan,
subila erreko dugu
geure beheko suan,
esperantzak berotzeko
euskaldunen tribuan.



Astiro joaten baitira
Gabonak deserrian,
arimak aurkitzen dira
makal Eguberrian
zuen bizipoza behar
baitugu gauerdian,
gogoak aske dabiltza
dantzan Euskal Herrian.

Doinu bat entzungo baita
gau hotzaren orduan,
malko bat isuriko dut

ametsen inguruan,
urruti zaudete baina
gertuki akorduan,
senti itzazue maitez
zirri leunak larruan.

Gabonetan irri gutxi
dakusat espetxean,
oparirik ez baitago
zigorraren aldean,
desirak trumilka datoz
gaueko aterpean,
Olentzerokin batera
etzi gaude etxean.

Zuentzat galdeko ditut
beharrezko laztanak,
neuretzat ezinbestean
geroaren egunak,
Olentzero jaitsi baita
alaitzeko haranak,
iragarriko dizkigu
euskal askatasunak.

Gaur ez bainaiz eseriko
sukaldeko txokoan,

zuen topa entzungo dut
ziegako mahaitxoan,
nirekin zaudete ezti
zirrararen ondoan,
goibeltasuna arinduz
samurtasun goxoan.

*2009ko abenduaren 23an*

*102*

**Urkon Urte Berria**



Urte Berri eguna
eguzki berrian,
zerua polit dago
geure aberrian,
Urkon zintzilik daude
ametsak harrian,
behe-lainoa zuri
mendien gerrian.

Urko, ezaguna du
izenak izana,

gogoak bainarama
urtero zugana,
tontorrean esnatu naiz
utzita porlana,
zurekin betetzeko
gogoz ohiko lana.

Kalamua dakusat
dotore aurrean,
Anboto eder dago
Bizkaia aldean,
pozez bildu baikara
kideok goizean,
topa egingo dugu
zeure gailurrean.

Hemen gaude maiteak
Urkoren gainean,
urtea has dadila
leun espetxean,
zutik geure zain dago
herria kalean,
gatazka gaindituko
dugu azkenean.

Sardinzarrek zituzten
erauzi ikurrak,
gorrotoak zituen
oldartu lapurrak,
hutsunea bete du
apal euskal lurrak,
bertan pausatu dira
maitez denon ahurrak.

Sagardoa baitugu
isuri lurrean,
aske izan gaitezen
laster lurraldean,
xorta bat edan dugu
pentsatuz etxean,
bihar biziko gara
zuekin bakean.

Argazkiak dituzte
sorbaldan bermatu,
amnistiak baititu
gorantz bideratu,
Urte Berrian zintzo
dira gogoratu,
espe gaudenak jator
gaituzte goratu.

Egunsenti gardena
sorginen haizea,
ikusmira galanta
zelaien berdea,
ilusioa hazi
baita txit betea,
erpinean hunkitu da
mendigoizalea.

*2009ko abenduaren 28an*

*103*
**Ahuntzaren eztula entzungo da trokan**

Hogeita hamabost ahuntz
laharrak dastatzen,
ahuntzaina gorago
geroa ehuntzen,
eguzkia hor dabil
eguna epeltzen,
antzinako jarduna
hasi da errotzen.

Ernari daude polit
sasiak hausnartzen,

gaztearen begiak
poza isladatzen,
errapeak dilinda
badoaz edertzen,
ari baita jezteko
sasoia hurbiltzen.

Antxumeak goseti
bordatxo zurian,
tente baitaude ugatz
gurien azpian,
jatorrak dena zeukan

prest udaberrian,
esnea erraz jetzi
du egunsentian.

Esnea gatzatu du
kaikuan bilduta,
gaztak egingo ditu
gazura kenduta,
gaztandegitik jaso
poliki onduta,
azokan eskaintzeko
txoko bat hartuta.

Baztertu du kaleko
erosotasuna,
besarkatzeko estu
goiko ontasuna,
kontsumismoan gaixo
da etorkizuna,
izadian baitago
bizi, osasuna.

Zelaiko talaiatik
dakusa herria,
hazten dihoa gaizto
porlan-egarria,
ahuntzainak jarri nahi
luke mugarria,
alperrik gal ez dadin
euskal baserria.

Eguerdiko ahuntzaren
eztulak sastrakan,
izango du zentzurik,
entzungo da trokan,
indusmakina gera
dadila fabrikan,
akerrak bazka dezan
lasaiki txarakan.

Goizeko hozkirrian
beleak karraka,
beheko belardian
ardiak balaka,
ahuntzamak aldapan
eztiki marraka,
hau dena ikusita
haurrak algaraka.

*2010eko urtarrilaren 4a*



*104*

## Euskal selekzioak mundura

Euskal selekzioak
geroa jokoan,
jar zaitez bizipozez
zazpien lerroan,
txanponen hotsak ahantz
itzazu kanpoan,
altxorra dugu dirdai
etxeko giroan.

Munduan nahi baitugu
izan lehiatzeko,

bagarela ozenki
aldarrikatzeko,
adiskidetasuna
jator sendotzeko,
kirolari guztiak
bero agurtzeko.

Estatuenak baino
herri olinpiadak,
entzun daitezen garbi
txikien danbadak,
grina antzuen ordez
zaleen taupadak,
garaikurrak izango
dira besarkadak.

Kirola sarritan da
guden alborada,
ikuskizunak ez du
bertako islada,
kirol talde bati maiz
deritzo armada,
hemen kanta dezagun
alai danborrada.

Jabetza Madril eta
Parisen menpean,
pilota dakusagu
gaur, txaparen pean,
ikurrina daukagu,
zatar besapean,
altxa dezagun gogoz
nonahi zerupean.

Espainiakin lehia
dadila Frantzia,
finalean zain dago
zut Euskal Herria,
ospatuko baitugu
gero afaria,
garaile izango da
beti umoria.

*La Roja* eta *Les Bleues*
antzera geurea,
praka zuria eta
atorra berdea,
koloreetan ikus
daiteke aldea,
nortasunak behar du
euskaldun taldea.

Irudikatu baitut
gertatuko dena,
euskal selekzioak
munduan barrena,
erakutsiko dugu
irri ederrena,
elkartasuna baita
herrien onena.

*2010eko urtarrilaren 11n*

*105*
**Lurra eta Martitz**

Gizakien geroa lurretik
kanpo dute iragarri,
"Mundua txiki geratu zaigu",
entzun dut pixka bat larri,
ortzia mugagabea baita,
hauts, hotz, gas, su eta harri,
bertan bizitzea izango da
benetan ikaragarri.

Artizarra beroegi dago,
Martitz agian hotzegi,

ezin ditugu bizimoduak
Espazioan eskegi,
handikiek zerua nahi dute
zurrupatu baldarregi,
ustiatu egin dutelako
gaiztoki Lurra maizegi.

Izarbel urdinak zulatuta
baitauka etorkizuna,
beste munduetan zain baitago
geure zoriontasuna,
sei mila milioi lagun lantzen
Martitzeko gorritasuna,
hobe jator gordeko bagenu
erlearen osasuna.

Arima indoeuroparrak
dena nahi du konkistatu,
historia txar idatzi baitu,
izadia hondoratu,
Ameriketan kulturak galduz
urrea baitzuen batu,
indarkeriaren izenean
bertakoak akabatu.

Mundu honen aberastasunak
ez dira mugagabeak,
diruak dakarzkigu gainean
hondamen amaigabeak,
nahikeriak biziki baititu
harritu lotsagabeak,
lekutan eraikiko dituzte
gizartearen habeak!

Ilargia ilunabarrean
zelaitik lasai gozatu,
itsasorik gabeko mundu bat
ezin dut irudikatu,
espazio-ontzian sartuta
joan zaitezte, abiatu!
Bihotzez eskertuko genuke
Ama-Lurrakin ospatu.

Gerrarik ez legoke munduan
zorion eder berrian,
ezta ere goserik Afrikan
pobreziarik herrian,
eguzkiak jantziko bailuke
ortzadarra goiz-argian,
basoak arnasgora hartuko
egurats garden garbian.

Negarrez jaio nintzen euskaldun
barre egiteko gero,
izadi naizelako dakusat
Lurra pozez egunero,
izarren azpian nahi nuke
hartu atseden gauero,
Artizarra zintzo agurtzeko
arbasoek bezain bero.

*2010eko urtarrilaren 18an*



*106*

**Berrehun urte euskaraz**

Harizti, urri, orri, irri, herri, harri,
ametsetan agertu zaizkit harrigarri,
belarrietan egin dute maiz aldarri,
gure ezpainetan baitaude zoragarri.

Euskara zurekin jantzi nahi dut burua
osatzeko Munduaren iturburua,
kultura sendotzea baita helburua,
babes ezazu jakintzaren liburua.

Diglosiaren menpe zaude oso larri,
zure heriotza baitzuten iragarri,
hainbat tokitan utzi zintuen elbarri,
euskal arimak behar zaitu maitagarri.

Mendeetan aurkitu duzu koska pila,
irauteko bidea izan baita zaila,
aspaldi hasi genuen baikor hazila,
zuzen jasotzeko arbasoen makila.

Harri Aroan mendi eta haranetan
goxoki berotu zinen sutondoetan,
Etxeparek goratu zintuen plazetan,
orain Interneten zaude sukaldeetan.

Hitz ederrez bete diguzu izadia,
zoriontsu sentitzen da bertsolaria,
belaunaldiz belaunaldi zara herria,
polita zaude gaur elezahar eztia.

Berrehun urte behar ditut bizitzeko,
askatasuna kalean txit gozatzeko,
zure berba ederrenak ahoskatzeko,
jendartean zabiltzala baieztatzeko.

Betikotasuna eskatzea Lurrean
bakarrik du tokirik desiren etxean,
lasai bizi nahi nuke euskal lurraldean,
euskaraz dagien Mariren bihotzean.

*2010eko urtarrilaren 25ean*

*107*
**Eskubideak kartzelan ehuntzen**

Bilboko arratsean

kinkeen urratsak,
espetxean zaizkigu
hunkitu ahotsak,
eskubideak ilun
utzi ditu hautsak,
bidera ditzatela
hemengo akatsak.

Maitea, larri zaude
gaixorik ohean,
ez dago bizitzerik
makal espetxean,
zure barre zintzoa

nahi dugu kalean,
osatuko baitzara
askatasunean.

Sakabanaketaren
agindu ankerrak,
eragintzen dizkigu
sarri ezbeharrak,
saminez dantzuzkigu
bihotzen negarrak.
Euskal Herrira arin
euskal herritarrak!

Hormatzar bat aurrean
herra inguruan,
bakartuta baitzaude
orroen munduan,
etsipena baitabil
sastaka buruan,
nekez bizi zaitezke
isolamenduan.

Zigorra bete duzu
arauen barruan,
gaur lotuta darraizu

etsaien larruan,
mendekua sustatu
dute Estatuan,
esperantzak zut dirau
desiren zoruan.

Politikoa baita
kideon geruza,
tamalez ukatuta
dugu estatusa,
kemena eta grina
ditzakegu usa,
gal dadin egoera
oro malerusa.

Elkartasunean dut
jasota habia,
maitasunean dago
biharko argia,
argazkian dakusat
euskaldunen nahia,
aske behar gaituzte,
hator amnistia!

Gatazka nahi baitugu
demokratizatu,
arrazoien zelaian
borroka jokatu,
zein ederra den geure
jendea batuta!
Dirdai gaude kideok
lepotik helduta.

*2010eko urtarrilaren 31n*

*108*

**Euskal Herri osoa**

Bihotzak udaberriaren atarian,
doinu bat jaso baitu goiko belardian,
bertso bat erantsi dio ilunsentian,
kantatzeko euskaldunei goiz-argian,
oroimena bizi dago trikuharrian.

Ozenki dantzugu jentilen aldarria,
euskalduna da hemengo aberria,
eremu ederra, zahar eta berria,
Ama-Lurrak eskaini baitzigun harria,
eraikitzeko auzolanean herria.

Artzainekin sendotu baitzen miraria,
ardien artiletik sortu zen haria,
euskal herrietako hizkuntza joria,
menderen mendetan izan baita loria,
maitez goratuko dugu ele guria.

Haritza askatasunaren kerizpea,
hagina euskal menditarren adorea,
lurra tinko gorde zuten su eta kea,
tamalez bortitzek hautsi zuten atea,
arbasoen nortasunak dirau ordea.



Euskal Herriak ez du herririk zanpatu,
sekula ez du kulturarik azpiratu,
herrien mundua nahi baitugu bultzatu,
kulturen arteko harremana aupatu,
elkartasun ekonomikoa altxatu.

Sagar eta mahats gogoan elkartuta,
izerdien tantak jardunean uztartuta,
gazteak badatoz ikurrinak hartuta,
kateak utziko ditugu apurtuta,
bakean bizitzeko zazpiak batuta.

Lauburuaren zeruan, aise jatorra,
Arrano Beltzak goitik dakusa alorra,
dantzu itsasoaren marmar iraunkorra,
jendakiekin baita txit abegikorra,
horregatik da etxean hain maitekorra.

Uren muga-lerroan hasten da aldea,
izadiaren aniztasun dotorea,
horia baita lautadaren kolorea,
berdea Kantauri isuriko tartea,
Euskal Herria da lehor eta hezea.

*2010eko otsailaren 8an*

*109*

**Torturaren malura**

Leotzen eremuan
hil da sosegua,
larrua dabil dar-dar
zelatan izua,
sentitzen duzu larri
buruan damua,
gogoak etsipenez
dantzu maiz oihua
“bizi baino nahiago
lurpeko zorua!”.



Atxilotu zintuzten
etxeko ohean,
ama utzi zenuen
goibel sukaldean,
etzanda zaude zurbil
beldurren gainean,
estutasuna zital
dabil bihotzean
arima izoztu da
zeure barrenean.

Burdinazko atean
iltzaturik soa,
urratsak bertan dira
arreta osoa,
nekatuta baitzaude
galduta txar loa,
eurekin zoaz makal
patu lar gaiztoa!
Sartu zaituzten gelan
dago gorrotoa.

Zure nortasuna nahi
baitute birrindu,
maiteak mehatxatuz
sentimena mindu,
konpromisoa zakar
baitatik astindu,
egurtu baitzaituzte
izena iraindu,
bizirauteko zara
gaitz ahalegindu.

Epaile sorgor batek
dakusa aurrean,

zer gertatzen den sarri
estolden barnean,
kazetariak ez du
jaso albistean,
politika baitabil
bide okerrean,
giza eskubideak
daude ilunpean.

Estatuena baita
orbainen ardura,
barre dagite maltzur
zaurien kontura,
jasan izan duenak
halako malura,
duintasunez dio
begira mundura,
"deusezta dezatela,
errotik tortura!!"

*2010eko otsailaren 13an*

*110*

## Epaile baten mandatua

Tunika beltza baita bere mozorroa,
epaitegian dago lanean harroa,
turutekin aireratu baita marroa,
gazteleraz dantzugu ozenki orroa,
"Euskal Herritik egotzi dut Nafarroa!".

Otu baitzaio erabaki errazena,
bat-batean idatzi du ebazpena,
militarrek gotorki babesten dutena,
erregeek indarrez behartu zutena,
"euskal lurraldea soilik baita herena".

Epaileak ez daki euskaraz mintzatzen,
ez du horretarako tarterik bilatzen,
gaizto dabil ostera dena nahastatzen,
euskararen herria ari da estutzen,
guraizeekin haurren liburuak moldatzen.

Guk ez ditugu epaileak aukeratu,
Estatuek baitizkigute inposatu,
euren lana da Euskal Herria ukatu,
bidegabekeria hau irmoki bermatu,
aberriaren eraikuntza balaztatu.

Kultura bat nahi dute aginduz mugatu,
betiko harremanak gezurrez aldatu,
herriko ezaguera desitxuratu,
egia baitzuten aspaldi ezkutatu,
zantar inperioen ideiak hanpatu.

Espartero eta Francoren armadekin,
Euskal Herria zatitu zuten mugekin,
orain jolastu nahi dute geure haurrekin,
zital adarra joaz Nafarroarekin,
esanez ahanzteko behingoz Amarekin.



Epailearen hitza izan da eroa,
burua dugu hotza, bihotza beroa,
etorkizuna baitator oro naroa,
orain ezin baitugu marraztu geroa,
baina laster iritsiko zaigu aroa.

Iraganetik dator bai, Euskal Herria,
Axularrek aipatu baitzuen berria,
euskaraz dagigu alai aldarria,
"Ebrotik Aturrira erakargarria,
zazpiek dotoretzen dute armarria".

*2010eko otsailaren 18an*

*111*

## Negu gorria espetxe gorrian

Ez dago ostarterik
lainoen artean,
gaur ekaitza ari du
zarata betean,
bihotza nahigabetu
baitzait euripean,
hotzituta bainago
ziegaren barnean,
Negua ezin baitut
maite espetxean.

Hotzak ospeldu ditu
gaizto atzamarrak,
zurrundu giltzadurak
makaldu zangarrak,
eztarria urratu
dit euri langarrak,
aspaldi mindu ziren
soineko giharrak,
zigorra gogortzen du
egurats kaskarrak.

Gau ilunean dago
irrien lapurra,
eguraldi tristean
negarraren lurra.
Handitzen zaizunean
etsipen makurra,
kideak dakarkizu
onura ziurra
bizipozaren marra
jartzeko adurra.

Txolarrea txioka
dantzut goizeetan,
albisteak dakarzkit
azken egunetan,
atertu egingo du
euskal herrietan,
urratsak isladatu
dira putzuetan,
etorkizuna dabil
ezti berriketan.

Desirak elikatuz
bizi da espea,
ametsetan aurkitzen
baitu aterpea,
ilargian dirdaitsu
dakusa maitea,
polit dago oskarbi
izarren bidea,
epel etor dadila
biharko haizea.

Negu gorriak kalte
dagit deserrian,
eguzkia zain daukat
jori aberrian,
esnatzen naizenean
goiz-argi berrian,
pentsamendua deslai
baitabil herrian,
geroa loratuko
da udaberrian.

*2010eko otsailaren 24an*

*112*

**Estixa nerabeen zain**

Estixa sasoi hura bainabil
oroimenean edertzen,
izadian elkartzeko nahia
azkar zitzaigun suspertzen,
patxada goxo hartan ez ginen
zurekin inoiz aspertzen
gaur egun zoritxarrez ez baita
zugana inor agertzen,
guk ezagututako txokoak
joan baitira desagertzen.

Iraileko aisialdietan
gogokoena zelaia,
Milaflores eta Estixaren
artean pago tantaia,
adarretan zegoen dotore
ilusioen talaia,
zain geneukan beti abegikor
jauregi xume garaia,
lubakien gainean zintzilik
ametsen txoko alaia.

Aurreko belaunaldiak utzi
zigun musu-truk arbola,
garo lehor eta egurrekin
txukun zegoen etxola,
bertan gaztaroaren haizeak
izaten zuen axola,
lehendabiziko zigarroen
lekuko baitzen arola,
irudimenaren biltegia
asmo txit zintzoen zola.

Askaria prestatzen genuen
Estixako ordokian,
harrien erdian abarrekin
piztutako suargian,
txistorra eta artoa jaten
genituen lagundian,
erre usaina zabaltzen baitzen
hango inguru guztian,
berotasuna isladatzen zen
geure masaileko gorrian.

Lubakiak sasiz bete ziren
haurren irriak galduta,
negu astunak utzi baitzuen

etxola hondoratuta,
pago maitea geratu baitzen
hutsik, oro bakartuta,
urrutikoa goratzen dugu
bertakoa baztertuta,
Eibarko izadia baitago
aspaldian txirotuta.

Irudimena itota dago
telebistaren aurrean,
teknologia berriak daude
nabarmen nonahi etxean,
kontsumismoa dugu baldarki
lehenetsi gizartean
izadiari sorgor begira
egon baino hainbestean,
Ama-Lurrak nahi ditu umeak
bere baitan jolasean.

*2010eko martxoaren 5ean*

*113*

**Maluten elkartasuna**

Argazkia jaso dut
txit liluratuta,
eskaintza politekin
dotore bilduta,
maiz zarete pistetan
jausi labainduta,
ederki zabiltzate
liliak batuta.

Zuen irri gazteak
dakuskit aurrean,
masailak gorrituta
giro ederrean,
neguan zuri dago
zorua larrean,
sarritan baitzarete
etzan elurrean.

Eskiatzeko behar
da zaletasuna,
monitore jatorren
hitzen ontasuna,

goiz jaiki gozatzeko
oparotasuna,
hotzari muzin egin
zainduz osasuna.

Maisuak ez du maite
alferkeriarik,
begirale lanetan
ez du zalantzarik,
aitxa batek bezala
badu ardurarik,
itzuli baitzineten
minik hartu barik.



Zerua lainotuta
zelai apainean,
zutik zaudete alai
maluten gainean,
niretzat gaur zarete
ziega barrenean,
eguzki dirdaitsuak
ametsen gunean.

Neskatoen agurrak
aske espetxean,
argitu egin dute

ziega iluntzean,
bizipoza baitabil
ezti bihotzean,
laztan bana zuentzat
egun bakoitzean.

Txano bana jantzita
barreak tartean,
oihala zabalduta
eskuen artean,
aspaldi galde dena
euskal jendartean,
ospatuko duguna
Eibarko partean.

Elur-lore bikaina
darabilt gogoan,
zuekin etorri da
leunki hondoan,
irudi bat garden dit
ekarri gaurkoan,
elkartuko baikara
sorginen aroan.

*2010eko martxoaren 10ean*

*114*

**Eme maite zaitut emakume**

Boterearen historia da
gehien bat maskulinoa,
ilunpeko eremuan mutu
zegoen femeninoa,
otzan, men eginez bizi baitzen
emakume gizajoa,
bere umetokian hazi zen
geure jendarte osoa,
hitz sakonekin argitu du
herri askeen geroa.



Milaka urte isilik, uzkur,
agintarien oinpean,
arkeria itogarriaren
esanetara lanean,
erlijio matxisten gezurrak
goresten ezinbestean,
irabazpideen objektua
bihurtuta hainbestean,
amestuz bortizki galdutako
gunearekin ohean.

Mende luze bat berdintasuna
eskatzeko borroketan,
ar gorrotagarrien jipoiak
zentzuratuz karteletan,
bortxatutako neskak babestuz
emakume taldeetan,
lan baldintzen prekarietatea
salatuz lantegietan,
gizonen belarriak zulatzen
herrietako plazetan.

Gizon edo emakume izan
sortu gara izadian,
bizitza partekatu nahi dugu
auzolanaren zelaian,
lapurtutako hartu-emana
jarri berriro abian,
sexualitatea gozatu
aske, arian-arian,
patriarkatua betirako
hondoratu lur azpian.

Mundu zuzen bat jasoko dugu
zuk eta nik elkarrekin,
zauria eztituko da, aro
berriaren laztanekin,
berdintasunean hezi diren
haur jatorren irriekin.
Emakume, gaur dotore zaude
lurraren jantziarekin,
larrua distiratsu baituzu
goizeko ihintzarekin.

Martxoak zortzi, askatasuna
irabazteko eguna,
gizonekin ehuntzeko behingoz
guztion berdintasuna,
aurrera segitzeko data bat
marraztuz eginkizuna,
generoen arteko ardatza
izango da maitasuna,
mutil zintzoa izan dadila
neskaren lagun kutuna.

*2010eko martxoaren 16an*

*115*

## Amarentzat: Aberri Eguna

Ama gaixorik zaude
azken mendeetan,
Estatuek zintuzten
zauritu gudetan,
izana ezabatu
arau ankerretan.
Arima bananduta
duzu zatietan,
"zazpiak bat" diozu
sarri ametsetan.

Euskal lurraldea da
neurriz txikia,
bertan jarri genuen
dotore habia,
elkartasunean zut
dago armarria,
herri maitasunean
josita haria,
muga barik nahi dugu
aske aberria.

Haizea leun dabil
bordaren soroan,
haritzaren hostoak
kulunka alboan,
txoriak lasai txortxor
bere abaroan,
goiz-argiko izpiak
uztartuz giroan,
osasuntsu nahi zaitut
Izadi geroan.



Euskararen ardatza
da euskaltzalea,
argi dauka jarduna
zaletu jendea,
entzun dadin kalean
Aitorren elea,
Hendaian ikusi dut
biharko gaztea,
haz dadila mintzatzen
hizkuntza maitea.

Deiadarra egin du
zeruko tximistak,
badator konponketa
dio telebistak,
langileekin datoz
bihotzez artistak,
mendi eta lautadan
prest idealistak,
hamaika gara hemen
independentistak.

Orreagan elkartu
baitzen euskalduna,
Irun eta Hendaian
dabil batasuna,
etor zaitez gurekin
Eguzki laguna,
udaberriak dakar
loreen lurruna,
herritarren kemenak
Aberri Eguna.

*2010eko martxoaren 22an*

*116*

## Tximeleta hegalariak

Tximeleta zu zara
goiz-argiko txera,
udaberrian zaude
beti alegera,
lore-hautsa dakarzu
airetik airera,
hegaldi laburretan
loretik lorera.



Lau hegoak zeruan
arin ekinean,
nektarra xurgatzeko
lore-guruinean,
pausa zaitez poliki
krabelin batean,
ikus zaitzadan eder
kolore betean.

Aterpea daukazu
arbolan hartuta,
hostoetan zintzilik
hegoak bilduta,

zilarra dirudizu
lirain apainduta,
ilbeteko aroak
diz-diz laztanduta.

Hegoak zabalduta
pinpirin arina,
ikusgarri baitzaude
handi eta fina,
jantzita zaude polit
arrosen adina
alaitzeko mendian
aurpegi muzina.

Arriskuan zabiltza
sasien artean,
armiarmak dabiltza
zelatan sarean,
erne egizu hegan
eguerdi partean,
osorik itzultzeko
lotara gauean.

Mitxeleta talde bi
munduan barrena,

izadian bizi da
dotore lehena,
Eibarren gure alde
zutik bigarrena,
biekin hegaldari
espe dagoena.

Hegalariak dira
geure tximeletak,
urruti entzun dira
beren berriketak,
nonahitik jaso ditut
euren igurzketak,
bidaian batutako
maitasun pusketak.



Sarri dagit zuekin
amets iluntzean,
irrifartsu zaudete
Untzaga aldean,
hegoekin dantzari
era bikainean,
Amnistia goratuz
jai ederrenean.

*2010eko martxoaren 26an*

*117*

## Adiskide minari

Aspaldiko laguna
adiskide mina,
ekarri duzu goxo
zeruko urdina,
oparitu didazu
zeure atsegina,
gogoan arin dadin
ezti herrimina.

Bihotz taupadak pil-pil
zenbiltzan goizean,
kirioak dantzari
buru barrenean,
desioa bete da
oro azkenean,
elkar ikusi dugu
ilunabarrean.

Kartzelaldi beltzean
tristura izurri
sarri sentitzen duzu
bizipoza urri,

zure ikustaldia
pozaren iturri,
ziegako orduetan
ametsen hazkurri.

Ezagutu zintudan
lilien hilean,
amnistia gogotsu
lantzeko bidean,
euskal presoak zeuden
berriz espetxean,
udaberria goibel
zegoen geurean.



Hilak tak zitzaizkigun
urtaro bihurtu,
urteak hamarkadak
larrua zimurtu,
kateak ez ditugu
oraindik apurtu,
baina ez dizkigute
esperantzak urtu.

Ilusioen alde
genuen jokatu,
askatasunen lema

herrian bultzatu,
horixe baitit zeure
irriak aipatu,
ez da amnistiaren
haizea geratu.

Zoriontsu zabiltza
etxeko txokoan,
maitasuna daukazu
jasota altzoan,
halako albiste bat
entzuterakoan,
alaitasuna pizten
zait bihotzondoan.

Hitzordua joan zaigu
giro ederrean,
milaka oroitzapen
begien aurrean,
jaso itzazu maitez
laztanak airean,
hurrengoak kalean
bizi masailean.

*2010eko martxoaren 31n*

*118*

**Hogeita lau ordu euskaraz, gaur eta beti**

Azken mendeko hirurogeita
hamaseigarren urtean,
hogeita lau ordu zoragarri
euskaraz etengabean,
Anoetako belodromotik
hedatu zen lasterrean,
Loyola irratiko mezua
euskaltzaleen artean.



Eroso zebilen irratian
geure hizkuntza berbetan,
taupadak areagotu ziren
euskaldunen bihotzetan,
Estatuen eraginez gaizto
baztertuta mendeetan,
pizkundea zetorkigun ozen
Loyolako uhinetan.

“Oskarbi” taldeak eman zion
hasiera egunari,
sakon kantatuz Gandiagaren
orduko “Esperantzari”,

egunsentiak agur egiten
dionean goizari,
leiho bat izan omen daiteke
ilusioen atari.

Mikel Laboak "Txoriak txori"
bihotzez jo zuenean,
pizgailuak jaso genituen
zirrararik onenean,
Artze anaien txoriak ditu
sendo hegoak soinean,
tamalez euskarak makal darrai
habiaren barrenean.

Ordutik aurrera egun asko
igaro baita erdaraz,
komunikabide gutxiek
dagite hemen euskaraz,
ez baditugu entzun, irakur,
eta babesten arduraz,
ezingo dugu inoiz eraiki
Aitorren borda ganoraz.

Azken hamarkadetan hazi da
ezagutza jendartean,

erabilera aldiz murriztu
herritarren solasean,
aise dabil erdara kantari
euskaldunen mingainean,
euskara goibel dago ordea
ixilik bakardadean.

Lasai bizi zaitezke erdaraz
gaurko euskal lurraldean,
Paris eta Madrilgo eleak
nagusi dira geurean,
euskaraz jator zuzenduz gero
poliziaren aurrean,
erraz samar buka dezakezu
komisaldegi batean.

Egunero hogeita lau ordu
erdaraz dantzut hiria,
sartu ziguten makur ziria
galdu genuen haria,
arbasoengandik dator garbi
goiko iturri joria,
dasta ezazu gozotasunez
euskararen emaria.

*2010eko apirilaren 7an*

*119*
**Urrutiko eibartarra**

Eibar ikusi zaitut
luze zabalean,
eguzkia jantzita
diz-diz bizkarrean,
ziklistak ekinean
blai errepidean,
Arrateko pagoak
ziega barrenean.

Telebistak ekarri
baitu oparia,
oroitzapen gardenen
gaurko ataria,
oro liluratuta
dakusat saria,
zeurekin ez dut eten
sekulaz haria.

Eibar sentitzen zaitut
estuki gogoan,
halabeharrez utzi
zintudan alboan,

urteak daramatzat
urruti kanpoan,
herrimina laztantzen
gaueko altzoan.

Eibarren izan nuen
sortzeko zoria,
lanean irabazi
baitzuen loria,
kantuan ziharduan
mendian txoria,
kalean bizi-bizi
umore joria.



Eibarren hazi nintzen
etxeko giroan,
lagunekin jolasten
herriko kaskoan,
euskara jaso nuen
goxo sutondoan,
Bidebarrietan tente
dagoen txokoan.

Geure izena baita
maitez eibartarra,
abegitsu izan da

Egoko ibarra,
herria, goraipatzen
zaitut barra-barra,
hiriko kaletarra,
goiko menditarra.

Hamar urte joan dira
braust arrapataka,
eraldatu dizute
itxura pixkaka,
porlana gehitu dute
sor palakadaka,
izadia murriztu
gor mailukadaka.

Arrateko zelaiak
irudimenean,
Ama-Lurra dirudi
pagoen artean,
haizea leun dabil
askatasunean,
horrela behar zaitut
etorkizunean.

*2010eko apirilaren 14an*

*120*

**Praileaitzeko espiritua**

Eguzkia laster sartuko da
Sasiolako aldean,
Deba ibaiak freskatu ditu
erriberak arratsean,
Praileaitzeko aztia dago
espirituen leizean,
naturaren barneko zeinuak
argitzeko iluntzean,
klanaren ongiroa gidatu
nahi du etorkizunean.



Sua piztu du, ardagaiari
txinpartak zirt zuzenduta,
jeinuak erakartzeko dauka
kutuna estu hartuta,
eskerrona eskaini nahi die
arima zintzo hustuta,
beste eskua dantzari dabil
buruz gora altxatuta,
itzalak magikoa dirudi
sabaian isladatuta.

Izadia guztiz oparo da
haran dotore honetan,
tribukoek eskura dituzte
lanabesak bazterretan,
arrainak mukuru igerian
Debaren ur gardenetan,
fruituak eta ehiza gainezka
inguruko mendietan,
leinukoekin aritzen dira
abegitsu trukaketan.

Arbasoak xalo bizi ziren
izadian uztartuta,
beraiek arduraz jardun zuten
altxorra bikain zainduta,
aztiak hori landu nahi luke
jakintza baliatuta
belaunaldi berriei esan
hitzak jator azalduta,
“Sasiola gorde ezazue
atseginez gozatuta!”

Klanaren leizearen bidean
ageri du poztasuna,
Ilbeteak zehatz eman dio
aztiari erantzuna,
"orekan dago izadiaren
egiazko ontasuna",
aterpean konpartitu du
suaren berotasuna,
Ama-Lurrak oparitutako
jakien gozotasuna.

Aztiak igarri izan balu
hartzuloaren auhena,
irabazpide zekenen erruz
zetorrela hondamena,
Sasiola zainduko zukeen
erabiliz ahalmena,
Praileaitzaren gogoan heda
dezagun itxaropena,
eskain diezaiogun maitasunez
bizinahiaren kemena.

*2010eko apirilaren 21ean*

*121*

## Kotxeak geure bizitzaren erdigunean

**- Habanera -**

Kotxeak gurtu nituen
ametsen errepidean,
bizitza eraiki nuen
bolantearen aurrean,
iragarkien liluraz
grinatsu hastapenean,
abiadaren zirraraz
sorgortuta azkenean,
oraina ezin dut bizi
galduta iraganean,
mozkorrak gidatu zuen
baldar neure izenean,
bizkarra hautsi zitzaidan,
kraska, bide bazterrean,
geroztik egunak ditut
urratu etsipenean.

Automobilean goxo
dabil geure gidaria,
autobidean zintzo du
ordaindu bidesaria,

azkar dihoa aurrerantz
sentitzeko txit loria,
jokoan jartzen du beti
mehe samar den zoria,
besarkatu nahi du arin
elurraren oparia,
porlanak hurbildu dion
izadiaren saria,
ez du tunelean aintzat
hartu mendiko zauria
ezta ere zubietan
haranen negarguria.



Holako automobila
halako handiustea,
ekonomian bera da
erabat erdigunea,
erraz irabazi ditu
aintza eta ohorea,
guk berriz kentzen diogu
elkarri begirunea,
motorren burrunba baino
hobeto zelai barea,
zurekin abegikor den
arbolaren kerizpea,

laztan ezazu gehiago
alboan duzun maitea,
jar gutxiago abian
kotxearen kebidea.

“Mugatu automobilen
erabilera kalean”,
ozen dio aspaldian
kontzientziak garunean,
eguratsa dihardute
kutsatzen etengabean,
geure ohitura jatorrak
eraldatzen hainbestean,
berekoi bihurtu dute
jaio zena jendartean,
lan dagi gau eta egun
bankarien goratzean,
bizitza lau gurpil baino
borobilago denean,
ez zaitez alferrik amil
kotxe baten barrenean.

*2010eko apirilaren 27an*

*122*

## Maiatz lehenengoan, utopiaren ondoan

Borrokaren ardatza
zara utopia,
eskubide gardenen
uren errobia,
amets askatzaileen
gaurko harrobia,
kapitalismoaren
biharko hobia.



Iritsi da eguna
ozen aipatzeko,
inor ez dela jaio
lanean hiltzeko,
ez gaude prest bizitza
horrela galtzeko,
osasuna txanponen
menpeko jartzeko.

Kapitala metatu
baitu bankariak,
pobreak eskas ditu
bildu janariak,

diruen alde dagi
lan enpresariak,
ekoitz dezala behar
dena lanariak.

Argiki entzungo da
aldarrikapena,
jabeak hartuko du
ebazpen zuzena,
“lan indarra ohi denez
langilearena,
enpresa izango da
jendartearena”.

Herritarren irria
nahi dugu bermatu,
ongizatea maitez
oro ziurtatu,
lan gutxiago egin
bizitzaz gozatu,
kulturan aberastu
kirolean batu.

Euskal sozialismoak
dio “auzolana!”,

batera konpartitu
jaia eta lana,
hemen klaserik gabe
bizi da afana,
onuran oinarritu
giza harremana.

Elkartasun hitza da
herrien azala,
eskaini eta jaso
fereka zabala,
gabeziak zentzuak

desager ditzala,
abian jar dezagun
internazionala.

Maiatzaren lehena
mezua da gorri,
kontsumismoa utzi,
adorez etorri,
pozez entzun zaitugu,
txortxor txantxangorri,
ilunabarra dator
galanki oskorri.

*2010eko maiatzaren 5ean*

*123*

**Drogen aurretik jar ezazu bizitza**

Haurren jolasak utzi dituzu
gaztaroan murgiltzeko,
helduen sona arnastu duzu
nortasuna hauspotzeko,
prest zaude dena ezagutzeko
gogo betez dastatzeko,
nerabezaro aspergarria
berehala baztertzeko.

Irentsitako ipuinetatik
zenekusan jendartea,
erakargarri baitzirudien
nagusien zonaldea,
praka luzeak jantzi dituzu
saihesteko mugaldea,
amestutako ilusioak
itxura du dotorea.

Dena eskura duzu aurrean
hartu eta ondoratu,
kontsumismoak sorgindu zaitu
grinatsuki harrapatu,

bart drogek utzi zaituzte larri
kolpe batez azpiratu,
askatasuna zirudienak
goitik zaitu izorratu.

Paradisuan arituz gero
hainbestean jolasean,
Mendekotasun jaunarekin bat
egin duzu tupustean,
goxoa mikatz bilakatu da
osasuna ahultzean,
amaren negar atsekabea
nabaritu duzunean.



Zorabiatuta zaude zoruan,
garunean zart barautsa,
drogen dirua bankuan dago
pagotxa da “zeure” hautsa,
hola bizitza bihurtu duzu
eldarnio zoro hutsa,
zaindu etxeko odol gorria
ez ezazu sorgor kutsa.

Ikasi behar duzu bizitzen
drogen zolan duin aisian,

baina ez zaitez ezkon eurekin
tristuraren lagundian,
adiskiderik ez dago droga
berekoien aldirian,
alaitasuna jori daukazu
harremanen emarian.

Milaka gazte dago munduan
amilduta kerietan,
mozkorraldian gaizto itota
ustelduta kartzeletan,
laburregia ohi da bizitza
hondatzeko liluretan,
alkoholekin zatartzeko maiz
asteroko gaupasetan.

Bizitza azkar ibili baino
antolatu zur bidaia,
ez zaitez minez gal sasietan
bide ona da garaia,
zoragarria baita maitea,
egunsenti txit lasaia,
iluntze oro magikoetan
laztan goxo baten nahia.

*2010eko maiatzaren 11n*

*124*

## Hamar urtebetetze eta amets bat

Kartzelan dena hamar
bihurtzen denean,
askatasuna duzu
zain oroimenean,
irudi kuttunenak
datoz lasterrean,
arintzeko nekeak
ilunabarrean.



Malenkonia dabil
hemen batzuetan,
buruan aztarrika
malkoen mugetan,
arnasa sakon hartzen
dut halakoetan,
zeurekin elkartzeko
garai alaietan.

Irudimena doa
xaloki mendira,
biluzik gauerdian
erreka garbira,

espetxe ilunetik
izarren argira,
zu maitagarri zauden
zelaiko hegira.

Hemen nago maitea
eremu hitsean,
zugandik lar urruti
zorion eskean,
gogoratuz zirriak
zeure ohorean,
irrifar maitekorra
aho ederrean.

Osteratxo bat daukat
gogoan gordeta,
han hasi zen garatzen
geure belar-meta,
zoragarria izan da
biribilketa,
bihotzak pil-pil darrai
zirraraz beteta.

Zu lotan lasai zeunden
eta ni begira,

zenirudien polit
goizeko distira,
gozoro erakutsi
nizun neure mira,
ametsak erakarriz
xuxurlen habira.

Iraganetik dator
geroko asmoa,
fruitua izango da
zuhaitz berekoa,
maiatzean heldu zaigu

gerezi goxoa,
elikatzeko leun
laztanen zoroa.

Hamar urtebetetze
jada deserrian,
ospatuko nituzke
zurekin herrian,
gaur ez dago katerik
kartzela larrian,
"Zorionak" entzun dut
ezti belarrian.

*2010eko maiatzaren 19an*

*125*

## Mariren mendiaren irrintzia

**- Ikusten duzu goizean -**

Aizu ni zu baino lehen
garatu nintzen behin hemen,
halabeharrez izan zen,
lurraren zola ikaratuta
behetik gorantz nabarmen,
izadi dena ondoren
hasi baitzen aberasten,
aniztasuna zabaltzen.

Ni naiz Mariren mendia,
bere etxalde handia
irrintzien durundia,
gauza bat argi esango dizut,
entzun adi arrazoia,
ez dut maite zure lehia,
ni konkistatzeko nahia
goratzeko putz bisaia.

Ez bilatu ohorerik
neure kontura alferrik,
hemen ez dago demarik,
begirunez har nazazu arren,

bizipozaren hegitik,
harrotasunen gainetik,
nire baitan uztarturik
senti zaitez sariturik.

Goian duzu miraria
izadiaren talaia,
gaurko goiz argi dirdaia,
goza nazazu baina osoki,
ikusi troka garaia,
nire lilien zelaia,
alboan haritz tantaia,
eta pottoka deslaia.



Hobe bazatoz goizean
eguzkiaren bermean,
oskarbi dagoenean,
eta ez ilun nagoenean
tximisten mehatxupean,
horrela diharduenean,
jardun mendi leunean
inguru ezagunean.

Hiriko gazte kutuna
zaindu nire osasuna,

gorde nazazu txukuna,
zaborra jaso eta eraman
ziurtatzeko, laguna,
biharko etorkizuna,
arbasoen ondasuna,
betiko edertasuna.

Behar nauzu bizitzeko,
gorputza elikatzeko,
arima poz sentitzeko,
nire larruan daude sustraiak,
geroa ez birrintzeko,
laztan nazazu sortzeko,
izadia osatzeko
eta ez ni hondatzeko.

Itzuli adiskidea,
gozatu mendialdea
hobetzeko jendartea,
eguneroko ongizatea
arnasten duzun haizea,
ekarri zeure maitea,
taupaden eragilea,
udaberriko lorea.

*2010eko maiatzaren 25ean*

*126*

**Betikotasuna zelaian**

Hil direnak han dautza
errautsen habian,
firi-firi diraute
joan-etorrian,
heriotzean pausa
nazazue goian,
hautsak pozez zabaldu
mendiko zelaian,
Ama-Lurraren baitan
Ortziren azpian.

Arrateko bazterrak
txit abegikorrak,
zatozte bare gora
miretsi tontorrak,
zain itzazue adei
errautsen alorrak,
bertan dira multzoka
joan ziren jatorrak,
gure bihotzetako
lagun maitekorrak.

Belardiak ihintzez
janzten direnean,
zirrara sentitzen dut
errautsen bidean,
bizitza arin doa
zart aida batean,
geroan elkartuko
gara arratsean,
zaudeten esparruan
garoen artean.

Zuen aurrean nago
hau ikuskizuna!
Txundituta dakusat
esnatzen eguna,
gauean bizi izan
dut isiltasuna,
ilargi betearen
dotoretasuna,
hala izan dadila
betikotasuna.

Liliek gura dute
zuen eremua,
nabarmen handitu da

euren kopurua,
lurrinak gozatzen du
horko ingurua,
txoriak ari dira
laztantzen zorua,
belardian etzanda
alai dut burua.

Jaio zena zendu da
atseden hartzeko,
erraustu behar dute
nahia betetzeko,

azpigeruza bat da
lurra osatzeko,
euskarri bat zelaia
lorez edertzeko.

*2010eko ekainaren 2an*

*127*

## Kirolari izan zaitez euskaldun

**- Habanera -**

Ospea duzu jomuga
kirolaren lurraldean,
dena eskaini diozu
giharrak trinko soinean,
egundoko balentria
lortu duzu azkenean,
aurtengo denboraldia
joan zaizu sasoi betean,
euskal kirola goratuz
agertu zara geurean,
laztanak sutsu banatuz
denoi udaletxean,
Paris edo Madrileko
deia jaso duzunean,
berehala irten zara
hango aintzaren eskean.

Kirolari, atseginez
hartu dituzu zirriak,
harro aupatzen zaituzten
agintarien irriak,

arrakasta ekarri du
garaipenaren berriak,
horrela aitortu zizun
atzo txaloka herriak,
gaur eztitzen diharduzu
handikien belarriak,
konpartituz lortutako
emaitza zoragarriak,
presidente horrek dauzka
erantzukizun larriak,
euskaldunen baratzean
ezarri ditu harriak.

**246**

Nia ederki hauspotu
duzu kamaren aurrean,
Euskal Herria ukatzen
dutenen aldamenean,
ez da erraz izan behar
muzin egin bat-batean,
hainbeste goresmenekin
saritzen zaituztenean,
ezin zara euren alde
izerditu jardunean,
zeure nortasuna gaizto
hondatu nahi dutenean,

Estatu zapaltzaileen
kontra ekin lasterrean,
arbuiatu jazarleen
dominak aurrerantzean.

Izan zaitez kirolari
ariketetan kemendun,
lehiaketen eremuan
ikuslearentzat txukun,
lehiakideentzat oro
xume eta lagun kuttun,
eta batez ere maitez
izan jatorki euskaldun,
zazpiak bat ehuntzeko
nekaezinezko jostun,
Mundu xalo baten alde
gidari guztiz bihoztun,
euskararen pizkundean
ezinbesteko oihartzun,
geure umeen eredu
berebiziko txapeldun.

*2010eko ekainaren 8an*

*128*

**Elorrioko Gaztetxea 25 urte herrira begira**

Gaztetxe, aurten danga
zaitugu omentzen,
hogeita bost zorion
zurekin ospatzen,
Elorrion ari da
giroa gaztetzen,
herritarren gogoa
ametsez apaintzen.



Udalaitz bezain sendo
darrai Gaztetxeak,
Anboto bezain bizi
gabiltza gazteak,
ederrak dira geure
mendien haizeak,
beraiekin freskatu
ditugu kaleak.

Ideien trukaketak
zeure txokoetan,
hamaika hartu-eman
ekitaldietan,

alaitasuna naro
rock jaialdietan,
artea pil-pilean
erakusketetan.

Neskak eta mutilak
eremu berean,
arkeria zorrozki
baztertuz airean,
dena alda daiteke
azkar jendartean,
oinarrituz bizitza
berdintasunean.

Kontsumismoan dago
berekoikeria,
bere amaraunean
zain ergelkeria,
kanpoan utzi dugu
zintzilik keria,
auzolanean aise
doa gazteria.

Euskara hemen jori
dabil mingainetan,

nortasunak ehuntzen
ditugu hizketan,
Gaztetxeko harriak
pozarren hormetan,
arbasoen arimak
goxo Arginetan.

Intsumisoen zola,
gazteen egoitza,
presoen oihartzuna,
zapalduen hitza,
erasoen aurrean
zu zara harkaitza,
babesgune aparta
guztion haritza.

Etxe, sexu, lan, droga,
tira eta tira,
gazteen kezketatik
herrira begira,
hogeita bost urtetan
jira eta bira,
bihotzetan piztu da
zuganako mira.

*2010eko ekainaren 10ean*

*129*

## Futbola gaitzetatik askatu

**- Habanera -**

Hegoafrikan hasi da
futbola ozen abian,
azkar ahaztuko dugu
krisi hitza kontzientzian,
futbolariak ohituraz
listu egin du zelaian,
jokaldiaren harira
hamaika lagun ezbaian,
Estatuek dihardute
burubero, harro lehian,
herri zapalduak utzi
dituzte gaitz atarian,
aberatsa erraz dabil
futbolaren lagundian,
txiroak urruti daude
baztertuta aldirian.

Futbola eskertzen duzu
ziegako bakardadean,
oro harrapatzen zaitu
kirolak bere sarean,
guk bakarrik dakusagu

baloia sartzen atean,
tamalez estaltzen ditu
zakarkeriak barnean,
dirutzak banatzen dira
ero izarren artean,
salgai da futbolaria
kluben atzaparren pean,
futbol zelaien luxua
nahi dut txabolen lurrean,
elkartasunaren zolan,
kulturaren alorrean.

**252** Gorrotorantz bideratu
digute zaletasuna,
liskarraren eremua
da orain ikuskizuna,
arerio da guretzat
arbitro ezezaguna,
egiten ari delako
beraren betekizuna,
lanean erreta eman
eta gero asteguna,
harmailetan kanporatzen
dugu gure behazuna,

ez ezazu etsai bihurtu
beste taldeko laguna,
aisia gozatzeko da
eutsi zut jendetasuna.

Irabazpide denetik
bihotza du ustelduta,
iruzurti handienak
futbolean daude sartuta,
gurasoek dute ere
inbertsiotzat hartuta,
gaiztotu dira jolasa
haurren behar bihurtuta,
futbola osatu nahi dut
gaitzetatik askatuta,
xalotasunez eraiki
herriekin eratuta,
oihuka dezagun pozez
gol, gatazkak konponduta,
Afrikako lurraldetik
gosea ezabatuta.

*2010eko ekainaren 16an*

*130*

**Eguzkiaren solstizioan**

Jentilak bildu dira
natura gurtzeko,
gaurik motzena dantzan
alai ospatzeko,
soro garaian daude
sua prestatzeko,
abar eta zatarrak
dituzte sutzeko,
espiritu gaiztoak
sutan kiskaltzeko.



Gaualdi ederrean
erre handinahia,
kontsumismoa eta
berekoikeria,
etor dadila bizi
eguzki berria,
garretan suntsitzeko
arau hilgarria,
zigortzen ari dena
gure aberria.

Sortaldetik dirdaitsu
dator amandrea,
agurtzeko adeitsu
ilargi barea,
leunki laztandu du
Eguzki-lorea,
babes dezan irmoki
Izadi maitea,
solstizioan Eki
oro da betea.

Goiz-argian etzanda
nasai belardian,
ihintz tantak igurtzi
goxo soin gurian,
antzinako ohituren
laguntza eztian,
izpilikuaz lurrin
zaitez iturrian,
garbitu aje denak
samur aurpegian.

Gurutzatu oinutsik
erreka naroa,
ur gardenetan hausnar
ezazu geroa,
biluzik besarkatu
estuki pagoa,
ferekatu haritza
sentitu beroa,
bizirik irauteko
daukaten gogoa.

Solstizioak ekar

dezala argira,
suan jauzi zegiten
jentilen desira,
"eraman izadia
jatorki hirira,
eta ez hiri dena
zital izadira",
dio zuzen Eguzkik
ortzitik begira.

*2010eko ekainaren 22an*

*131*

## Utz ezazu tabakoa

**- Habanera -**

Zigarroa izaeraz
ezarrita ezpainetan,
lasterka barneratu da
nikotina biriketan,
kea bota duzunean
sartu zaizu begietan,
ia zorabiatu zara
arbolaren adarretan,
helduaroa nahi duzu
erakarri erreketan,
burua goratu harro
nagusien giroetan,
izango duzu astirik
aspertzeko zigarretan,
ez erre bidegabeki
nerabezaroa ketan.

Aktoreen ke grisaxkez
liluratuta filmetan,
tabakoaren segadan
erori zinen gaztetan,

maisuki zenerabilen
zigarroa tabernetan,
izar handi bat zinela
uste zenuen benetan,
orain ezin duzu erre
orduko aterpeetan,
nabaritzen duzu herra
batzuen begiradetan,
lurperatu eta gero
dirutza bat errautsetan,
dotorezia galdu da
goibel kale gorrietan.



Nikotinaren lanbroa
ez da atzo goizekoa,
Ameriketan hasi zen
biribil bere aroa,
harremanetan izan da
akuilagarri xaloa,
adiskidetasunaren
lur abegikor sendoa,
lasaitzeko ondo dator
tabakoaren hostoa,
tamalez maiz gaixotzen da
erretzaile gizajoa,

makina batek utzi du
pozez morrontza gaiztoa,
gainerakoek darraite
topa ezinik zuloa.

Kea irentsi bakea
justiziaz hitzartzeko,
baina ez pipatu, arren,
karkasekin itotzeko.
Aurreztutako dirua
erabili bizitzeko,
egoki elikatzeko,
osasunaz gozatzeko,
utz ezazu tabakoa
Estatuak kaltetzeko,
gura ez gaituztenei
zergarik ez ordaintzeko,
gure herriko beharrak
ganoraz sostengatzeko,
gogoa besterik gabe
askeago sentitzeko.

*2010eko ekainaren 29an*

*132*

## Amets bat darabilzu mitxoleta

Zinez gurtu zintuzten
ume zinenean,
maitasunez laztandu
zirrien larrean,
bezeroen lerdeak
jasanda lanean,
goibel oroitu duzu
bart bakardadean.

Bihozgabe ankerren
salgai bihurtuta,
sasietako lili
zara prostituta,
zure sexuarekin
irritsa hustuta,
alboratzen zaituzte
zakar irainduta.

Puta deitzen zaitugu
amorruz beteta,
neska bat zarenean
bizitzan erreta,

sortu izan bazina
hemen mitxoleta,
mereziko zenuke
guztion arreta.

Bidegabekeriak
zintuen ekarri,
herria utzi zuen
oro larrigarri,
Europak zirudien
hain erakargarri,
ez zenuela garaiz
segada igarri.

Arkeriaren mina
duzu hankartean,
tamal erori zinen
proxeneten pean,
morrontza sexualean
ari zarenean,
ama negarrez dago
zure barrenean.

Ia larrugorritan
barraren ertzean,

begi ederrak dir-dir
irrifar hitsean,
gaztetasuna duzu
jarri galbidean,
irabazpide zara
gaueko klubean.

Larru hori-zurixkan
hamaika gaupasa,
drogekin hartzen duzu
sarritan arnasa,
geroa dakusazu
erabat narrasa,

baztertu nahi zenuke
arin anabasa.

Amets bat darabilzu
biraka andrea,
justiziaz jantzi da
gure jendartea,
lurpean datza zirtzil
zure oinazea,
zeu zara zoragarri
soinaren jabea.

*2010eko uztailaren 6an*

*133*

## Perla uhartean erbestetuta

**- Ikusten duzu goizean -**

Ahalmena murriztuta,
neurriz at baztertuta,
naukate deportatuta,
herri berri bat ezagutu dut
arrainez inguratuta,
kresalaz zipriztinduta,
eguzkiaz edertuta,
izadiaz apainduta.

Unea zenez larria,
egin zuten aldarria,
pizteko hauskarria,
hamaika lagun elkartu ginen
ekimen hunkigarria,
jaso nahian euskarria,
urrundu zait aberria,
ondore nekagarria.

Izar loken orduetan,
zebiltzan inguruetan,
armak zital eskuetan,
ordutik nabil etxetik kanpo

ostenduta sasietan,
zanpatuta gehienetan,
trabatuta urteetan,
erbesteko kateetan.

Euskara lo bihotzean,
maiteak oroimenean,
argazkien azalean,
ez da errazik erbestetuta
bizi alaitasunean,
oldoztuz Ama-Lurrean,
datorkit bakardadean,
 negargura lasterrean.

Herrimina lainopean
ilunki datorrenean
oihu bat dantzut haizean,
biziko zara Euskal Herrian
eskubideen bermean,
pozik askatasunean,
atseginaren bitsean,
anai-arreben artean.

Aiseki osteratxoan,
zuhaitzaren abaroan,
izan zintudan gogoan,

azken laztana dastatu nuen
begiak ixterakoan,
nagoenetik kanpoan,
eztiki zaude ondoan,
akorduaren altzoan.

Hondartzan nabil goizean,
marraztuz itsasertzean
itxaropenak harean,
bertakoei adierazteko,
"zazpiak bat" ehuntzean,
gura dugula bakean,
altxatu aida batean,
Mundua elkarlanean.

Hemen nago aspaldian,
itsasoaren erdian,
"Perla" uharte handian,
olatuetan soa jarrita
zoriontsu malekoian,
ikusi dut goiz-argian
jarri dugula arian
etorkizuna abian.

*2010eko uztailaren 14an*

*134*

## Izartxo berdeak ehuntzen dihardu

Jabetza behar dugu
aske izateko,
euskaldunak garela
jator esateko,
euskaraz barra-barra
nonahi egiteko,
elkartasun onbera
jori ereiteko.



Denok zabaldu dugu
gogoz albistea,
plazan irabazi dut
arinki ospea,
antzinarotik zara
kultur ondarea,
zortzi punta dituzu
izartxo berdea.

Etorri zara dirdai
herria batzeko,
ibili behar dugun
bidea lautzeko,

datorkigun geroa
zinez argitzeko,
bihotzetako mintzak
sakon hunkitzeko.

Izadiarena da
zeure kolorea,
argiaren distiraz
oro dotorea,
zelaian edertzen du
biziki lorea,
itsasoan arrainek
dute ohorea.

Zu zara bertakoen
ametsen ikurra,
lortu duzu zintzoki
presoen agurra,
berdez jantzita polit
dago geure lurra,
hor ari da dardarka
herrien lapurra.

Estatuek azaldu
dute ahulezia,

izar orlegiak du
birrindu hesia,
kontzientziak astintzen
dauka trebezia,
aise dabil kalean
ikur berezia.

Arranoek abarrez
dagite habia,
goian daukate lirain
euren sorterria,
izarrak hartuko du
zehazki haria,
ehuntzeko maisuki
arbasoen nahia.

Burujabetasuna
josi du izarrak,
hala daramatzate
gazteek paparrak,
desioz blai dabiltza
lurralde zaharrak,
sentitzeko larruan
toparen aparrak.

*2010eko uztailaren 20an*

*135*
**Itzul zaitez Udalbiltza**

Udalbiltzaren hitza
Udalen biltzarra,
auzolana sendotu
oraingo beharra,
elikatuz ganoraz
Amaren giharra,
berreskuratuko du
herriak indarra,
ezabatzeko behingoz
mugarri zabarra.

Epaitzen ari dira
geure abaroa,
epaitegian dabil
ozen berbaroa,
zikindu gura dute
egia naroa,
estali herriaren
meta oparoa,
itzal dadila laster
zigorren aroa.

Gezurrekin zintuzten
baztertu lotuta,
adierazpena duzu
oro ukatuta,
kardantxilo hor zaude
kaiolan sartuta,
txistu egizu txio
papoa puztuta,
aske bizi direnak
bezain hanpatuta.

Atsegina piztu zen

jaio zinenean,
aberria uztartu
itxaropenean,
gardenki nekuskien
irudimenean,
Aturri eta Ebro
lurralde berean,
“Zazpiak bat” bilduta
elkartasunean.

Gorri, berde, zuria
zeure nortasuna,
mamitsua izan zen
orduko jarduna,
aurkeztu eta gero
iradokizuna,
hautetsiek zirt zuten
argitu iluna,
osatzeko maiteki
euskal batasuna.

Itzul zaitez plazara
astindu arbola,
kraskatzeko leunki
ametsen oskola,
erabili berriro
udaleko zola,
gal dadin inguruan
dugun zirimola,
eraikitzeko txukun
euskaldunen ola.

*2010eko uztailaren 26an*

*136*

**"*La Roja*" eta gu**

**- Habanera -**

"*La Rojak*" Hegoafrikan
kopa jaso eta gero,
"piper-potoak" atera
zituzten gauean ero,
bazterretan elkartu zen
makina bat ahobero,
ezin zezakeen atzo
hemen besterik espero,
propaganda egin zuten
futbolaz kar egunero,
"nazio bakar bat gara",
goraipatu ozen, bero,
komeni ez zaigu izan
Estatu horren bezero,
euskaldunok anabasa
hortan etekinik zero.

Frankisten oinordekoek
zituzten poz kaleratu,
"*La Rojaren*" kamisetak
banderak zintzilikatu,

espainolen batasuna
zuten zitalki aupatu,
udal batzuen laguntza
oso merke baliatu,
geure jabeak direla
ziguten harro aipatu,
ezingo dugula inoiz
Euskal Herria askatu,
orain kasernetan daude
gauak ditu menperatu,
egunsentirako dugu
irria berreskuratu.

Ergelki txalotu duzu
"*La Rojaren*" garaipena,
euskaldunen aitzakiaz
galdu duzu adimena,
Estatuko telebistek
sartu dizute eztena,
odolean dabil zikin
grina antzuen edena,
taldeak jaso dezala
alaiki ohore dena,
ospa dezatela eurek
merezitako omena,

guk hemen bultza dezagun
herriaren garapena,
gure sorlekuarentzat
etorkizunik onena.

Euskaldun batzuek dute
"*La Rojarekin*" jokatu,
Madrilgo zeruan gogoz
apar eztia dastatu,
ez ditugu zut goratu,
ezta ere maiseatu,
hango gurtzekin konforme

beharko dira geratu,
zorionez ez gaituzte
futbolarekin banatu,
zentzuak gaitu lagundu,
egia digu altxatu,
futbolaz gain gura dugu
aberri hauxe maitatu,
kirol ororen aurretik
euskaraz aske mintzatu.

*2010eko abuztuaren 3an*

*137*
## Belaguako oporrak gogoan

Udako oporretan
ibilki artzaina,
Belaguan arnastu dut
ardien usaina,
xehe orrazten dute
belardi apaina,
Erronkariko gazta
ohituraren zaina,
izan dadila hemen
geroa bikaina.

Unaia txakurrekin
adi mendipean,
Lakartxelan dabiltza
behiak zurt larrean,
udan gordintzen dira
eremu askean,
langintza hau nahi dugu
etorkizunean,
mendia bizi dadin
oreka barean.

Euskaraz laztan dagi
Belaguan mendiak,
halaber basetxeak
eta pagadiak,
arduraz ari dira
gaurko gizakiak,
pizteko arbasoen
eleta guriak,
ikas ditzan maiteki
haur jostalariak.

“Gorria” bordatxoa
hau bai gozamena!
Eguraldiak hala
emanda baimena,
har dezakezu bertan
ongi atsedena,
bere barnean lantzen
dut irudimena,
espeak senti dezan
neure mirespena.

"Gorriatik" dakuskit
mendi ezagunak,
ibar atseginaren
gailur ahaldunak,
agurtzen ditut baso
oparo ilunak,
putre arranditsuen
hegaldi urrunak,
ibaiak dakarzkidan
gurgur txit leunak.

Belaguako zeruan
izarrak dirdaiki,
Lakoraren gainean
ortzia lasaiki,
Artizarrak keinuka
dihardu alaiki,
ilargiak oro du
argitu nasaiki,
zilarrez zipriztindu
erreka galaiki.

*2010eko abuztuaren 10ean*

*138*

**Herrizaina euskal herriarentzat**

“Ez antolatu poliziarik
etorkizuna hiltzeko,
menperatuta aurkitzen dena
areago zapaltzeko”.
Esan du ozenki Euskal Herriak
egoera salatzeko.
Apal birsortu nahiko genuke
jendartean uztartzeko,
gure herriak ehundu duen
esperantza goratzeko.



Alaiki hazi zinen poxpolin
auzoko lagunartean,
mutil zintzo bat zenirudien
gaztaroko anartean,
azken urtean nahastu zara
uniformeen artean,
harrotasuna hedatu zaizu
nabarmen begitartean,
orain zabiltza itsumustuta
Estatu gaitzen partean.

Langilearen bizkarra duzu
gupidagabe urratu,
jabearena ohi den bezala
nahikariaz ferekatu,
atzo euskara lotsagabeki
zenuen lar mesprezatu,
gure herriko kultura zatar,
baldarki madarikatu,
zeure sen ona erabat galduz
gorrotoa besarkatu.

Gutxi batzuen nahiak dituzu
basakeriaz bermatu,
berriro zara euskal presoen
argazkietan tematu,
denak erauzi nahi zenituzke
oroimena ezabatu,
dudarik gabe lan txukun bat da
senideak umiliatu,
entzun ezazu asteburuan
behar dutena pairatu.

Bankariek nahi zaituzte morroi
etekinak handitzeko,
Parisek eta Madrilek sorgor
Estatuak gotortzeko,
jendarme, foral edota ertzain
garaia da aldatzeko,
behar zaitugu eredugarri
herriari laguntzeko,
auzolanean zelai zaharra
zoragarri edertzeko.

Irudimena jori dabilkit
udaldiko iluntzetan,
garden dakuskit etzidamuko
herrizainak kaleetan,
uniformerik gabe dabiltza
ardura ezberdinetan,
ongizatea erdiesteko
bizitzaren zuztarretan,
maitez zaintzeko askatasuna
zazpi alaben soinetan.

*2010eko abuztuaren 25ean*

*139*

## Eibarko Santakurutzen

Bazter eder bat dugu
Eibarko aldean,
leku zoragarria
udako partean,
Arrate dago hurbil
Urko eskuinean
Otaola aurrean
Usartza atzean.

Bi bailara, Gorosta
eta Mandiola,
gainean Santakurutz
bihotzaren ola,
bulkada bat izan dut
nik ez dakit nola,
Matsaritik igo naiz
xingola-mingola.

Iturrian gogoz dut
burua freskatu,
zurrut luze bateaz
ahoa gozatu,

zelaian jarrita zait
bularra hanpatu,
ikusmirari esker
naiz txit liluratu.

Santakurutzen dabil
gozoro haizea,
eguzkitara nago
mendiei beha,
begientzat hauxe da
atseden barea,
naturaren opari

on eta merkea.

Eibarren geratu da
astun kutsadura,
hona hel ez dadila
guztion ardura,
zeurekin sentitzen dut
gogoan onura,
zokoratuta dago
hemen arrangura.

Eibar etzanda dago
Egoko arroan,

baseliza zuria
zelaiko muinoan,
beraren kerizpean
nago lozorroan,
jentil duinak dakuskit
ametsen jokoan.

Kristautasunak zion
izena aldatu,
antzinako izana
zorrotz eraldatu,
jentilek izadia
zuten ohoratu,
eurek bezain kartsuki
nahi nuke maitatu.

Eguzkia gorde da
mendien lerroan,
iretargia dago
zeruko txokoan,
“gaua gauekoentzat”,
entzun dut alboan,
ilunak Santakurutz
bildu du altzoan.

*2010eko abuztuaren 17an*

*140*

## Maitearen azken nahia

Elkarrekin ibili
dugu maitasuna,
zu izan zara neure
oparotasuna,
egunero zain neukan
zoriontasuna,
gaztetatik maitale
halaber laguna,
sua konpartitzeko
kideko kutuna.



Atzo bertan eskutik
geunden oratuta,
bakarrik geratu naiz
malkotan urtuta,
geroa zait agertu
goibel, nabartuta,
zu gabe sentitu dut
logela histuta,
noraezean nabil
nahimena hustuta.

Urrundu dira poza
eta umorea,
isilik dago oro
habia barea,
laztanik gabe lehor
zirrien sarea,
ez zait erreza izan
gordin ikustea,
nirekin ez zaudela
ohean maitea.

Heriotza zegoen
ilargi betean,
lasai hil zinen neure
besoen artean,
gorpua hoztu eta
zurbildu zenean,
atsekabea hazi
zitzaidan barnean,
musu bat eman nizun
azal leunean.

Doia izan zen azken
nahia ezpainetan,
buruan daukat tinko
egunsentietan,
"negarrak utz itzazu
biharko hiletan,
ez zaitez hondoratu
gogo ilunetan,
alai bizi nahi nuke
zure ametsetan".

Adoretsu betetzen
ari naiz desira,
igo gara poliki
gustuko mendira,
goxo zaude bihotza
bertatik begira,
lilurak garamatza
geure belardira,
maitemina piztu zen
lurrinen tokira.

*2010eko abuztuaren 31n*

*141*
**Kirikino basoan behar zaitut**

Bizkarra apainduta
dauka orratzekin,
buru biribildua
begi txikiekin,
basoan bizi nahi du
beste gautarrekin,
kirikinoa dabil
hanka laburrekin.

Kirikino uzkurtu
zara izututa,
usaindu nauzulako
zaude estututa,
morkotsa dirudizu
gorputza batuta,
arantzen ertz zorrotzak
gorantz luzatuta.

Gordelekutik kanpo
aise gauerdian,
laster ariko zara
ohiko ehizaldian,

zizare bat sumatu
duzu pagadian,
kumeak asetuko
dira goizaldian.

Udaran behar duzu
ongi elikatu,
negu partean aldiz
lotan hibernatu,
intsektuak dituzu
trebe harrapatu,
irentsi baino lehen
gozoro dastatu.



Indusgailuak lohi
utzi du aldapa,
ikusi eta hasi
zara tipi-tapa,
hondamenekin gehitu
zaizu bero sapa,
lurra bihurtuko da
porlan eta txapa.

Diruminak kaltetu
du kirikinoa,

gerturatu dio gaitz
kotxeen lainoa,
izaki hau izan da
geurekin lañoa,
oreka zaintzen dabil
mendian ñañoa.

Kumeak inguruan
hor zoaz bidetik,
sorlekua utzita
izotzen aurretik,
goitik moztu dutenez
zoazte behetik,
errepiderik ez den
egingo aldetik.

Lasai bizi zaitezen
sasitik sasira,
eramango zaituztet
izadi garbira,
kirikino zuzendu
soa ilargira,
senti ezazu sakon
gaueko pilpira.

*2010eko irailaren 8an*

*142*

## Alfredotarrak haserre daude

Alfredotarrak daude
erabat haserre,
kalean deritzogu
horri bihotzerre,
euskaldunok ditugu
arrazoiez erre,
euren gezur guztiak
bihurtu hausterre,
mutu geratuko da
hainbat ipurterre.



Rodolfori zimurtu
zaio aurpegia,
aditu duenean
ozenki egia,
geroa datorkio
lar ilunegia,
itzaliko diote
aginte-tegia,
gatazka bukatuko
dela alegia.

Gatazkaren lurrean
zebiltzan aisian,
dirutu ziren lepo
bortxaren lohian,
Estatuak urduri
daude aspaldian,
herria berriz hasi
delako abian,
lege bidegabeak
uzteko sasian.

Erabaki zuzena
dute arbuiatu,
ekintzen etendura
zital deitoratu,
ez dute nahi maltzurrek
zelaitik aldatu,
errepresioaren
arma lurperatu,
berbaren alorrean
borroka jokatu.

Txibertan arduratsu
zuten proposatu,
urteetan sarritan
jator plazaratu,
gatazka nahi dutela
demokratizatu,
esperantzekin gure
lurra inguratu,
Euskal Herria denon
artean askatu.

Hego-haizeak ditu
laztandu haritzak,
Kantauri itsasoak
kostaldeko haitzak,
joan direnentzat maitez
lehenengo hitzak,
"zuenak dira oro
oraingo emaitzak,
izango dira ere
biharko garaitzak".

*2010eko irailaren 14an*

*143*

**1975: Irailak 27**

Herra ikusi zenuten
frankisten begietan,
mendeku basa sentitu
suntsitzaile soinetan,
zuen irudiak zeuden
zazpi lurraldeetan,
egunero zenbiltzaten
gurekin taupadetan.

Hogeita hamabost urte
gure baitan gaurkoan,
irailak hogeita zazpi
iltzaturik gogoan,
Francoren azken hozkada
gudarien ildoan,
herria sutu zen zuek
fusilatutakoan.

Goiz argiak zekarkigun
zerua nabartuta,
arimak samindu ziren
bortizki kolpatuta,

Txiki eta Otaegi
hilik odolustuta,
FRAPeko kideak ere
zital tirokatuta.

Helikopteroa erne
herria zelatatzen,
guardia zibilak kasernan
atzaparrak prestatzen,
urratsak errepidean
hilketak deitoratzen,
aurpegiak estalita
egia kaleratzen.



Iluntzean handitu zen
negarra herrietan,
irainaren amorrua
piztu zen bazterretan,
bost anaiak gorpu zeutzan
frankisten eskuetan,
bizirik zeuden dirdaiki
gaueko liskarretan.

Lanuzteak orokortu
ziren ingurunean,

barrikadak eta sua
frankisten aitzinean,
Europan elkartasuna
biderkatu zenean,
Francoren harrotasuna
galdu zen ezinean.

Zarautzen eta Nuarben
bi ama zutituta,
bihotzak zituzten eri
frankistek ziztatuta,
semeen aurrean zeuden
erabat hunkituta,
erkideen ukabilak
alboan goratuta.

Haizean darabilzue
leun askatasuna,
mendien eta haranen
biharko ontasuna,
gure aberriarentzat
zarete maitasuna,
gudarien egunean
denon argitasuna.

*2010eko irailaren 21ean*

*144*

## Inkisidoreak dabiltza epaitegian

“Justizia lokabe da”,
esan du sailburuak,
agurtzerakoan bero
asteko debekuak,
justiziak darabiltza
bitarteko estuak,
herriak zigortzen ditu
saritzen Estatuak.



Inkisizioa aise
Madrilgo azalean,
duela lau mende bezain
era dohakabean,
Auzitegi Nazionala
ehizan dabil geurean,
abertzaleak nahi ditu
lotu kate motzean.

Dominikoek eliza
zuten txar baliatu,
Konstituzioa dute
epaileek dantzatu,

bien asmoa berbera
zikoitzak sostengatu,
Estatuen interesak
gogorki kudeatu.

Ziburun, Zugarramurdin...
jauntxoak gezurretan,
“sorginak dira“ esanez
erre zituzten metan,
Parisen eta Madrilen
hamaika epaiketan,
gatazka hauspotzen dute
bakearen kaltetan.

Lancrek garrekin izutu
zituen euskaldunak,
Marlaskak jazartzen ditu
zital gure lagunak,
biak euskal herritarrak
deabruen zaldunak,
botereak behar ditu
begitarte ilunak.

Orduan emakumeak
zituzten beheratu,

jentilen usadioak
errotik kanporatu,
orain nahi dute bortizki
esperantza zanpatu,
aberriaren geroa
autoekin galgatu.

Orduko dominikoak
dira gaur epaileak,
errege zapaltzaileen
morroi paregabeak,
"terroristak dira" dio
gaizto lotsagabeak,
konponbide zuzenari
hausteko zutabeak.

Laster ikusi nahi nuke
Justizia gardena,
epaitzeko status quo
hiltzaile alaena,
zuhaitzaren inguruan
bilduta jende dena,
ondratzeko torturatu
dituztenen izena.

*2020eko irailaren 28an*

*145*

## Bihotz gorria osatu da

Espea itotzen da
herra arnastuta,
luzaro zigor-gelan
antsiak herstuta,
estresak jipoitzen du
loa lapurtuta,
sosegua kenduta
sasoia hustuta.

Zure bihotz gorria
uzkurtu da larri,
kartzelak dakarkigu
ondoeza sarri,
begitarteak digu
garaiz iragarri,
ziztadak dizu soan
tristura ezarri.

Zain bat butxatu zaizu
kartzelak erreta,
min duzu bularrean
bustirik kopeta,

merezi duzulako
guztion arreta,
gura zaitugu lerden
zutik betaz beta.

Ospitalean zaude
lar arduratuta,
alboan poliziek
zaukate lotuta,
irudikatu duzu
ama kezkatuta,
lasaitu nahi zenuke
eskuak hartuta.

Egunero zabiltza
hormatzar hauetan,
bizitza hobetzeko
ahaleginetan,
bihotzekoak zaitu
utzi zalantzetan,
sendabidea duzu
geure besoetan.

Zin dagizu ohean
gorputza zaintzeko,

geroarekin zindo
ilusionatzeko,
kartzelaldia ongi
aprobetxatzeko,
gutarrak sentimenduz
bihar laztantzeko.

Etxekoen taupadak
dantzuzkizu gelan,
kideak hor dauzkazu
aiduru kartzelan,
itxaropena dator
badakizu zelan,
haizea suspertu da
bihotzaren belan.

Gogoarekin zara
joan Euskal Herrira,
zure nortasunaren
sustraien habira,
Portugaleten zaude
igota zubira,
haurtzaroko txokoak
irrikaz begira.

*2010eko urriaren 5ean*

*146*

**Urriak 12: genozidioa**

**- Aizak hi mutil mainontzi -**

Urriaren hamabian
urteurrena abian,
sarraski baten gorazarrea
Madrilgo hirian,
konkistaren aitzakian
erregeen presentzian,
Espainia poz soa jarrita
armada handian.



Ospatzen du eliztarrak,
kasernan "txapel okerrak",
"Castellanan" zut presidenteak
agurtuz ikurrak,
etsita amerikarrak,
malkotu ditu bazterrak,
Abya Yalanen galdu zituen
arbasoen lurrak.

Indietarako lehian,
azkar iristeko nahian,
aberasteko nahi ezberdinak
bat itsasontzian,

luzaro itsasaldian,
eguzkiaren azpian,
Kolonek lurra ikusi zuen
zeruertz garbian.

Geroago zuten ekin
txanponen gosearekin,
hainbat euskaldun inperio zale
jantzita armekin,
hainbeste triskantzarekin
herrien odolarekin,
zikindu zuten euskal arima
beren eskuekin.

Jazarleak, hiltzaileak,
ziren konkistatzaileak,
sinismen eta usadioen
lurperatzaileak,
urrearen gurtzaileak,
herrien zanpatzaileak,
Abya Yalanen amets gaiztoak,
ar bortxatzaileak.

Afrikarren esklabotza,
itzel zartailuen hotsa,

europarrentzat axolarik ez,
elizaren lotsa,
bertako nesken bihotza
zetzan krudelki hilotza,
hango jendeak sentitu zuen
neguaren hotza.

Hispanitatearena
da egunik zitalena,
kulturak maltzur hustu dituzten
lurren lapurrena,
geroa da herriena,

euren auzolanarena,
prest dute alai oparitzeko
irrifar gardena.

Kolon dute ohoratu,
aurkikuntza goraipatu,
ez dira inoiz hauek damutu,
benetan penatu,
konkista ez da bukatu,
maputxeari galdatu,
oihana nahi du berreskuratu,
izana garatu.

*2010eko urriaren 11n*

*147*
## Eguzki-loreak mendian

Eguzki-lore, mendi
irtenaldietan,
luze behatzen zaitut
pausaldietan,
iluntzetan gordetzen
zara hostoetan,
erakusteko ederra
egunsentietan,
une alaietan,
eguzki printzetan,
ihintz ur-tantetan
zaude zeruetan,
izadia gozatuz
belardietan.

Orin ez daude aurten
miretsitakoak,
argazkietan polit
jasotakoak,
erauziko zituen
lapur lapikoak,

aldapa tristatu du
ganorabakoak,
"loreak goikoak
dira, bertakoak,
eta ez bekoak,
kale zulokoak",
dio haserre ume
honen malkoak.

Abodiko sabaia
dakusat morea,
goiz-argia jaio da
txit dotorea,
txioekin pizteko
duzu ohorea,
lurrean itsatsita
Eguzki-lorea,
hortxe amorea
erle bitorea,
dauka tenorea
urre kolorea,
xurgatzeko zeurea
den zaporea.

Zimeltzen hasi zara
naturaren pean,
haziak banatuta
lur apalean,
jarriko zaitut Eki
bordako atean,
gal daitezen ohitura
txarrak bat batean,
hilik zaudenean
ilunabarrean,
kantu bat airean,
otoi bat haizean,
Ama-Lur bizi dadin
osasunean.

*201oeko urriaren 18an*

*148*

**Odol-emaileak**

Odola dela eta
hainbat lagun-talde,
elkartu da kemenez
arduraz bestalde,
beharra zutelako
ziezaieten galde,
baietz esan zieten
bizitzaren alde,
elkartasunak gaitu
bihurtzen gizalde.



Astia hartu dute
lana bukatuta,
sendagileak dauzka
tresnak prestatuta,
besoak luzatuta,
zainak zulatuta,
hamar minutu barru
dena amaituta,
odol-bankua dago
orain sendotuta.

Odol-sartze bat ume
zurbila pizteko,
geroari ateak
goibel ez ixteko,
etsipena burutik
arin eraisteko,
gurasoen irria
azkar iristeko,
kalera jolastera
berriro jaisteko.

“Miresgarriak dira
odol-emaileak,
keinu guztiz indartsu
baten egileak,
musu-truk jarreraren
biderkatzaileak,
odoletan daudenen
bihotz ongileak”,
horrela mintzo dira
gaixo hartzaileak.

Emaileen odola
bikain emaitzetan,

hauxe diot maiteki
euren ohoretan,
“Gai izango bagina
arlo guztietan,
dena konpartitzeko
jendarte honetan,
biziko ginateke
zirt zorionetan”.

Ederra da amesten
dudan elorria,
polita kulunkari
haritzen orria,
itzela itsasoan
arrats oskorria,
bizia gorputzetan
ongi-etorria,
hartzerakoan zuen
isuri gorria.



*2010eko urriaren 25ean*

*149*

## Pakistandar bat kartzelan

**- Habanera -**

Pakistaneko herriak
bizi-maila du kaskarra,
lurrak aberatsak dira
banaketa oso txarra,
betiko jauntxoena da
etekinaren otarra
jende xumeentzat dira
asuna eta laharra,
Estatuak dirutu du
armada ero txatxarra,
zorretan gaitz hondoratuz
eremu polit nabarra
atzerriko kapitala
dabil gozatzen aparra,
ume txiroentzat dira
gosea eta negarra.

Gure aurrean jarri da
Pakistango irrifarra,
ohi duenez leunki du
laztandu bere bizarra,
itxaropenez zekusan
handik Europa zaharra,

tamalez ezagutu du
soilik kartzela zaharra,
buruan sentitzen zuen
beharraren deiadarra,
etxeko ekonomia
zegoen oso meharra,
sorlekuan aspaldian
dena zenez zoritxarra,
kanpora joan zen gaztea
hartuta zaku baldarra.

Atxilotu zuenean

polizia espainiarrak,
ikusi zituen hurbil
deabruaren adarrak,
terroristatzat jo zuen
zurrun epaile zakarrak,
ordutik kartzelan dago
zenbatuz egun iharrak,
patioan irakurtzen
ditu Korango oharrak,
bertan dagitza gogotsu
ibilaldi azkarrak,
zigor-gelatik dakuski
bere ametsen izarrak,

Alak eskaintzen dizkio
naro eusteko indarrak.

Bizimodu oparoan
sartzeko zegoenean,
irristatu zen krudelki
gabezian tupustean,
dirua behar duenez
kartzelan dabil lanean,
hilero saritzen ditu
senideak urrunean,
beraien jardun leiala
ez doa oharkabean
geure begirunea du
hormatzar hauen barnean,
gauero zirrara zaio
ernamuintzen bularrean,
onura hedatuko da
lurralde atseginean.

*2010eko azaroaren 1ean*

*150*

**Sendatu ludopatia**

**- Iparragirre abila dela -**

Ludopatiak erasotzen du
kartzelan eta kalean,
grina ziztatuz barneratzen da
ahularen burmuinean,
gaixoa kutsatuta
bizi da larrituta,
zorren estuasunean,
sendabidea aurkituko du
naturaren magalean.



Partxisean du gure presoak
tabakoa jokatuta,
jokaldi oker batek jarri du
erabat aztoratuta,
oldartu da orroka,
hor hasi da borroka,
bukatu du jipoituta,
kartzelazainek eraman dute
lasterrean zigortuta.

Ludopataren ezinegona
jokoaren deiadarra,
dena utzita joango da bizkor
txanponez lepo txamarra,
dardaraz du bihotza
kopeta dauka hotza,
gertatu da zoritxarra,
patrikak dauzka orain hustuta
begi hitsetan negarra.

Antzinakoek zioten zentzuz
"jokoa ez da errenta",
zer esanik ez txar bihurturik
eguneroko terrenta,
pokerrean gauero
beti urduri ero,
nortasunaren salmenta,
makina batek egingo zuen
etorkizunaren benta.

Jokoa baino gurtu bizitza
ekiaren izpietan,
ez du merezi tamal galtzerik
etxea apustuetan,
burua gozatzeko,

eskuak maitatzeko,
erabili aisietan,
ez zaitez amil ludopatian
keriaren sasietan.

Euskal Herria izan dadila
euskaldunen apustua,
eta ez joko antzuen lurra
anker bezain zapuztua,
altxa zaitez jatorki,
laga sutan gogorki
kalte hori erraustua,

euskararekin dasta ezazu
Ama-Lurraren gustua.

*2010eko azaroaren 8an*

*151*
## Biktimak

Monarken gutiziekin
lehertu zen gatazka,
bortizki bahitu zuten
hemengo abaraska,
biktimak ordutik dira
injustizien bazka,
herrien elkartasunak
arin gaitzala aska.

Botereak utzi nahi du
historia herrena,
makur moztuta, milaka
zanpaketen hobena,
Euskal Herrian bizi da
garbiki oroimena,
biktimek jasoko dute
geroaren omena.

Gatazkak hauspotzen dira
gezurrak hedatuta,
askatasun ezari
maltzur, "bake" deituta,

biktimak sentituko du
bihotza gozatuta,
justizia nagusitu
dela ezagututa.

Biktimak darabiltzate
gatazka astintzeko,
sasi-demokraziaren
orbanak estaltzeko,
etor dadila egia
iluna argitzeko,
eskubideen zirria
zauriak sendatzeko.



Gatazkak eragin ditu
biktimak bazterretan,
samina gogorki dabil
etxalde anitzetan,
mendeku hitza darabil
frankistak mezuetan,
konponketa, euskaldunak,
irmoki ezpainetan.

Bortizkerien aroa
lurruntzeko garaia,

gardenki erakusteko
herriaren kuraia,
biktimen egunsentia
gura dugu arraia,
gal dadila zurrunbilo
mingarri alderraia.

Biktimei zor diegu
geure begirunea,
gogoz eraitsiko dugu
herraren auzunea,
etorriko da dirdaiki
ametsaren unea,
demokratizazioan
dago abagunea.

Elkar ikusiko dugu
berbaren egunean,
aberri hau zigorretik
aterako denean,
biktima denak gogoan
izango direnean,
zelaian katerik gabe
bilduko garenean.

*2010eko azaroaren 15ea*n

*152*

**Franco hiltzaile bat**

Valle de los Caidos-en
ez da hazi laharrik,
falangistek ez daukate
kezkatzeko beharrik,
ez du merezi Francoren
hilobiak negarrik,
bizi guztian izan zen
hiltzaile bat bakarrik.



Jenerala hil zenean
aparra tabernetan,
jendea erruz bildu zen
topa sentikorretan,
luze izan eta gero
beldurrez sasietan,
arnasa hartu genuen
ordu alai haietan.

Lanbroak ekarri zuen
hezetsu albistea,
“ospitalean gorpu da
herrien azotea”,

ikastetxeek aginduz
itxi zuten atea,
ikasi genuen Francok
egin zigun kaltea.

Francok zartatu zizkigun
euskararen habeak,
euskal ohiturak xipildu
zentsuraren labeak,
erbestean, espetxean,
euskaldun nahigabeak,
amildu gintuen ia
oro atsekabeak.

Eskumak gozatu nahi du
Francoren oroimena,
itxura aldatuz maltzurki
bortxaz egin zuena,
Gernika bonbardatuta
txikitu zuen dena,
diktadura izango zen
ondoren okerrena.

Francoren oinordekotza
ez delako bukatzen,

darraigu zigorra minez
etengabe pairatzen,
aldi oro gauza bera
gabiltza desiratzen,
has dadila haizetea
laino beltza uxatzen.

Hogeita hamabost urte
Franco madarikatzen,
berak zapuztutakoa
gogotsu eraikitzen,
kendutako nortasuna
zoragarri sustraitzen,
herri honen esperantzak
maitasunez ehuntzen.

Geroan egongo dira
hezurrak tristatuta,
harri baldarren barruan
osoro bakartuta,
gure bihotzetan bero
biktimak babestuta,
aberria askatuta,
iraina lurperatuta.

*2010eko azaroaren 22an*

*153*
## **Burgoseko prozesua: Roberto Perez Jauregi**

Burgosen egin zen prozesua
han eta hemen entzuna,
berrogei urte beranduago
ez da eten oihartzuna,
zoro haizeen menpe zebilen
Francisco Franco zuntzuna,
herriari nahi zion armekin
galarazi erantzuna,
munduak garden ikusi zuen
borroka baten zentzuna.

Franco ausarki biluztu zuten
euskaldunek epaiketan,
“herri bat gara”, irmo zioten
euren berba zehatzetan,
Euskal Herria zutik zegoen
militarren muturretan,
frankisten herra isladatzen zen
sable hotzen orrietan,
askatasuna zebilelako
preso haien ezpainetan.

Jai girorik ez Sanandresetan
zain zegoen abendua,
auzian zeuden militanteek
behar zuten ukendua,
egoera hark eskatzen zuen
indartu mugimendua,
herrian lortu lehenbailehen
denon atxikimendua,
eskaini maitez gazte haiei
gogoen sentimendua.

Txapel oker bat tiroka harro
jazarleen kate begi,
Eibarren larri zauritu zuen
Roberto Perez Jauregi,
etorkizuna lapurtu zion
hiltzaileak krudelegi,
nahi zuelako zintzo Francoren
erregimena esegi,
elkartasuna zindo zabaldu,
utopiaren haztegi.

Iretargiak entzun zituen
izututa tiro hotsak,
samintasunez ulu zegiten
lantegien sirena hotsak,
gure bazterrak geratu ziren
egun haietan laiotzak,
gorpu ekarri zuten Roberto
urratu ziren ahotsak,
etxekoekin estu bilduta
larri zebiltzan bihotzak.

Hamasei gazte Burgosen zeuden,
zital tribunal gotorra,
haietariko seik zain zeukaten
sor, heriotza-zigorra,
saihestu zuten amesgaiztoa,
hormaren une gogorra,
beraien alde borrokatu zen
eibartar xalo jatorra,
Robertorentzat ereingo dugu
amnistiaren alorra.

*2010ekoazaroaren 30ean*

*154*

**Abenduak 3: euskararen eguna**

Euskararen eguna
ari da esnatzen,
goiz-argiko izpiak
poz bereganatzen,
kalean bizi dabil
laztanak banatzen,
euskaldunen bihotzak
leunki ernatzen.



Urteetan zaukate
nahita baztertuta,
antzinako kalteak
aprobetxatuta,
behar zaitugu lirain
ongi sendatuta,
genoziden sastadak
oro gaindituta.

Diglosiak gintuen
erabat pozoitu,
zure sehaska ia
genuen lohitu,

zorionez ez ginen
guztiak ohitu,
euskaltzalea zutaz
zintzo zen oroitu.

Euskara goratuko
du etorkizunak,
xalo berba dagiten
haurren maitasunak,
mintza dezala naro
Oiertxo txukunak,
jolasean ari den
Iraia kutunak.

Euskara da euskaldun
guztion izena,
bertakoak osoki
egin gaituena,
ikasi, erabili,
heldu ekimena,
nortasuna janzteko
biderik lauena.

Euskal Herriak baitan
du aniztasuna,

leku askotako
aberastasuna,
euskara izango da
denon batasuna,
gure lurraldearen
ikur ezaguna.

Euskararik onena
hitz egiten dena,
kalean barra-barra
nahi dugu gizena,
traketsa izan arren
edota herrena,
dotoretuko zaigu
landuz mintzamena.



Ortzia izartuta
jaia da bukatu,
nirekin zara amets,
goxo oheratu,
zurekin gura nuke
bizitza urratu,
zure ele politak
mingainaz gozatu.

*2010eko abenduaren 6an*

*155*
## Abenduak 10: eskubideak

Urmaela lehortu da
euria urrituta,
sargoriak utzi ditu
iturriak hustuta,
eskubideak ur barik
daude egarrituta,
Estatuen leotzetan
biluzik giltzatuta.

Abenduaren hamarra
gure egun kutuna,
ezin delako ospatu
egin zaigu astuna,
giza eskubideak du
zimurtuta gutuna,
agintariek darraie
bete barik ituna.

Berekoikeriak ditu
bultzatu gudateak,
jendartean inposatu
bidegabe kateak,

hola prestatu dituzte
hizkuntzen galbideak,
diruarengatik ito
giza eskubideak.

Injustiziak jaso du
kartzelaren zaborra,
ordain dezan behartsuak
boterearen zorra,
mardul ibiliko balitz
eskubide jatorra,
hondoratuko genuke
zitalkeri gotorra.



Giza eskubidea da
gizabanakoena,
halaber menperatuta
dauzkaten herriena,
biak ezinbestekoak
ez kaltetzeko dena,
izadia izan dadin
altxorrik ederrena.

Haz daitezela umeak
eskubideen jabe,

gose eta egarria
ezaguturik gabe,
hezkuntza bihurtuko da
gabeziaren labe,
euren arteko jolasak
irrifarraren habe.

Giza eskubideetan
dago etorkizuna,
herriak lagunduko du
gogoz eginkizuna,
elkartasunean dabil
jori argitasuna,
bihar ikusiko dugu
aise berdintasuna.

Garaia iritsiko da
gozoki bizitzeko,
larruan zure zirriak
leunki sentitzeko,
egunsentietan bare
zurekin esnatzeko,
elkarrekin eskubide
gaudela ospatzeko.

*2010eko abenduaren 13an*

*156*

**Jostunen grazia**

Mundu eder bat dute
maisuki josteko,
piperraren grazia
buruak pozteko,
jostunak bildu dira
nahiak adosteko,
ilusio xaloak
truk salerosteko,
sentimendu jatorrak
bor-bor egosteko.



Hitz batek dakarkie
azkarki zirrara,
dantzutenean nonahi
garbi mara-mara,
babestuta dirudi
gizen, zuhaizkara,
baztertzen dugunean
argal, belarkara,
jostunen mingainetan
aiseki euskara.

Ikuskizun bat dute
gustagarriena,
lore xume batean
ikusten ez dena,
eskuarekin uki
ezin daitekeena,
barea datorrela
alai dioena,
ortzmugan dakusagun
ostadarrarena.

Aisia gozatzeko
lekurik onena,
aipatu nahi du jostun
gazteak hurrena,
mendia, itsasoa,
batzen dituena,
belarra izaten da
zinez leunena,
olatuen xuxurla
lasaigarriena.

Erabaki bat dute
oraindik hartzeko,
erarik errazena
goxo bizitzeko,
handinahia egotzi
gogoa ontzeko,
auzolanean apal
oro uztartzeko,
geroaren zutoinak
zintzo jasotzeko.

Jostunek hor darraite

hona eta hara,
ehuntzen iluntzero
ideien ganbara,
irits daitezen arin
gure arimara,
gaurkoa zuzen doa
gazteen baitara,
“bizi Euskal Herria
euskalduna zara”.

*2010eko abenduaren 21ean*

*157*
## Gure abeslaria

Aspaldi darabilzu
euskara kantuan,
olerkarien hitzak
uztartuz doinuan,
abeslari, amets bat
daukazu buruan,
esperantza pizten da
zure inguruan.

Kantuan hasi zinen
senak eskatuta,
herri zaharrarekin
zeunden kezkatuta,
izadiak zinduzkan
oro txundituta,
gure ele kutunak
zinez txoratuta.

Salatu eta gero
herriko matxurak,
mehatxatu zintuen
Francoren zentsurak,

aurrera jarraitzeko
zioen ardurak,
garaile izan ziren
hemengo ohiturak.

Zurekin hazi nintzen
hura poztasuna!
Aurkitu nuen eder
euskalduntasuna,
gogoan erditu zen
zoriontasuna,
euskarak jaso zuen
neure maitasuna.



Kantuekin zenuen
ekarri geroa,
arbasoen sustraien
pizkunde beroa,
euskaldunak behar du
zure abaroa,
naro izan dezagun
hemen uztaroa.

Herria goxo dabil
zure doinuetan,

maiteki jasotako
ahapaldietan,
ohoratzen zaitugu
kantuz ezpainetan,
txistu dagigunean
gure mendietan.

Oholtzaren gainean
prestu kantaria,
eskaintzeko gogotsu
bere emaria,
arimekin lotu du
estuki haria,
harmailetan jaso du
zirraren saria.

Doinurik eztiena
Ama laztantzeko,
euskararen enborra
polit apaintzeko,
gitarra bat hitzaren
nahia goratzeko,
ahots bat herriaren
bihotza ontzeko.

*2010eko abenduaren 27an*

*158*

**Urte Berrian urte berriaz**

**- Juana Bixenta Olabe -**

Kaixo bi mila eta hamaika
Urte Zahar joan zen atzo korrika,
josten zebilen itxaropena
lurralde honek behar duena,
etorkizuna,
aurrean duzu betekizuna,
amaitu arren, txukun ehuna.



Neguan zatoz urtarrilean
gauerdiko kanpai-hotsen ostean,
Zure argia Urte-Berria,
galdetzen dabil gure herria,
ilusioa,
ari delako tinko saioa
Amnistiaren segizioa.

Zurekin dena dirudi jaia
afaria eta apar alaia,
kaleak lepo, ero gauean,
ia hustuta gero goizean,
biharamuna,

kartzela iaz bezain iluna
espeak behar zaitu laguna.

Biziki hasi zara abian
Gabon Zaharreko iretargian,
egin dizugu polit harrera
zurekin joango gara aurrera,
Euskal Herrira,
gogoa dugu harantz begira
bete dadila bizkor desira.

Antxintxiketan zaitut agurtu
herrimina zait horrela samurtu,
biraka nahi dut gorputza zaildu
umore txarra guztiz isildu,
harrigarria,
kirolak duen dohain larria
kartzelan oro indargarria.

Olentzerori diot eskatu,
aurten gatazka baietz bideratu,
zure urtean gerta dadila
lanean izan zaitez abila,
eragilea,
asmo berrien bultzatzailea
askatasun garaitzailea.

Urte Berri atsegina
zuen bihotzen aldarrikapena,
Bilbon zarete erruz bilduko
gure bularrak dira puztuko,
txit hunkituta,
milaka irri han elkartuta
kateak hemen zart apurtuta.

Etorri zara ni goresteko
maite nauzula ezti esateko,
Urte-Berria dezadan goza
ekarri duzu begien poza,

xalotasuna,
Urtatsek bildu gaitu kutuna,
bizi dezagun edertasuna.

*2011ko urtarrilaren 3an*

*159*

## Katua gogoratzen dudanean

Katua atzaparka
urduri leihoan,
katemeak dabiltza
deika kanpoan,
ilargiaren isla
diz-diz patioan,
ero ibiliko da
deslai gau osoan,
maukari auzoan,
pizti sena soan,
limurki jokoan,
sutsuki saioan,
gero kiribilduta
lo sutondoan.

Alboko txakurrak du
zauritu katua,
ehiztaria izan da
bart ehizatua,
larrua hozkadekin
dauka zartatua,
jaso dut izan dadin
garaiz artatua,

miau tristatua,
soin dardaratua,
madarikatua
herraren patua,
etsipenez dakusat
lar zanpatua.

Goiari eutsi dio
gure felidoak,
orbanak miazkatu
ditu gajoak,
ilajea berriz du

dotore lañoak,
bibotetxoak dauzka
polit inozoak,
malgu hankatxoak,
trebe eskutxoak,
belarri jasoak
dira zetazkoak,
begi gautarrak,amets
kolorekoak.

Katakume bat zela
sartu zen etxean,
geroztik dabil gure

aldamenean,
miau dabil kexati
goseaz denean,
eguzkitara joan
gura duenean,
sarri jolasean
zirrien eskean,
eta hainbestean
poz atsedenean,
urrumaka gozoki
nire ohean.

*2011ko urtarrilaren 10ean*

*160*

**Egin Gara**

Egin, zu izan aurretik
jabe zen ezereza,
gure herria maitatu
zeharo lan nekeza,
gozatu genuenean
bero zure babesa,
Estatuari zitzaion
beheratu laineza.

Elkarlanean zintuen
herriak sortu Egin,
irakurle dohatsuak
laztanduta berregin,
ideia askatzaileak
zenituen jaregin,
zurekin sentitu nuen
txit hamaika atsegin.

Oparoak izan ziren
jasotako aleak,
argitzen zituzten dirdai
burmuinaren kaleak,

erakarri zenituen
utopiaren zaleak,
berriekin elikatu
langileen galeak.

Zalantzazko garaietan
izan zinen gidari,
jakin-mina asetzeko
gazteen sukaldari,
asteburuetan mardul
aisiaren gurari,
astegunetan oinarri
solasaren atari.

Izan zinen zanpaketen
kontrako boz ozena,
herri honen aldarrien
idazkari zuzena,
jendarte mugimenduen
aterperik onena,
Ama-Lur esnatzen zuen
goizeko gozamena.

Presoentzat izan zinen
lagunik leialena,

aberria bizitzeko
biderik errazena,
zurekin arin zitzaien
aldentzen hasperena,
zigor-gelak zirudien
tokirik samurrena.

Aznarrek eta Garzonek
zintuzten akabatu,
hogeita bat urte bortitz
zituzten ezabatu,
poza ziguten

uda hartan giltzatu,
zure hazia ordea
herrian zen loratu.

Bultzatu zintuztenean
krudelki errekara,
igarri genuen zital
galeraren ikara,
zorionez jator jardun
genuelako zara,
atzo izan zinelako
gaur egunero Gara.

*2011ko urtarrilaren 17an*

*161*
**Eltxoekin espe Puerton**

Eltxoak hegaldari
zingira hezean,
larbak garatu dira
ur-azalean,
eraiki zutenetik
kartzela sailean,
erosotxo dabiltza
hemen porlanean,
odol edanean,
ziegen barrenean,
ziztatuz zeurean
edota neurean,
loaldiak lapurtuz
modu latzean.

Hamaika eltxo dago
espetxe honetan,
patioko komunetan
eta ziegetan,
egunez hartzen dute
pausa sabaietan,
erasotzeko gauez
hegaldi motzetan,

negute hotzetan
ahul zokoetan,
uda beroetan
sutsu gauminetan,
jori ugaltzen dira
gure kaltetan.

Ordu txikietan zait
hurbildu eltxoa,
odola xurgatzera
dator atsoa,
urduri esnatu naiz

hau amets gaiztoa!
Alboan hegan dabil
intsektu pitoa,
durundi eroa
zital dipteroa,
luze zartakoa
hutsa halakoa,
bihar irainduko dut
bere patxoa.

Eltxoa da lurrean
gu bezain zaharra,
elikatzeko dauka
era bakarra,
bizitzeko behar du
inguru urtarra,
guk murrizten diogu
sorleku uharra,
eme edo arra
guretzat takarra,
gizaki zabarra
txotxolo samarra,
eraits diezagutela
kartzela tzarra.

*2011ko urtarrilaren 24an*

*162*

## Zurekin Korrikan

**- Ikusten duzun goizean -**

Arin-arin goizaldian
batuta goaz abian
Behobia-Donostian,
nire izena duzu zintzilik
daramazun zenbakian,
helmugako zuzenkian
zurekin nago irrian
paparreko izerdian.



“Argazkiak zigortuta
zaudete zokoratuta”,
diozu arduratuta,
zeozer egin gura zenuke
egoeraz kezkatuta,
gure arnasa hartuta
lasterketan lehiatuta
sentitu zara piztuta.

Espetxean lasterkari
zara leun akuilari
kirol jardunen atari,
oinetakoak jantzi dituzu

beha zeru garbiari,
ekiteko bideari
zangoak hor dira ari
gure alde mezulari.

Euskal-Herriko lurretan
gabiltza antxintxiketan
eta ez putzu honetan,
horixe dugu poz irakurri
gure egunkarietan,
zabiltzate urteetan
gurekin maratoietan,
zurekin gaude zorretan.

Hemen ditugu eskertzen
zuen keinuak goratzen,
jarrera xalo omentzen,
praka motzetan gaude guztiok
gaurko saioa prestatzen,
belaunak ongi berotzen,
giharrak gogoz luzatzen,
sasoiarekin gozatzen.

Handik hona zara hasi,
hementxe bikain ikasi,
hauxe ezagutarazi,

horma gotorra duzu gainditu,
bagarela adierazi,
herri-kontzientzia hazi,
lasterketa irabazi,
kartzelak leherrarazi.

Korrikan nabil goizean
biraka etengabean
espeen ibilbidean,
hola ari naiz horma hauetan
kirola dagidanean,
orduan oldozmenean
zabiltza aldamenean
jator ahaleginean.

Herrira naiz itzuliko,
kartzelak urrun utziko,
elkar dugu ikusiko,
zurekin trostan gustura nuke
aberria ibiliko,
izadia miretsiko,
nire mira zurekiko
txeratsu adieraziko.

*2011ko urtarrilaren 31n*

## **atara**miñe formatu txikian

---

**El silencio del infierno**
Fernando Alonso
2003

---

**Gosea lagun, laguna**
Segapoto kolektiboa
2004

---

**Lunaren Goiztiri**
Juan Luis Mugertza
2005

---

**Claude Gueux**
Victor Hugo (itzulpena: Zorion Zamakola)
2007

---

**Kartzelako neurriak**
Urtzi Zubizarreta
2008

---

**Bakarmortuko kronikak**
Mikel Antza
2011

---

**Ametsen txokoan bizi baiz**
Ibon Muñoa
2011

"Hamar urte honetan, jakiñekua dok kalandres hori, preso hakela hainbat kaixolatan eta hire gorputza katigu dakelakuan, harrokerixaz gaiñezka dabizela, adurra darixola, hezi habelakuan. Ez jittuek hire modukuak ezagutzen!! Han hago kardantxilluon libertadian alde egin dualako herri honek iñoren bende luzaruan jarraittu ez deixan. Baiña hire burua gure artian dagok, Arrateko zelaixan, Untzagan, Bidebarrixetan, Txantxazelain...".

***Trunboi***



**Ibon Muñoa Arizmendiarrieta**
1958.05.18
Eibar

2000ko urritik hona daukate preso. Valdemoro, Kordoba, Burgos, Langraitz... eta azken zazpi urteotan Puerto I espetxean. Kronologikoki antolatuta, 2000 - 2011 tarte horretan idatzitako hainbat bertsoren bilduma dakar liburu honek.



**atara**miñe
**www.literaturakoadernoak.org**